

EGILEA
**Xabier Makazaga**

2003tik Bruselan errefuxiatua.

AZALAREN EGILEA
**Oier Gonzalez Bilbatua**

2005ko uztailaren 29an Frantzian atxilotua.
2011ko apirilaren 29tik kalean da.

**www.literaturakoadernoak.org**



ISBN: 978-84-940593-2-2
LEGE GORDAILUA. DEPÓSITO LEGAL. DÉPOT LÉGAL
SS-1629-2012

# - Hitzaurrea -

Jendarmeek bigarren aldiz atxilotu eta komisariako lau egunak pasatu ondoren, lehen espetxealdian izandako toki berean sartu ninduten, La Santeko D blokean. Bertan, oso berri txarrak nituen zain: Gurutze Iantzi urnietarra hil berria zen Guardia Zibilaren kuartel batean, torturen eraginez bihotzekoak jota. Beste lagun bat hilzorian zegoen. Bertsio ofizialak zioenez, poliziek atxilotu eta Indautxuko komisarian zeukatela, bere burua leiho batetik bota omen zuen.

Gurutze ez nuen ezagutzen. Bai, ordea, Xabier Kalparsoro zumaiarra, hilzorian zen burkidea. Sasian ezagutu genuen elkar hilabete batzuk lehenago, eta halako egoerei maiz egin behar izanagatik aurre, beti bezain gogorra egin zitzaidan. Borrokaren latza!

Ondorengo urte parean, ETAk ekintza garrantzitsuak egin zituen, edo saiatu zen egiten; bereziki, 1995ean. Gregorio Ordoñez, Aznar eta erregearen kontrakoak izan ziren esanguratsuenak eta, azken bietan kale egin arren, maila operatibo ikusgarria erakutsi zuen.

Gatazka politikoa konponbidean jartzeko bere konpromiso tinkoa ere bai, bi negoziazio-marko proposatzen zituen Alternatiba Demokratikoa ezagutzera emanez. Bata, ETA erakundea eta espainiar Estatuaren artekoa, Autodeterminazio eskubidea ezagutua izan zedin. Bestea, Euskal Herriko eragileen artekoa, mugarik gabeko prozesu demokratikoari ekiteko.

Kalean giroa bero zegoen. Batzuk, lazo urdina jantzita, ETAk bahituriko Aldaia enpresaria askatzeko eskatuz. Besteak, aurrean, “Euskal Herria Askatu!” oihukatuz. Aldi berean, errepresioa nabarmen areagotu zen. Ertzaintzaren parte hartze oso garrantzitsuarekin, gainera. Tolosako hilerrian GALen lehen biktimak izandako Joxi Zabala eta Joxean Lasaren senideak egurtu ondorengo egunean, Rosa Zarra pilotakada batez hilzorian utzi zuten, adibidez.

GAL aferari zegokionez, Lasa eta Zabalarena argitzen hasi besterik ez zen egin orduan. Talde horrek bere gain harturiko lehen ekintzaren ingurukoak izan ziren urte haietan bazterrak astindu zituztenak. Etakide batekin nahasiriko Segundo Marey frantziar herritarraren bahiketan PSOEko hainbat buruzagik izandako ardura zuzena begi bistan geratu baitzen.

Eskandalu hura eta PSOEren beste trapu zikin batzuk haizatzeari esker irabazi zituen PPk 1996ko martxoko espainiar hauteskundeak, eta giroa are gehiago berotu zen, bateko zein besteko mobilizazioekin. Tartean, Donostiako Artzain Onean presoen alde txandakako gose greba mugagabea, presook gure aldetik hainbat borrokaldi burutzen genuen bitartean.

Testuinguru horretan bururatu zitzaidan nobela bat idaztea. Etakideek sasian bizi zuten errealitatea ahalik eta hobekien islatuko zuen fikziozko nobela bat, hain zuzen ere. Nazka-nazka eginda bainengoen ez hankarik ez bururik ez zuten hainbat gauza irakurtzeaz ETArekin loturiko ia liburu eta nobela guztietan. Ezjakintasunetik idatziak batzuetan, maltzurkeia hutsez gehienetan.

Bizi berri genituen urte gorabeheratsu haietan bospasei hilabeteko denbora tarte bat aukeratu, eta kapituluz kapitulu eraiki nuen eleberria, bitarte hartan benetan gertaturikoak eta fikzioa nahasiz. Hogei kapitulu behar izan nituen guztira.

Bukatu ahala eman nien irakurtzera espetxeko burkideei. ETAren tradizioa beti izan da barne funtzionamenduari buruz ezer ez kontatzearena, ezta barra-barra esaten ziren gezur galantei aurre egiteko ere, eta haiek ez zuten batere argi ikusi nire egitasmoa.

Nik neritzon garrantzitsua zela errealitate hura ezagutaraztea eta nobelan esaten nituenak soberan zekizkiela Poliziak. Burkideek horri pisu handiko arrazoi bat kontrajarri zioten. Nik nonbait ondo kontrola nezakeen zer esan eta zer ez, baina halako gauzak argitaratzeri argi berdea emanez gero, arrisku handia ikusten zuten. Azkenean, bertan behera utzi nuen argitaratzen saiatzeko asmoa.

Handik aurrera, aurreko urtetan baino are abiada biziagoan etorri ziren munta handiko gertakariak: HBko mahai nazionala kartzelaratu zuten Alternatiba Demokratikoa zabaltzeagatik, Egin egunkaria itxi, Miguel Angel Blancorena, Lizarra-Garaziko hitzarmena...

Urteak joan ziren eta 2001ean bete nuen frantziar Estatuan ezarria zidaten kondena. Ordurako, gogotik borrokatu ondoren, irabazia genuen Espainiaratuak ginenok torturatuak ez izatea, eta Portbouko mugan nire zain zeuden guardia zibilek ez ninduten ukitu ere egin. Aske geratu nintzen.

Ondorengo bi urteak ene herrian gozatu ahal izan nituen, Zarautzen, baina azkenean, hogeita bi urte lehenago bezalaxe, berriro ere torturaren ikaraz alde egiteko erabakia hartu behar izan nuen. Bruselara etorri eta hementxe bizi naiz geroztik.

Torturaren gaia jorratu dut gehienbat hemen, tartean hiru liburu idatziaz gai horri buruz, eta halako batean bururatu zitzaidan jada ez zegoela arrazoirik kartzelan aspaldi idatzitako nobela hura argitaratzen ez saiatzeko. Euneratzea erabaki nuen eta hara emaitza: hasierako hogei kapitulutatik hamaseira laburtu eta epilogo bat gehitu.

Batasunak Anoetako belodromoan 2004ko azaroan egindako proposamenaren ondorengoan kokaturiko epilogoa, hain zuzen ere. "Orain Herria, orain bakea"k hamar urte lehenago ETAren Alternatiba Demokratikoak irekitako bidea, bi negoziazio-markorena, garatu eta zehaztea baitzuen helburu. Eta alternatiba haren aipamenarekin emana nion bukaera kartzelan duela hamabost bat urte idatzitakoari.

Anoetako proposamen hark ekarri du ezker abertzalea gaur egun bizi dugun egoerara. Lizarra-Garaziko hitzarmena bertan behera geratu zenetik hain beharrezkoa zen esperantzari leiho berri bat irekiz, apartheid politikoa gainditu eta aurrera egin baitzuen eraikuntza nazionalean.

Geroztik, hamaika gorabehera izan da Euskal Herrian, eta batzuetan etsipenak gaina hartu zion esperantzari. Guztiz alderantziz gertatu da, ordea, "Zutik Euskal Herria" txostenak ezker abertzaleko gehiengo handi baten babesa jaso zuenetik. Gero eta indar handiagoz, gainera.

Horregatik ikusten dut gero eta hurbilago Zarautza bueltatu ahalko naizen eguna. Lehenik oporretan, Bruselan ezagutu dudan neskalagun alemanak eta biok Bruselan bizitzen jarraitzeko asmoa baitugu oraingoz. Gero, Elkek euskara ikasi ondoren, betirako.

Gaur egun espetxean, sasian edo ni bezala erbestean diren aspaldiko lagun guztiekin batera, Euskal Herri askean izango ahal da!

*Brusela, 2012ko iraila*

# - I -

Gauerdia. Hiru etakideek gogo biziz itxarondako eguna iritsia zen. Goizaldeko ordu batean jarria zieten mugalariarekiko hitzordua, eta haren laguntzarekin espainiar zein frantziar Estatuek inposaturiko muga zeharkatzeari ekingo zioten mendiz Hegoalderantz.

Hamazortzi urte lehenago, Franco diktadorea ohean hil berritan, Segoviako kartzelatik ihes egindako lagunek alderantzizko zentzuan zeharkatu nahi izan zuten muga berbera. Lagundu behar zien mugalaria ez zen agertu, eta gogotik ordaindu zuten hitzorduak kale egin izana.

Baldin eta mugalariaren laguntza izan balute, espetxetik ospa egin berri haiek erraz zeharkatuko zuketen muga. Beren kabuz, ordea, zeharo galdu eta noraezean ordu luzeak eman ostean, ia denak guardia zibilen atzaparretan erori ziren, banan-banan edota taldeka.

Hiru etakideek ederki zekiten haiek egindakoa: dum-dum balak erabiliz, Oriol Marti izeneko anarkista katalana akabatu eta Isasi etakideari zauri larriak eragin; gainerakoak era basatian torturatu...

Txirrita eta Korta etakideak ere urte berean erori ziren haien tiropean zerraldo. Geroztik, ez zuten besterik hil muga mendiz igarotzen, atxilotuak ere oso gutxi izan ziren, eta horrenbestez hiruek behin eta berriro esana zioten euren buruei mugalarien laguntza izanik ez zitzaiola beste munduko beldurrik izan behar halako mugapasoei.

Hamar urte lehenago, baina, poliziak hotz-hotzean akabatu zituen pasoa itsasoz amaitzear ziren lau militante autonomo, eta 1984an Pasaiako portuan gertaturiko segada hura iltzatua geratu zitzaien buru-bihotzetan.

Horregatik, ezin iskin egin beldurraren atzapar luzeari eta, lasaitu alde, kartetan eman zituzten afalosteko orduak arduraduna heldu bitartean. Soilik gauerdia gainera etorri zitzaienean utzi zioten jolasteari. Une hartan, haren zain zeuden hark bezperan laga zituen gela berean.

– Urtzik ez ahal digu kale egingo! –Santi kezkati zegoen, arduraduna gauerdia baino lehen agertzekotan geratu, eta hamabiak jotzean oraindik azaldu ez zelako.

– Bera den bezain zorrotza izanik, harritzekoa litzateke –Anjelek ez zuen batere kezkagarritzat atzerapentxo hura.

– Niri ere zorrotza iruditzen zait, baina... –Santik hamaikagarren begirada urduria egin zion erlojuari.

– Baina ez zu bezainbestekoa, noski –Anek ez zuen galtzen utzi burkidea zirikatzeko aukera hura.

Bezperan etxe hartara ekarri zituenean, bidearen azken muturrean arduradunak begiak itxiarazi egin zizkien, eta ez zekiten non ziren. Nolanahi ere, baserriaren susmoa hartzen zioten etxeari. Ez zebiltzan oker. Atariraino autoz heltzea ahalbidetzen zuen baserri isolatua zen, bai, eta hala izanik, segurtasun-neurri hura hartzea beste zenbaitetan baino askoz ere errazago egin zitzaien.

Arrazoi ezin hobea zuten hain tentuz jokatzeko. Mugatik gertu samar zegoen etxea izanik, erakundeak estimu handian zuen etxe hura, eta huraxe zen, izan, torturaren bidez haren berri erauziko ez zieten ziurtasun osoa izateko bide bakarra.

– Hemen da! –Santik lasaitu ederra hartu zuen motor baten burrunba entzutean, ordu hartan zarata hura Urtziren autoarena besterik ezin baitzen izan.

– Dena prest? –Urtzi izan zen, bai, gelara sartu eta ohiko galdera egin ziena.

– Zigarreta bat pipatzeko astirik ba al dut? –galdegin zuen Anek.

– Autoan erreko duzu, neska! –haserretu zitzaion Santi.

– Ez, ez, hobe hemen erretzea. Autoz egin beharreko bidea laburra da, eta denboraz oso ongi gabiltza.

Bezperan, Urtzik argi utzi zien, gehienbat arlo hartan batere esperientziarik ez zuen Aneri zuzenduz, pasoan ez zutela erretzerik izanen:

– Zigarreta gauez oso urrundik ikusten ahal da, eta ez hori bakarrik, baita usaindu ere horretarako gaitasuna izanik. Bada, bi arrisku horiek saihesteko, badakizue zein den erremedioa, ez?
Arduradunak ohiko zuen bere aholku eta aginduak errealitatean oinarrituriko adibidez laguntzea. Egun hartan ere eutsi egin zion ohitura hari.

– Bidearen lehen zatian lagunduko dizuen mugalariak, Larrunek, txapela kentzeko moduko usaimena du, eta ez zaio oharkabean joanen inguruko tabako erretzailerik. Horretarako, ordea, nahitaezkoa da zuetariko inork ez pipatzea.

Zioenaren indargarri, talde batek Larruni esker egindako eskapada kontatu zien.

– Auskalo zeren peskizan izanen ziren jendarme madarikatu haiek ezkutuan zain. Kontrabandoa zuten beharbada jomugan, baina, hala izanik ere, mugalariak arriskua “usaindu” ez balu –oso keinu adierazgarria egin zuen hatz bat sudurrera eramanez–, akabo! Taldea ziplo eroriko zen zepoan. Eskerrak gure Larrunek maisuki egin zien iskin. Denak geldiarazi, eta beste bide batetik ekarri zituen. A ze artista!

Ikastaroan ere ederki azpimarratu zieten ez erretzearena. Bertan, burua estalia zuen kide batek hamaika gauza interesgarri azaldu zizkien hainbat arlo ukituz. Tartean, muga-pasoari buruzkoak:

– Arropek ez dezatela ibiltzerakoan zaratarik egin, eta ahalik ilunenak izan daitezela. Oinetakoak, egokiak... eta eginak! Erosi berriak ez, otoi! Pipa eta granada, gerrian zorro banatan ongi babestuak, galtzeko arriskua saihesteaz gain, behar izanez gero erraz ateratzeko moduan...

Aholku haiek guztiak gogoan, sartu bezalaxe irten ziren laurak baserritik: begiak itxita eta, bidean estropezurik ez egiteko, arduradunaren aholkuei adi. Auto barruan ere halaxe jarraitu zuten, harik eta Urtzik begiak irekitzeko baimena eman zien arte:

– Laster helduko gara. Dena prest izan.

Arduradunak detaile oro egoki prestatuak zituen autoa bide bazterrean aparkaturik ez uzteko: gelditu, mugalaria bertan zela erakusten zion seinalea ikusi, eta hirurei erraietatik atera zitzaien «zorte on!» hunkitu bat zuzenduz zein bide-zidor hartu behar zuten erakutsi zien.

Urtzik autoarekin aurrera egin ahala, mugalariak bere atzetik joateko gonbitea luzatu zien. «Hau al da Larrun famatua?!» esan zion harrituta Anek bere buruari, Iparraldean egindako festa batean ezagutu baitzuen bospasei urte lehenago, eta bere poza kanporatzekotan izan zen, baina ez zuen halakorik egin: «Hobe burkideek honen berri ez badute. Atxilotzen bagaituzte, inork ez dugu mugalaria ezagutzen, eta kito!».

Auskalo Larrunek bere aldetik Ane ezagutu zuenetz. Ez zion bederen halakorik aipatu txoko babestu batera eraman zituen bitartean. Berehala iritsi ziren bertara.

– Bidea laburra izanen da. Eta erraza: aldapa bakarra –mugalaria eman beharreko azalpenak ematen hasi zitzaien.

Hitzordua gauerditik aurrera jarri zieten une beretik, nabaria egin zitzaien bidearen laburra, luzea izatekotan lehenago ekin beharko baitzioten bideari. Laburtasunak, haatik, ez zien ezeren garantiarik ematen, laburrenak izaten baitira maiz pasorik arriskutsuenak.

Larrunen babesak bai eman ziela konfiantza, oso handia zinez, eta berori lagun ekin zioten bideari mugalariaren atzetik. Ordubeteren

buruan, inongo ezustekorik gabe, mendi gainean ziren, ordurako jendarmeen arriskutik nolabait at.

Handik aurrera, guardia zibilak izango zituzten etsai nagusi, eta leku hartantxe eman behar zien Larrunek lekukoa Hegoaldeko mugalariei.

– Zuhaizti horretan izanen dituzue zain.

– Eta ez badaude? –Aneri ez atzera ez aurrera gelditzeko beldurra egin zitzaion.

– Lasai, kasu horretan, edota atzera egin beharrean aurkitzen bazarete, hemen izanen nauzue goizeko bost eta erdiak arte.

– Mila esker, Larrun! –Aneri bihotz-bihotzetik irten zitzaion.

Baita beste bi etakideei ere, besarkada bero bat emanez agurtu zutenean.

– Zorte on, lagunok! –are sakonagotik jalgi zuen mugalariak bere desio sentitu hura.

Larrun atzean uztearekin batera, urduri jarri ziren. Ez soilik haren babesa galtzearen ondorioz, baita guardia zibilei beldur galanta zietelako ere. Ederki zekiten zer-nolako astakeriak egiteko gai ziren, eta haien atzaparretan eror zitezkeela pentsatze hutsak hotzikara eragiten zien.

Arboladian sartu bezain laster ezagutu zituen Santik bidearen bigarren zatian laguntza emango zieten mugalariak, ordurako egina

baitzen paso bat biekin. Berehala esan zien burkideei haien lanean oso finak iruditu zitzaizkiola. Lasaitu egin ziren hirurak.

Santirengan hain oroitzapen ona utzitako bi mugalari haiek neska-mutil gazteak ziren; Aneren adinekoak gutxi gora-behera.

– Ez ditugu batere berri onak –mutilak hartu zuen lehenik hitza–: mugimendu gehiegi dago behealde horretan.

Biak gorantz zetozela jendea ikusi omen zuten abelburu batzuekin. Kontrabandoan zebiltzan nonbait.

– Ia ziur gaude ikusi egin gaituztena –neskaren ahotsak kezka islatzen zuen–. Ezagutu ziur ezetz, urrunegi baikinen, baina gure mugimenduez ohartu, mugalari lanetan gabiltzala susmatu eta txakurrak jakinaren gainean jarri badituzte...

Mugalarien iritziz, gaueko lan hartan ibiltzen ziren gehienek guardia zibilekin inongo traturik ez bazuten ere, ez omen zegoen fidatzerik. Dena den, ez zuten arrisku handirik ikusten biak bakarrik bueltan jaisteko, inguruko bazter guztiak primeran ezagutzen baitzituzten. Paraje hura arrotz egiten zitzaion hirukote bat onik pasaraztea, haatik, arriskutsua zatekeen.

– Ba, hori besterik ez bada, ez dut ikusten atzera egiteko adina motibo dagoenik –Santik azkar asko hartu zuen bere erabakia.

Muga onik zeharkatuz gero, egun hartan bertan taldeko laugarren kidearekin elkartu ahalko zen: Ines bere neskalagunarekin. Muga-pasoa bertan behera utziaz, ordea, Inesengandik urrun jarraitu be-

harko zuen. Eta elkar ikusi gabe emandako bi hilabeteak izugarri luzeak egin zitzaizkion.

– Ez diogu ezinbestean atzera egin beharra duzuenik, baina zalantzak ditugu –mutilak ederki azaldu zuen mugalarien ikuspuntua–. Gogoratu iaz gertatu zenaz.

Denek zuten gogoan urtebete lehenago jazotakoa. Iparraldeko burkideek txoko batean utzitako lehergai mordoa eskuratzera joandako bi mugalari poliziaren zelata batean jausi ziren. Bada, tortura latzen bidez haiei material hura non utzi behar zuten erauzi ondoren, ia Madrileko taldea harrapatzeraino heldu zen atxiloketa-kate luze bati ekin zioten.

– Beharbada hobe izango da atzera egitea –Aneri zalantzaren harra egin zitzaion.

– Atzera?! Halako zerbait gertatzen den bakoitzean kikilduko bagina...

– Nola kikildu?! Hemen ez da inor kikildu!! –Anjelek zakar kendu zion hitza Santiri, ez baitzuen batere gustuko izan haren aipamena.

– Nik ez dut halakorik esan.
– Beno, beno, ez gaitezen haserretu –Anek errotik moztu zuen liskar hasiera hura.

Ika-mika baztertuz, eztabaidari behar bezala heldu, eta Santik bere argudioak eman zituen. Arina iruditu omen zitzaion mugalarien

kezkaren zergatia, ez baitzen segurua ezta kontrabandistek ikusi zituztenik ere.

– Jo dezagun baietz, ohartu direla. Eta zer? Nola asmatu behar dute mugalariak zaretela? Eta bueltan jaisteko asmoa duzuela? –argudiatu zuen Santik.

Kontrabandista haiek salatariak izateko aukera, bestalde, zeharo ahula zen. Beste kontrabandista mota bat zen beraientzat oso arriskutsua, eta ez gaueko lanean mendia zapaltzera behartuak zeuden haiek. Droga kontrabandoan zebiltzanak, adibidez. Are gehiago Intxaurrondoko Guardia Zibilaren kuartelean buru zen Galindoren babesarekin bazebiltzan.

– Eta salatariak izatekotan, nekez izango dira beren buruak salatzeko adina motzak –jarraitu zuen Santik.

Gau hartan erorketarik balego, susmo guztiak haiengana zuzenduko liratekeelakoan zegoen. Eta horren jakinean, salaketarik egin aurretik bi aldiz pentsatuko omen zuten.

Arrazoibidean barna, tupustean duda-muda bat erne zen Santirengan, bere kuttunarekin lehenbailehen egon nahiak garrantzi handia izan baitzuen egina zuen hautuan. Maitasunak itsuturik, burkideak arriskura bultzatuko ote zituen? «Ez horixe!». Aurrera egiteko arrazoiak zeharo sendoak ziren bederen, eta erraz lasai zezakeen horretan bere kontzientzia.

Zalantza eta guzti, arrazoibideari eutsiz, Santik ederki azaldu zien berarentzat garrantzitsuena zen azken argudioa:

– Gainera, pasoa bertan behera uzteak ekar ditzakeen arazo eta arriskuak askoz ere handiagoak izan daitezke aurrera eginez topa ditzakegunak baino.

Azken arrazoi haren indarra zela-eta, inork ez zion kontrako aukera defendatzeari ekin. Aho batez erabaki zuten aurrera egitea. Hori bai, lehenik mugalariek mendian behera jaitsi, eta inguruari begirada sakona eman beharko zioten, badaezpada ere.

Eman zioten, bada, eta berri onekin itzuli ziren: ez zen inongo arrastorik ez abelburuena, ez kontrabandistena, eta guardia zibilen susmoa hartzeko moduko ezer ez zuten topatu. Bidea garbi zegoen itxuraz.

Hala izanik, mugalarien azken aholkuak entzun ondoren, mendian behera abiatu ziren. Haiek agindutako geldialdi bakarra egin zuten. Sasi-alarma bat besterik ez zen izan, eta berehala jarraitu zioten bideari. Ez zen aditzen ezta zakurren zaunka urrunen oihartzunik ere. Ordubete eskasean mugako arriskutik aldenduak ziren.

Santik sekulako lasaitua hartu zuen, burutik kendu ezinik baitzebilen zenbaterainokoa izan zitekeen bere erantzukizuna segada batean eroriko balira.

– A ze gogoa dudan Inesekin izateko!!

– Baita guk ere! –Anjelek keinu maltzurtxoa luzatu zion Aneri.

Aldi berean, bere neska-lagunaz, Oihanaz, oroitu zen. Elkarrekin errefuxiatu zirenez geroztik, maiz suertatzen zitzaien luzaz banaturik egon behar izatea. Frantziar Estatura bueltatu arte behintzat, ez zuten elkar ikusterik izango.

Anek, burkidearen keinua ikusirik, barretxoa egin zuen, baina une hartan bere barne-kezkak ez zion txantxari toki askorik uzten, espainiar Estatura ekintzak egitera zihoan lehen aldia baitzen.

Muga-pasoaren ostean, oso bide luzea zuten oraindik egiteke erakundeak finkatu helburua gauzatu arte. Lehen urrats hura erraz egin zuten mugalarien babesean. Eta ondorengo bide luzea? Handik aurrera zailtasun ugarik egingo baitzien seguruenik oztopo. Nolanahi ere, haiek gainditzeko behar adina kemen, esperientzia eta irudimen zutelakoan, itxaropentsu zekusaten etorkizuna.

# - II -

Inesek espainiar Estatuan alokaturiko apartamentura iristean Santik esan zion ia aurreneko gauza gezur bat izan zen. Bazekien muga-pasoa zer moduz joan zen galdetuko ziona, eta erantzuna prest zuen: «Primeran! Ez nuen uste trenez hain erraza izango zenik» erantzun zion alai, ondoren, hitz haiek ihes egin izan baliote bezala, berehala damu-keinu bat eginez.

Taldekideen artean erabakitako koartada trenarena zenez, balizko bidaldi hartako xehetasun garrantzitsuenak ikasiak zituzten. Atxilotzen bazituzten, torturapean koartadari eustea oso zaila izango zena jakinagatik, muga-paso faltsuarena sinesgarri egiteko modua landua zuten bederen, eta hainbat hobe Inesek gezurtxo hura sinetsiko balu.

Trenarena kantatu zuen lehen etakideari kostatu zitzaion, kostatu zitzaionez, torturatzaileak horretaz konbentzitzea, eta tortura latzenak justu egia esandakoan jasan zituen. Ez baitzioten sinetsi nahi muga hala igaro zuenik.

Orduko hartan, polizien ezagutzan ez zegoen halako muga-pasorik eta guztiz sinesgaitza egin zitzaien, baina azkenean onartu behar izan zuten ez zegoela kristaurik gezurrari eutsiz hainbesteko oinazeri aurre egingo zionik.

Geroztik, trenarena haien ezagutzan zegoen, eta koartada gisa osatzen erraza zen. Horregatik aukeratu zuten etakideek, eta horregatik saiatu zen Santi gezurtxo hura sinestarazten Inesi.

Handik aurrerakoa, biek elkarrengandik urrun emandako hilabete pare hartan amesturikoa izan zen: hain ziren elkarren gose, desio itzel hark gaina hartu ziola orori. Gero bai, gero kontatu zizkioten elkarri kontatu beharreko guztiak. Jakin-mina ase ezinik, luzaz jardun zuten berriketan goizeko ordu txikitan nekeak irabazi zituen arte.

Biharamunean ekarri zituen Santik apartamentura beste bi etakideak taldeko lehen bilera egitera. Inesek alokaturiko apartamentua baitzen talde-bilerak egiteko aukeraturikoa. Ezin bestela izan, segurtasun arrazoiengatik Santik eta Inesek ez baitzuten izango beste bien etxebizitzaren berri.

Aurreneko bilera haren ondorengo egunak helburuaz emanak zizkieten informazio urriak zuzenak zirela ziurtatzeko erabili zituzten. Hasteko, haren autoaren blindajeari buruzkoak: ekintza agian armak erabiliz gauzatu ahalko zuten esperantza izpitxoren bat bazuten, izan; autotzar hura ikusi bezain laster zapuztu zitzaizkien azken ilusio apurrak. Lehergailuz egitea beste erremediorik ez zuten izango.

Non, ordea? Argi zegoen helburuak erabili ohi zituen ibilbideetako gune egokiren batean egin beharko zutena. Hala bada, ia hilabete eskaini zioten ibilbide guztiak ez ezik ordutegiak ere ongi aztertzeari, igandero laurak Inesen apartamentuan bilduz ekintzaren gorabeherak eztabaidatzeko, eta asmo berberarekin elkartuak ziren igande hartan ere.

Bilera hasi aurretik eta denen artean prestaturiko bazkari ederra dastatu ondoren, mus partidatxo bat jokatzeari ekin zioten. Ohitura zaharrei atxikiz, harrikoa egitea galtzaileen bizkar geratu zen, eta etxe-

ko bikoteak galduz gero Santiri egokitzen zitzaionez lan hura, egun hartan berak egin behar izan zuen.

Sukaldekoa bukatu eta salara itzultzean, han ziren lagunak mahaiaren inguruan jesarrita eztabaidari ekiteko gertu. Halakoetan ohi zutenez, irratiaren soinua altu samar jarrita zegoen.

– Harrikoa egitea gustuko duzu, ala? –Ane zirikatzaile zebilen.

– Musean galtzea baino gogokoago bai behintzat –Inesek ere bere eztenkadatxoa bota zion.

– Ez dut esango galtzaile ona naizenik, baina horretan laurok berdintsu, ez?

– Horretan beharbada bai –Anjeli luzatu zion begirada Anek–. Ez, ordea, harrikoa egiteko orduan! Gure etxean ez da hemen bezala boluntariorik agertzen.

– Hasi gara berriro! –kexatu zen Anjel.

– Has gaitezen behingoz ekintzarekin –moztu zuen Santik.

Ia hilabetez helburuaren atzetik izan ostean, hark erabiltzen zituen ibilbideak eta orduak gutxi gora-behera finkatuak zituzten. Horrez gain, erakundeak bidalia zien jada lehergaia, eta hura urrundik eztanda eginarazteko aparatuak. Gainerako guztia erosi ahal zuten. Prest zeuden, beraz.

– Badakizue lehergailuei ez diedala batere estimurik, baina beste irtenbiderik ez badago... –Santik airean utzi zuen esaldia.

– Lasai, ni lehergailuekin ongi moldatzen naiz-eta –hura zen, izan, Anjelen espezialitatea.

Ongi gogoan zeukaten Francoren oinordeko Carrero Blanco almirantearen aurkako ekintza burutzeko etakideek karga lur azpian jarria zutena. Baita, haatik, hura mamituriko garaietan poliziei ez zitzaiela burutik pasatu ere egiten erakundea antzeko zerbait burutzeko gai zenik, eta hogeita bat urteren buruan ikaragarri areagotu zituztela segurtasun-neurriak. Erokeria zatekeen, beraz, hala burutzen saiatzea. Bonba-autoaren aukera baizik ez zitzaien geratzen.

– Dena prestatzeko lokalen bat beharko dugu –ohartarazi zien Anek.

– Garajeak alokatzea oso arriskutsua da –Santik berehala eman zion erantzuna. Nahiko zakar eman ere.

– Kale gorrian prestatzea ere ez da arrisku makala! –kexatu zen Anjel.

– Nik aloka dezaket –proposatu zuen Inesek.

– Ezta pentsatu ere –haserretu zen Santi–. Txakurrek oso zorrotz kontrolatzen dituzte lokalak: badakite beharrezko ditugula, eta gainera apartamentuekin baino errazagoa zaie jarraipena egitea.

– Oraingoz alokatuko ez badugu ere, aukerak aztertu behintzat aztertu beharko genituzke –Anek oso argi zekusan garajearen beharra.

– Lokal ditxosozko horiek direla-eta, erorketa gehiegi ezagutua naiz. Ezetz biribila da nirea! –Santi sutan jartzen zenean ederki nabaritzen zitzaion, eta ez zuen askorik falta.

–Beno, beno, ez gaitezen horregatik haserretu. Moldatuko gara kalean. Bai, Anjel?

– Konforme esan beharko.

Nahiz eta taldean arduradun izendaturik ez zegoen, denek hartzen zuten oso kontuan Santiren eskarmentu handia. Erakundean urte gehien zeramana izateaz gain, talde ilegaletan behin baino gehiagotan ibilia ere bazenez, denak fidatzen ziren haren iritziez. Ez zuten batere argi, baina, bonba-autoa kale gorrian egitea garajea alokatzea bezain arriskutsua ez ote zen.

– Ekintza egiteko tokiarena ahalik ongien azaldu beharko diguzu, Anjel –ohartarazi zion Santik eztabaida hura behingoz atzean uzteko asmoz.

Halako ekintza-motetan bera zen adituena, eta gustura eman zituen azalpen guztiak, lehenik eta behin azpimarratuz hiri handietan oso leku gutxik izan ohi dituztela bonba-autoaz baliatzeko derrigorrezkoak zitzaizkien ezaugarriak.

Hasteko, hautaturiko tokian helburuak nahitaez bonba-autoaren ondo-ondotik igarotzera behartua izan behar omen zuen. Hori, autoa ongi aparkaturik uztekotan bederen, errail bakarreko karriketan lor zezaketen; beste inon ez.

Lehen baldintza hura egokiro betetzen zuten gehientsuenak kale estuak ziren, ordea, eta bigarren baldintza bat bete beharrak ia beti balio gabe uzten zituen halako tokiak. Espazio zabala beharrezko baitzitzaien, helburua bonba-autoaren pare-parean pasatzen zen une

berean karga leherraraziko zuenak zauririk jaso ez zezan, eta karrika estu batean halako tokirik topatzea ia beti ezinezkoa zen.

– Gogoratu, perpendikularrean nahiko urrun kokaturik egoteko aukera eman beharko digula lekuak.

– Zenbateraino urrun? –galdegin zion Santik.

– Ahalik eta urrunen, noski.

– Baina zenbat metrotara gutxienez?

– Alde handia dago karga norbera dagoen aldera zuzenduta ezarri ala beste aldera.

Ihes egin ahalko zuten ziurtasun osoa izatekotan, distantzia hori beti ahalik eta luzeena izatea komeni zitzaien. Gehienetan, haatik, nahi baino hurbilagotik egitea beste irtenbiderik ez zuten izaten.

Karga aktibatuko zuen lagunak eztandaren ondorioz odolezko zauriak jasoko balitu, ospa egitea oso gaitz bihurtuko zitzaiokeen, eta posibilitate hori oso gogoan hartu beharra zuten, etakide bati baino gehiagori gertatu baitzitzaion halakorik.

Anjelek ezin zien inolaz ere distantzia haren formularik eman. Ez zegoen halakorik. Norberak kalkulatu behar zuen zenbateraino arriska zezakeen.

– Eta albotik pasa daitekeen jendearena nola neurtu behar da?

Isilune bat egin zen, Santik puntu zailena ukitu baitzuen. Ekintza garbiak egitearen garrantzi handiaz zeharo jabetuta bazeuden ere, hiri handietan ez baitzen batere erraza halakorik lortzea.

– Ahalik eta ekintza garbiena egiten saiatu. Hori da eman daitekeen formula bakarra.

Gaia zinez korapilatsua zen. Karga aktibatzeko seinale-igorlearen pultsadoreari sakatuko zionak ingurumaria lipar batean aztertu beharko zuen eta, eztandaren ondorioak neurtzea zeharo zaila izanik, erabakia bere bizkar hartu.

Anjelek azaldu zienez, baziren leku ugari beste baldintza guztien arabera halako ekintzetarako egokiak, baina inguruan mugitzen zen jendearengatik erabili ezinezkoak. Beste batzuetan, une egokiak eta zalantzazkoak tartekatzen zirenez, zortearen menpe egon behar. Azkenik, garbitasuna ziurtatuta egoten zen toki gutxi batzuk ere ba omen ziren.

Etakideek beti azken haien atzetik ibili arren, gehienetan tartekoekin konformatu beste erremediorik ez zuten izaten.

– Gainera, etsaiak badaki erasoak gauzatu ahal izateko zer-nolako baldintzak bete behar dituzten tokiek, eta aspalditik hartuak ditu ekintzen aukerak saihesteko neurri asko.

Anjelen azalpen mamitsu haiei esker denek ulertu zuten zeharo zaila izango zela bonba-autoa ongi aparkatuta uzteko aukera emango zien ahulguneren bat topatzea. Dena den, zailtasun guztien gainetik to-

patuko zutelakoan, hurrengo egunetarako betebeharrak banatzeari ekin zioten.

Dagoeneko zehaztuak zeuzkaten gutxi gora-behera helburuak erabili ohi zituen ibilbide eta ordutegiak. Haiek ahalik hobekien zehazteak zuen erabateko lehentasuna. Lortu ahala, ibilbide guztiak behin eta berriro egin beharko zituzten, gora eta behera, ahulguneren baten bila. Han bazen, bai, laurentzat nahi adina lan.

Hura dena ongi lotu ostean, Santik berak bakarrik ezagutzen zuen militante legal bati buruz hitz egin zien. Taldeari laguntza emateko prest zegoen lagun hark Josu zuen izena, burkideei Eba izeneko neska zela esan bazien ere, eta lehenengo hitzorduan segurtasun-neurri guztiak azaldu zizkion. Besteak beste, atxilotuko balute zer "kanta" zezakeen, eta zer gorde behar zuen kosta ahala kosta.

Aurrerantzean biltzeko erabiliko zuten taberna eta bertara sartu aurretik Josuk egin beharko zuen segurtasun-ibilbidea ere erakutsi zizkion.

– Legalak euskal prentsako zatiak lor ditzake –aipatu zien Santik halako batean.

– Hori ez al da arriskutsua? –harritu zen Anjel.

– Ebak esan dit inongo arazorik gabe eskuratuko dituela.

– Norena izan da ideia? –Aneren ustez afera hura ez zegoen batere argi.

– Zer galdera mota da hori?! –haserretu zen Santi.

Ustekabean egoera deseroso batean harrapatu dutenaren haserrea izan zen hura, Anek pare-parean jo baitzuen: Santi bera izan zen legalari kazeta-zatiena aipatu ziona, eta ez alderantziz.

Apartamentuan ez zegoen inolako apaingarri edo oroigarri euskaldunik, haien artean gazteleraz jardun behar izaten zuten beti badaezpada ere, irrati eta telebista arrotzetakoak irentsi beharrean zeuden... Aire faltaz ez itotzeko arnasbide bakarra zuten, euskal abeslarien kaseteak. Haiei ere uko egitea gehiegizkoa iruditu zitzaien, eta maiz entzuten zituzten. Bolumena oso tentuz egokituz, hori bai.

Ulergarria zen, beraz, segurtasun-neurriekin hain zorrotza zen Santik kasu hartan arrisku hura hartu izana, merezi zuela iruditu baitzitzaion. Eta Josuk kazeta-zatiak inongo arazorik gabe eskuratuko zituela esan zionez...

– Santi, normala da legalak erraz lortuko dituela esatea –Anjel, eten txiki bat egin ostean, zuzenean joan zen gakora–. Arriskua neurtzeko gai ote da, ordea?

Hura zen, izan ere, Santik argitu gabe utzi zuena. Euskal Herriko prentsa lehenbailehen irakurri-nahi haren eraginez, ez zion galdetu nola eskuratu behar zituen eta, beharbada, Josuk, militante berri gehienen moduan eskakizunari baiezkoa emateko irrika biziz, ez zuen haiek lortzeak ekar zezakeen arriskua egoki hausnartu.

– Ebak egunkari-zatiak ekartzearen aurka bazaudete, esan eta kito!! –burkideen galdera haiek zeharo haserretu zuten.

– Nik diodan bakarra da legalari ongi azaldu behar zaizkiola arrisku horiek, eta den-dena aztertu ondoren biok aurrera egitea erabakitzen baduzue, aurrera! –Ane mindu egin zen Santiren jarrera itxia ikusita.

– Guk ere gustura irakurriko ditugu, Santi, baina gai horretan arin samar jokatu duzula onartu beharko zenuke; ez al duzu hala uste? –Anjeli ere ez zitzaion batere gustatu haren jarrera.

– Beno, tira, konponduko dut hau Ebarekin.

Taldekideen arrazoien funtsaz konturatu eta atzera egin zuen Santik. Gaiaz aldatzea izan zen bere irtenbidea: Bilboko jaietan urtebete lehenago ertzain bat jipoitu omen zuten hamazazpi herritarren kontrako epaiketa jarri zuen mahai gainean.

Gai hari buruz aritu ziren Anek eta Anjelek, afaltzen geratzea ezinezko zitzaienez, alde egin behar izan zuten arte. Etxeko bikotea bakarrik geratu bezain laster Ines samur-samur zuzendu zitzaion Santiri:

– Jaten eman al diezu Plixti eta Plaxtari?

Santi armairu gainean zegoen arrainontzi biribil txikira hurbildu zen. Inesek egindako oparia zuen, eta ordurako ederki ohartua zen zinez asmatu zuela, bertako bi arraintxoak hain lasai igeri ikustean bera ere lasaitu egiten baitzen.

– Oraintxe emango diet –arraintxoen elikagaia hartu eta apur bat bota zien. Biziki maite zuen ikustea nola irensten zuten dena berehala.

– Gaur ez zara oso fin ibili –esan zion Inesek maitekiro.

– Badakit ez naizela batere ongi portatu –onartu zuen Santik–. Urduri nabil, eta errazegi ateratzen naiz nire onetik.

Erantzunak biziki poztu zuen Ines. Ordu batzuk lehenagoko ipurterre hark ez zuen zerikusirik berak hainbeste maite zuen pertsona atseginarekin. Estuago atxiki zitzaion haren besarteari.

# - III -

Kanpoan hotz egiten zuen, eta ez zegoen kafetegiko beira haietako lurrin-geruzaz bestaldean zegokeen ezer ikusterik. Ines eta Santi garagardo bana edaten ari ziren, mahai batean aurrez aurre. Mahaitik paperezko ezpain-zapi mordoxka hartuta, kristaleko gandua kentzeari ekin zioten, patxada osoz.

Gaua eroria zen ordurako, eta Gabon bezpera izanik, urte sasoi horretan ipini ohi diren izar eta bonbillatxoen argiak ikusten ziren han eta hemen.

Toki aproposa hautatu zuelakoan, Santi gustura zegoen bere buruarekin. Ordu hartan beti egoten zen lekua kanpora begiratzeko egokiak ziren mahaietan, eta kalean ez zen ia jenderik ibiltzen. Horrek lana polito errazten zion, lehenengo solairu hartatik oso ongi ikusten baitzen Josuk egin beharreko segurtasun-ibilbidea, eta horrenbestez nahiko erraz ziurtatu ahalko zuen haren atzetik poliziarik ez zetorrela.

Legala arratsaldeko zazpi eta erdietan agertzekoa zenez, zazpietatik aurrera eskanerrari adi egoteko eskatu zien Santik beste bi etakideei. Eta ezer arrarorik susmatuz gero kafetegira deitzeko. Neurrien kontu harekin pasatzen ari zela iruditu zitzaien arren, hura bederen hartzen erraza zela-eta, ez zuten bestelako aipamenik egin. Hala ere, Santiren zorroztasunaz nazkatzen hasiak ziren.

– Minutu pare bat besterik ez da falta –Inesek begiratu azkar bat egin zion ordulariari.

– Abisatuko dizut azaltzen denean, bai?

– Polita al da? –galdetu zion Inesek tupustean.

– Nola? –harritu zen Santi, Josu baitzuen buruan.

– Ebaz ari natzaizu.

– A! –burura etorri zitzaion aurrenekoa bota zuen–. Ez zu bezain ederra, jakina.

Lasai eserita itxaroteko arazorik ez bazuten ere, minutuak aurrera joan ahala Santi urduri jartzen hasi zen. Bost minutu baino gehiagoko edozein atzerapen guztiz ulertezina egiten zitzaion, eta bost ez ezik hamar ere joan zirenean sutan jartzekotan zegoen.

– Zortziak hogei gutxi pasatuta eta arrastorik ez!

– Eskatuko al dugu beste garagardo bana?

– Ez, ez, azaldu arte adi egon beharra dugu.

Legalari eskaturiko egunkari-zatiez oroitu zen: «Behin egingo zerbait fundamentu eskasez eta, hara! Josuk ez beza horren harira inongo arazorik izan behintzat!» pentsatu zuen, mutu.

Erorketa gehienak huskeriengatik izaten zirela etorri zitzaion gogora: «Horixe besterik ez dugu behar; kontrolen batean kazeta-zatiak topatu eta susmagarri egin zaielako atxilotu izana».

Itzelezko erraztasuna zuen besterik gabe sekulako pelikulak egiteko: «Izenez ezagutzen ez banau ere, argazkien bidez identifika nazake, eta orduan...».

Halako batean, artean urrun zetorren gizonezko batek uxatu zizkion burutazio gaizto haiek guztiak. Gizonezkoa hurbildu ahala ziurtasun osoa izan zuen. Bai, Josu zen.

– Hor da –ohartarazi zion Inesi–. Bazen ordua!

– Ordu laurdeneko atzerapena ez da makala, ez.

– Kristorenak entzun beharko ditu!

– Zabal hartu, otoi. Neurtu zure haserrea, bai?

Azken hitz haiek erdizka baino ez zituen entzun Santik, kristalaz bestaldean gertatzen ari zenari zeharo adi baitzegoen. Josuk eskuan zekarren zorro marroi hartan izango ziren seguruenik kazeta-zatiak.

Santik aurreneko hitzordu hartan aipatua zion erakusleihoaren aurrean pare bat minutuz begira egon, eta ezkerreko kalea hartu zuen.

Dena oso normal joan zen; normalegi ia, horrelakoetan ohikoa baitzen xehetasun susmagarri txikiren bat igartzea inguruan. Hori bai, gehienetan berehala egiten zitzaien begi-bistako halako susmoak norberaren uste ustelak besterik ez zirela, eta zaindu beharreko burkideak ez zuela inortxo ere segika.

Egun hartan ez zen halako sasi-alarmarik izan. Garbi baino garbiago zetorren legala. Banatzeko ordua zuten. Garagardoak lehenagotik ordainduak zituzten, eta zuzenean irten ziren kalera. Legala inguruko taberna batean izango zuen zain Santik. Harantz luzatu zituen pausoak.

Taberna arrunta zen, eta Josuk ere halakoxe itxura zuen, han, bazterreko mahai batean eserita.

– Zer moduz? –alboan jesarri zitzaion Santi.

– Nahiko ongi. Eta zu? –atzerapenaz jabetuta, uzkur samar hitz egin zion legalak.

– Gogaituta –ahotsa apaldu zuen–, zure zain egoteaz.

– Barkatu, Pako –hala esan zion Santik izena zuela legalari–. Trafikoaren errua izan da.

Santik gogoan hartu zuen Josuk esandakoa. Beharbada bai, aurreratuta etortzea izan zen legalaren asmoa, eta trafikoa sekulako oztopo bilakatu zitzaion. Bazekien, haatik, dezente lehenago iristeko plana eginez gero, nekez gertatzen zela halako atzerapenarekin ailegatzea.

Egun hartan ez bezala, askotan kale gorrian itxaron behar izaten zuten, eta halakoetan atzerapenak beti izaten ziren arazo-iturri nabarmena. Hura ongi azpimarratu ondoren, azken aldian gaizki loturiko gaiari heldu zion.

– Ekarri al dituzu egunkari-zatiak?

– Bai, noski –Josuren begia nabarmen alaitu zen–. Zorroan ditut.

– Eta... –Santi hitzak bilatzen ibili zen unetxo batez– nola lortzen dituzu, ba, euskal kazetak?

– Oso erraz –gustura asko eman zizkion azalpenak–. Maiz joaten naiz Euskal Herrira gurasoen etxera. Han gordetzen dizkidate espresuki neuk nahi ditudan kazeta guztiak.

Zeharo lasaitu zen Santi, ez baitzuen hark ezer arraroren kutsurik. Argi zegoen militante izan aurretik egin ohi zuen berbera egiten zuela legalak. Ez zegoen han arriskutsutik ezer, eta kazeta-zatiak eskuratzearena bertan behera uzteko moduko arrazoirik ez zegoela iritzi zion.

Egunkari-zati haiek leiho zabalarena egingo zuten, giro hartan gela itxi batean inora irten ezinik balego bezala sentitzen baitzen askotan, klaustrofobiak jota dagoenaren pare. Haiek irakurtzean leihoan barna Euskal Herriko airea sartzen sentituko zuen, bizikor eta atsegin, itolarri hura baretuz.

– Emango al dugu itzuli txiki bat? –proposatu zion Josuri.

– Hotz egiten du kanpoan.

– Ba nik aire berria behar dut. Hemengoa oso kutsatuta dago.

Ez zen haize freskoa Santik behar zuen bakarra. Lasai hitz egiteko toki hobearen falta ere bazuen, hango kutsadura ez baitzen zigarretek sortua soilik. Taberna hura nahiko egokia zen txoko batean be-

larri zorrotzen menetik urrun samar egoteko, baina adi ibili beharra izaten zuten beti. Eta inork ezer arrarorik entzun ez zezan saiatu behar hartan dezente nekatzen ziren.

Kale gorriak ere bazituen, ordea, bere alde txarrak. Bi gizonezko izan ordez, neska-mutilak izanda errazago molda zitezkeela otu zitzaion orduan. Irtenbide hura sakonki aztertuko zuela agindu zion bere buruari, legalaz Ines edo Ane arduratuko balira hobe zatekeela pentsatzen zuen bitartean. Bai, aztertu beharra zeukan hitzordu hura taldeko emakumezkoren baten eskuetan uztea komeni ote zen: «Josu beste inork ez ezagutzea hobe, baina...».

Atzerapenagatik izandako haserrealdia zeharo baretuta zuen orduko. Ordaindu eta kalera irten ziren biak.

– Beste lekuren bat bilatu beharko dut hitzorduetarako.

– Bai, gaur jende gehiegitxo zegoen.

– Hurrengorako pentsatuko dut non egin.

Bere artean, Santi tokiz aldatzea ez ezik pertsonaz aldatzea ere mamitzen ari zen jadanik: «Inesi hitz egin behar diot. Bai, bera izan daiteke egokiena. Hurrengoan biok batera etorri, eta aurrerantzean bera ardura dadila».

Karrikan behera zihoazen bitartean bere zereginez hitz egin zion Josuri. Ordura artekoan ez zen haren laguntza zuzenaren beharra izan taldean eta, helburua ezagutu beharrik ez zuelakoan, beste lan batzuk agindu zizkion. Ez ziren garrantzizko gauzak, arriskutan sar-

tu gabe bete zitzakeen zereginak baizik, benetako larrialdietarako erre gabe gorde nahi baitzuten legala.

Hura ongi lotu zutenerako erlojuaren orratz txikiak bederatzietako muga igaroa zuen. Iritsia zen Josuri adio esateko tenorea.

– Banatu egin beharko dugu.

– Dagoeneko? –Josuk begiradatxo bat luzatu zion ordulariari–. Ez nuen uste horren berandu zenik.

– Hurrengora arte. Eta kontu egin!

– Lasai. Ez naiz inoiz gehiago atzerapenarekin helduko.

Santiren «kontu egin!» hura ez zen gai hari loturik joan. Haatik, gustura entzun zuen justifikazioa.

Ines, bitartean, aldez aurretik elkar hartu bezala, bederatziak eta laurdenak baino lehentxeago autobus-geltoki jakin batean kokatu zen Santiren segurtasuna egiteko asmoz.

Laster ikusi zuen Santi kaleaz bestaldean lehendik finkatu ibilbidean aurrera, berarengana etorri beharrean. Telefono kabina batean sartu eta minutu pare batez deitzen egotearen plantak eginez, Santik aukera zabala eman zion, zernahi arraroa gertatuz gero, hari errepara ziezaion. Ekarritako bidean atzera egin zuen ondoren.

Garbi zetorrela ikusirik, Ines atzetik joan zitzaion. Handik lasterrera elkarrekin ziren berriro, eta etxeko bidea elkarri gerritik oraturik egin ondoren bertara iristean Santik legalari buruz hitz egin zion.

Ines bat etorri zen aurrerantzean hitzorduetara bera joateko proposamenarekin, eta gaia konpondu osteko egoera aproposa iruditu zitzaion bere ustez gaizki lotua zuten beste gai baten korapiloa askatzeko: Santik hain begi txarrez zekusan lokal egoki baten alokatzearena.

– Ez ote dugu hobe garajearena begiratzea? –proposatu zion.

– Zertara dator horrekin duzun tema? –nahiz eta galdera tonu gozoz egin zuen, nolabaiteko mesfidantza zerion.

Inesek argudio zehatzen bidez ezabatu zuen Santiren uzkurtasuna. Gauza bat zen momentuz lokalik ez hartzea, eta beste bat, oso bestelakoa, zer-nolako aukerak egon zitezkeen ez aztertzea, badaezpada ere.

Une hartan garajerik gabe molda zitezkeen. Ezin jakin, ordea, zer nolako arazoei egin beharko zieten aurre handik aurrera. Hobe zuten, beraz, lokalaren aukera jorratzea. Hori bai, balizko arazo hura konpontzeko ahaleginean egiazkoak alboratu gabe.

# - IV -

Helburuak erabiltzen zituen ibilbideak beste bi astez goitik behera gogotik miatu ostean, berdin jarraitzen zuten: han ez zen inongo ahulgunerik. Azterturiko toki guztiek zuten akats edo oztopo nabarmenen bat: edo helburua karga koka zezaketen lekutik urrunegi igarotzen zela; edo egoki aktibatzeko inongo aukerarik ematen ez zuela; edo inguruan etengabe jende gehiegi zebilela...

Lekuren bati begia bota zioten bakoitzean, errealitate gordinak zapuztu egin zien itxaropena handik lasterrera. Baldintzetako bat edo beste betetzen zuten leku franko zegoen, baina denak batera beteko zituenik ezin aurkitu.

Hala ere, etsi gabe, eutsi egin zioten egokieraren bat topa zezaketen esperantzari, eta ez zuten beraz baztertu ongi aparkatuta egitearena, baina galarazitako guneren batean utzita egiteko aukerak ere aztertzen hasiak ziren, eta dagoeneko begia botata zioten aukera bati edo besteri.

Ordu eta toki jakin batzuetan gaizki aparkaturiko autoak berehala egiten ziren susmagarri, eta poliziek halako xehetasunei sekulako arreta jartzen zietela jakinda, autoa galarazitako gunean aparkatuta utzi ahalko zuten denbora neurtzea, leku bakoitzaren arabera, ez zen erraza izango.

Nola erabaki, orduan, zenbat denbora utz zezaketen? Nola moldatu?... Galdera haiei eta beste zenbaitzuei erantzuna emate asmoz hamaika buelta eman zioten gaiari.

– Nola lortu bonba-autoa helburua azaldu baino pare bat minutu lehenago uztea? –Santiren galdera zuzenean joan zen mamira.

– Autoa aparkatzeaz arduratuko denari helburua noiz datorren abisatuz, noski.

Anjelek frantziar Estatuan erositako walkie-talkie parea zuen buruan. Haietaz balia zitezkeen... helburuak erabiltzen zituen lau ibilbideetako batean horretarako ahalbidea emango zuen toki egokiren bat aurkituz gero. Eta halakorik topatzea ez zen erraza izango.

Gai hura zintzilik utzi behar izan bazuten ere, denbora tarte aproposarena egun hartan bertan lotu zuten: helburua oso ordutegi aldakorretan mugitzen baitzen... goizeko bidaian izan ezik. Goizean, zortzietatik bederatziak laurden gutxitarako tartean ekiten zion bideari. Ordu horretan egitea erabaki zuten, beraz, eta denbora tarte hori ahalik eta zorrotzen aztertzen emango zituzten gehienbat ondorengo egunak.

Gau hartan alaitasuna zeriela igartzen zen, han laurek elkarrekin emango zuten lehena izatekoa baitzen. Urtezahar egunari zegokionez afari eder bat prestatu zuten, eta baita hura jaten poliki gozatu ere. Turroia dastatzen ari zirela, GAL auzia ekarri zuten hizpidera:

Bahitu ondoren desagerrarazitako Joxi Zabala eta Joxean Lasa izan ziren lehen biktimak, 1983ko urrian, eta 1987 bitartean hogeita zazpi pertsonaren hilketa hartu zuen bere gain talde hark. Gehienak, euskal iheslari politikoak, baina tartean baita haiekin zerikusirik ez zuten hamar lagun ere. Ia denak frantziar herritarrak.

– Gure burua defendatzeko pipa aldean eramatea ez zen merke ateratzen, gainera –urte latz haietako oroitzapenak oldarrean etorri zitzaizkion Santiri.

– Zergatik? –harritu zen Ane.

– Bagenekien aldean armaren bat generamala harrapatuz gero berehala deportatuko gintuztena.

– Baina hobe hori lur azpian bukatzea baino, ez?

– Orduz geroztik deportaturik segitzen dutenei galdetu beharko diezu hori.

GAL auziaren inguruan azken egunetan jakiten ari zen guztiak jatorri ezaguna zuen, Amedo komisario ordearen eta bere menpeko Dominguez inspektorearen espetxeratzea 1988an. Frantziar epaile batek aurkituriko froga ukaezinengatik espetxeratu ere. Mertzenario batzuk kontratatzean, bi poliziek froga nabarmenegiak utzi baitzituzten.

Bada, urte batzuen buruan, kartzelaz nazka-nazka eginda zeudelako-edo, gerra zikinari buruz zekitenaren zati bat azaltzeari ekin zioten, eta Segundo Marey frantziar herritarraren bahiketa aldarrikatzeko erabili zuten zirriborroa atera zutenean, erraz frogatu ahal izan zen bukaera Sancristobalek, Bizkaiko gobernadore zibila izandakoak, eskuz idatzia zela. Ondoren, Danborenea, PSOEko buruzagi ohia, azaldu zen tartean eta Barne-ministerioko bigarren buru izandako Rafael Veraren txanda etorri zen atzetik.

Etakideek hasiera-hasieratik jakin zuten hilketa haien atzean nor zegoen, nork mugitzen zituen hariak, baina bazegoen zerbait ordura arte burutik pasatu ere egin ez zitzaiena. Alegia, hilketak zuzen-zuzenean antolatu zituztenak PSOEko politikariak izan zirela. Eta are gutxiago azken aldian argi eta garbi agertzen ari zen moduan jardun zutenik, hots, maila operatiboan, aurren-aurreneko lerroan.

– Guri zeharo surrealista egiten zaigu HBko buruzagi bat borroka armatua gidatzen irudikatzea, eta eskema berbera aplikatu zenioten etsaiari, ezta? –galdegin zion Anek.

– Bai, geure logikaz aztertu genuen ordukoa, kontuan hartu gabe jendilaje horren logikak gurearekin zerikusirik ez duela –onartu zuen Santik.

Hamabiak gainean zituztelarik, xanpain botila bat zabaldu zuten. Topa eginez egingo zioten ongi etorria urte berriari, eta unea laurentzat oso berezia izango zela jakinik, Anjelek aldez aurretik bertso bat atondu zuen. Baita kantatu ere, besteen arreta eskatu ondoren, *"Zuek horrela ikusi eta"* doinua erabiliz:

Bihotz bihotzez "Urte berri on!"
desiratuaz batera,
itxaropentsu natorkizue
lagunok hau esatera:
ahulguneen bila gabiltza
ezin aurkituz bat bera,
baina saiatzen bagera,
oztopoak gora behera,
ekintza baietz atera!

Goazen, beraz, barnean dugun
hoberena ematera,
Euskal Herria hurbildu dadin
gurekin Libertatera.

– Ez da txarra izan. Ahotsa kaskar samarra, baina bertsoa balekoa.

– Bertsolari txapelketara aurkezten ez banaiz, zergatik dela uste duzue, ba? Ahotsagatik, lagunok, ahotsagatik!

Hamabi kanpai-hotsetako lehena orduantxe aditu zuten.

– Gure Herria lehenbailehen aske izan dadin! –ohi baino askoz indartsuago bota zuen Anek, telebistatik aditzen ziren oihu ozenek eta kaleko bat-bateko harrabotsak horretarako aukera ematen ziotela baliatuz.

– Hala bedi! –oihu egin zuten laurek batera, are ozenago, topa eginez.

## - V -

Egun txepeletan txepelenak larunbatak eta igandeak izaten zituztenez, normalean bietako batean elkartzen ziren apartamentuan ekintzaren gorabeherak aztertu asmoz, eta halaxe bilduta zeuden laurak igande hartan ere.

Urtarrilaren 15 hari, ordea, beste zerbaitek eman zion bizitasuna. Ez zen ekintza bat izan. Ezta erorketa ere. Bi berri mota haiei egiten zieten jaramon handiena, baina ordukoan politikari biren adierazpenek merezi izan zuten haien arreta guztia. Joseba Egibarrek eta Mario Onaindiak esandakoa interesgarria iruditu zitzaien behingoz, euskal preso politikoen sakabanaketaren aurka zeudela esan berri baitzuten.

Bazekiten kartzela ezagutzeko aukera oso zabala zutena, eta gogoz ekin zioten gaia jorratzeari, entzuten ari ziren Anje Duhalderen kasetearen ordez, Hertzainak taldearen beste bat jarriz. Bertan zegoen beraien "564" abesti hunkigarria, eta Inesi zeharo aproposa iruditu zitzaion gaiari ekiteko:

> Hotz amaigabe bat baino latzago
> ta urteak egun baino gehio
> 564 ohe huts
> samina zabaltzen ...

Hasi bezain pronto etorri zen hizpidera Santik bi gose greba luze eginak zituela, 1981ean atxilotu eta bi urtez Puertoko espetxean eduki zutenean.

– Gogorra izan al zen? –galdetu zion Anek.

– Tira, hogeita bi urterekin eta borrokarako nuen grinarekin ez zitzaidan zaila egin.

Santik gose greba haietaz hitz egin zien. Hunkiturik hitz egin ere, Puerton hain talde polita bildu zirenez, baten bat beti egoten baitzen aldarte oneko: irri, txantxa eta zirikaden artean elkarri laguntza ezin hobea ematen ahal zioten aldi oro.

Gaiaren harira ezinbestekoa izan zen halako batean GALekoen gorabeherak etortzea hizpidera:

– Kartzela okerreko eztarritik joan zaie Amedo eta konpainiari –Santi izugarri gozatzen ari zen istorio haiekin.

– Hori da, hori, kantatzea! –bota zuen Anek.

– Ea espetxeratu berri horiek ere kantu txapelketan parte hartzera animatzen diren –Anjelek eskuak bata bestearen kontra igurtzi zituen asetasunez gainezka.

– Nahiago nuke! –Inesi barne-barnetik irten zitzaion.

– Askaldu ere noizbait egin beharko dugu, ez? –bostetarantz zihoan erlojua, eta ordu horretan ingelesei tea hartzea bururatzen omen zaien era berean, Santiri txurro-txokolatearen apeta egiten zitzaion.

– Gose, ala? –galdegin zion Anek, zirikatzaile.

– Gosea? Zer den ere ez daki-eta! –Inesek harrituarena egin zuen–. Apetitua bai itzela!

– Zein arduratuko da txurroez?

– Santi sekulako espezialista egina daukat.

Ordurako txurroak egiteko tresnak erosiak zituzten, eta edozein aukera baliatzen zuten inbertsioari etekina ateratzeko. Gozozale taldea, laurok osatzen zutena.

Txantxetan, izen horixe ipini zioten laurek osatzen zuten taldeari, eta askotan barre batzuk egin alde emandako ezizenak betirako geratzen zirenez, ez zegoen batere argi handik aurrera taldearen izena ez ote zen benetan *Gozozale* izango.

Txurro-txokolatea prestatu zuten, beraz, eta umore onean askaldu ostean ekintzari heldu zioten, lehen-lehenik hura gauzatzeko beharrezkoa zen leku egokiaren gaia jorratuz.

Bonba-autoa ongi aparkatuta egitearena baztertuz, debekaturiko toki egokien atzetik ibiliak ziren buru-belarri. Baita aurkitu ere. Bi besterik ez, ordea.

– Ez nuen uste izango gaizki aparkatuta egoteko horren aukera urria egongo zenik –harrituta zegoen Santi.

– Hiri handietan dirudiena baino zailagoa izaten da toki aproposak topatzea –Anjelek eskarmentu handiagoa zuen arlo hartan.

– Hurrengo batean mendian ibiltzekoa den talde batean sartuko naiz! –Santik txantxetan bota zuen, baina ezin esan aukera hura erakargarria egiten ez zitzaionik.

Bi aukera haien artean bat hautatzeko orduan zalantza ugari izan zuten. Bertatik pasatzen zen jende kopuruari zegokionez, adibidez, ekintza garbia egiteko nahiko aproposak ziruditen biek, inguruan ez baitzen jende askorik ibiltzen. Hori bai, bietan beharko zuten zorte apurtxo bat.

Beste baldintzei zegokionez, aurreneko lekua oso egokia bazen ere, ekintza oztopa zezaketen autobusak pasatzen ziren bertatik maiz. Helburua eta autobusen bat aldi berean agertuz gero, ekintza saioa bertan behera utzi beharko zuten, horrek zekarren arriskuarekin.

– Autobusa parean suertatzeko aukerak ahulak dira –Anjelek toki hura zuen gogokoen, bata eta bestearen artean alde handirik ez bazekusan ere.

– Ez al dituzu ezagutzen Murphyren legeak? –galdegin zion Santik.

– Estatistikaz fidatzen naiz ni gehiago.

Anjel lege eta lege-ondo haiek edozein aitzakiaz aipatzen zituzten Txomin-jakintsu oroz aspertuta zegoen arren, barkatu egin zion aipamenaren pedantekeria.

– Ba, nire esperientziak dio estatistika famatu horrek gehiegitan egiten duela huts ekintza burutzeko orduan –Santi berean egoskortu zen.

Bigarren lekuan burutzekotan bonba-autoa gertuagotik eztanda eginarazi beharko zutenez, beste arrisku bati egin beharko zioten aurre. Karga leherrarazteko ardura hartuko zuenari zauriak egingo balizkio, nekez libratuko baitzen behingoan atxilotua izatetik. Eta norbait eroriz gero, bazekiten zer ondorio ekarri ohi zuen horrek: taldea pikutara.

Nolanahi ere, toki hartan ez zegoen beste eragozpenik, eta horregatik tematu zen Santi hain sutsu bertan egin zezaten.

– Murphyren lege horiek bakarrik autobusei buruzkoan balio dute, ala? –bota zuen Anek.

– Beno, beno, utzi tipo hori bakean, eta erabaki dezagun behingoz –Inesek ere alergia zion Murphyri.

– Beste kontu horiek alde batera utzita, ni zain egoteko aukera hoberena emango digunaren alde –proposatu zuen Anjelek.

Ordurako ongi erabakia zuten nola moldatuko ziren: helburua hautaturiko lekutik pasatuko zela baietsi eta abisua emateko ardura Inesi egokitu zitzaion. Beste hirurek, harik eta mezua jaso arte, hautaturiko lekutik hurbil egon beharko zuten. Bada, itxaroten tarte luzetxoa eman beharrean izan zitezkeenez, garrantzi sakoneko gaia zen hura.

Non egon zain ekintza-lekutik gehiegi urrundu gabe? Kale gorrian? Arriskutsua zen. Ahal izanez gero, beste moduren bat aurkitu beharra zegoen.

– Taberna batean epel-epel itxarotea bezalakorik ez dago –Anjelek bota zuen proposamena.

– Bai horixe! –adostu zuen Anek.

– Auskalo zenbat ordu bota dituzten hauek biek taberna zuloetan!

Ziriak ziri, laurak bat etorri ziren; erosoena taberna batean eserita itxarotea izango zen. Eta ekintza burutu ondoren poliziek inguruko taberna guztietan galde zezaketenez, ekintza-gunearen inguruan zenbat eta taberna gehiago izan, orduan eta lan zailagoa Poliziarentzat. Azkenean, inguruan taberna gehien zuen tokia aukeratu zuten: bigarrena, hain zuzen.

Handik aurrera leku hura eta bere ingurua goitik behera behatu eta arakatzeari ekin beharko zioten. Baita ekintza gauzatzeko unean sor zitezkeen ustekabeko guztiak aldez aurretik igartzen saiatzeari ere, gero horiek banan-banan nola saihestu erabakitzeko.

Xehetasun oro bihur zitekeen garrantzitsua, eta den-dena ongi lotuta utzi nahi zuten. Esperientziak erakutsia baitzien ekintzak gauzatzeko orduan balizko zorte gaiztoari inongo zirrikiturik ez zitzaiola utzi behar, azken unean sortzen ziren ezusteko oztopoek sekulako buruhausteak ematen baitzituzten.

Planifikazio-zeregin hartan, bestalde, dena ahalik eta modurik errazenean mamitzea zen irizpidea. Hori bai, konplikazioei ihes egin nahian, errazkerian erori gabe beti ere.

Soberan zekiten alferrikako konplikazioetan sartuz gero, ekidin ezinekoak izaten zirela azken orduko ustekabe ezatseginak, eta halakoetan ekintza-egunean aldez aurretik inork iragarri gabeko oztopagarriak topatzen zituztela behin eta berriro.

Erabaki zuten, bada, ekintza egiteko tokiarena, eta ondoren hurrengo egunetarako bakoitzaren isilpeko lana zehazteari ekin zioten. Tartean, ekintzan erabili beharreko autoaren lapurretari zegokiona.

– Nor arduratuko da horretaz? Hobe badaezpada geu izatea, ez? –proposatu zuen Santik.

Berak eta Inesek ez zuten taldekideen azpiegitura ezagutzen, eta autoa ebasterakoan atxilotzen bazituzten, beste bikotea ez omen zen berehalako arriskuan izango. Hara bere proposamenaren zioa.

– Beno, beno, hori baleko arrazoia bada, guk ezingo genukeen inoiz arriskutsua den ezertan parte hartu –kexatu zen Anjel.

– Eta txandakatuko bagina? Batzuek kale eginez gero, hurrengoan besteak saiatuko dira, bai?

– Hori hobeto dago, baina nortzuek egingo dute lehen saioa?

Eztabaida labur baten ondoren, etxeko bikoteak hartu zuen bere gain ardura hura.

# - VI -

Espainiar telebistan hamaika bitxikeria ikustera ohituta bazeuden ere, Santi eta Inesi egun hartakoa pastelaren ginga iruditu zitzaien. Nor-eta Bizkaiko gobernadore zibila izandako Sancristobal jauna agertu zen pantailan, kartzelatik zuzenean sekulako azalpenak ematen. Santik eta Inesek izan zuten, bai, zertaz hitz egin gau jelatu hartan auto bat lapurtu asmoz etxetik irten zirenean.

Itxaropentsu irten ere, ikastaroan entzundako azalpen ugariei esker erraz moldatzea espero baitzuten. Bazekiten, dena den, halakoetan arrisku handi samarretan sartzen ahal zirena, eta haiei aurre egiteko har zitzaketen neurri guztiak hartuak zituzten.

Etxe barrutik kaleari so egotea maite duten begiluzeen arazoa hor zegoen, adibidez. Zerbait arraroa edozeinek antzeman zezakeen, eta Poliziari deitu. Horregatik zeuden ordu hartan beste bi etakideak eskanerrari adi, eta eurek ere aldean zeramaten polizien frekuentziak entzuteko erabiltzen diren aparatu horietako bat.

– Ea lehenbailehen bukatzen dugun.

– Zorte pixka batekin ordubete barru etxean gara berriro bero-bero.

– Hobe, bai, hotz hau egitea, leihoetan kuxkuxerorik egon ez dadin.

Neguak beste abantaila batzuk ere eskaintzen zituen autoa lapurtzeko orduan. Adibidez, eskularruak jantzita eraman ahal izatearena. Eguraldia epelagoa balitz, eskularruak jarri eta kendu ibili beharko

zuketen autoan aztarnarik ez uzteko. Edo, gainontzean hatzen sinadura uztera arriskatu.

– Ia denek dute barra madarikatu hori.

– Lasai, barrarik gabeko egoki bat aurkitzea nahikoa dugu-eta.

Jende gehienak segurtasunagatik lapurreten aurkako barra bat jartzen zionez autoari, soilik barra gabekoei jaramon egitea erabaki zuten, konplikatuegia baitzen tramankulu haiekin borrokatzea.

– Hara! Barrarik gabeko bat! –Ines seko geratu zen auto baten alboan.

– Eta barra beltz hori? –Santik gehixeago hurbildu ahala ikusi zuen–. Hobe zenuke betaurrekoak ipintzea –bota zion zirikatzaile.

Auto-mota asko irekitzeko bihurkin berezi bat eta bi ahoko giltza besterik ez ziren behar. Horiek biak txamarraren poltsikoan zeramatzan Santik, autoak zabaltzeko ardura bere gain hartua baitzuen.

Inesek, berriz, emakumeek ohikoak dituzten poltsa handi horietako batean zituen, lepotik zintzilik, auto barruan erabili beharreko tresnak. Ongi sailkatuak gainera, dena azkar eta onez burutu ahal izateko poltsa-barrua sail ezberdinetan egoki banaturik baitzuten.

Ines gidariaren eserlekuan jarriko zen, eta Santi albokoan, kortxokentzeko berezi baten bidez blokeoa altxatu, eta egindako zuloan barrena bihurkina sartuz autoa abiarazteko.

– Ño! Honek ez dauka barrarik –Ines *Fiat Uno* zuri baten parean geratu eta ingurua begirada azkar batez aztertu zuen. Ez zegoen inor, ezta kuxkuxeroen beldur handirik izateko arrazoirik ere.

– Bai, gustukoa dut. Saia gaitezen.

Bultzadatxo bat eman zioten autoari. Alarmaduna izatea bazitekeen, eta beste ezertan hasi aurretik zalantza hura argitzea komeni zen.

Alarmak joz gero, ederki zekiten zer ez zuten egin behar: korrika ihes egin. Alderantziz, halakoetan ezer gertatu izan ez balitz bezala jokatzeko gomendatu zieten. Ez baitzen batere arraroa alarmak berez abiatzea. Areago, hain zen ohikoa non jendeak gehienetan ez baitzien jaramonik egiten. Ez zegoen, beraz, horren beldur izateko inongo arrazoirik. Aski zen patxadaz alde egitea.

Atea irekitzeko lana azkar egin zuen Santik. Zenbait autoren kasuan alarmak atea zabaltzean jotzen badu ere, ez zitzaion horrelakorik gertatu. Lasai asko sartu ziren biak barruan.

Lapurreten kontrako barra eserlekuen arteko gunean zegoen, jarri gabe. Hurrengo egunean, jabeak madarikazio galantak botako zituen hartan izandako deskuidua zela-eta.

Hori pentsatu zuen behintzat Santik zulagailuaz saiatzen zen bitartean ondorengo pausoa erraztu asmoz: kortxo-kentzeko bereziaren bidez torlojua sartzea. Ziztu bizian amaitu zuen, eta torlojua erraz asko joan zen klausorraren barrena.

– Aski sartu duzu –ohartarazi zion Inesek, eskanerra entzun bitartean linternatxo batez kortxo-kentzekoa eta ingurua argitzen zituela.

– Oraindik gehixeago eskatzen du.

Barrurago sar zitekeela iruditu, torlojua zenbait koska estuago sartzeari ekin zion Santik. Lana gaizki burutzeko arrazoien artean nahikoa ez sartzea zegoen, eta ez zuen horrelakorik gertatzerik nahi.

– Jarraitzen baduzu, puskatu egingo zaizu.

– Ezetz ba, gogortasuna nabarituko banu, utzi egingo nukeen; baina samur doa.

Hori esan eta torlojua apurtzea dena bat izan zen. Lur jota geratu zen. Nabarmen.

– Lasai, Santi, hutsak eginez ikasten da-eta.

– Kontsolamendu eskas samarra da hori niretzat momentu honetan, baina zinez eskertzen dizut.

Nola edo hala eutsi zioten lasaitasunari, eta beste auto baten atzetik jarri ziren. Baita topatu ere bost minutu eskaseko bidea egin ostean.

– Hau bai toki egokian –Santi auto gorri bati so geratu zitzaion.

– Hona ba gurea.

Auto zuriarekin egindako eragiketa berberak errepikatu zituzten gorriarekin. Alarmarik ez zuela ziurtatzeko bultza, bihurkinaz atea ireki eta, zulagailua erabili ondoren, klausorra atera kortxo-kentzekoaren bidez.

Inesen aholkuei jaramonik ez egiteagatik torlojua apurtzean erabat barregarri sentitu zen Santi. Hala bada, bigarren auto hartan egin beharreko guztia pausoz pauso eta akatsik gabe burutu ostean lasaitu ederra hartu zuen.

Autoa martxan jarri eta handik alde egin, gero toki egoki batean matrikulak aldatu, gasolina-andela ireki eta beste xehetasun batzuk konpondu ahala lana amaituta izango zuten.

Santik bere lekutik klausorrak utzitako zuloaren hondoa hobeki ikus zezakeen, eta bera izan zen bertan bihurkina sartu zuena.

–Ez doa –martxan jartzeko motorraren burrunba entzunagatik, Inesek ezin zuen autoa abiarazi.

Burrunbaren handia kontuan hartuz, behin eta berriro martxan jartzen saiatzea batere komeni ez zenez, hiruzpalau saioren ostean Santik utzi egin zion saiatzeari.

– Hau ere guri gertatu behar!

– Madarikatu honek etengailu famatu horietako bat edukitzea besterik ez dugu behar!

Esana zieten auto-lapurrei aurre egiteko beste bide bat etengailua ezartzea zela, baina ez zuten espero horrelakorik aurkitzea edo, hobe esan, auto barruan egotea, trikimailu hura non zen ez baitzekiten.

Nonahi izan zitekeen, eta ez zegoen haren bila luzaz bertan jarduterik. Halako kasuetan, miaketa arin baten ondoren aurkitu ezean, ospa egitea gomendatu zieten.

Etengailuaren bila hasi ziren. Alferrik, ordea. Ordura arte memelotzat hartutako jabe ezezagun hark sekulako ziria sartu zien.

– Ahoa lehor-lehor daukat, Santi.

– Eta nik nola dudala uste duzu, ba? Tori karamelu bat.

Menta zaporeko karamelu bana eraman zuten ahora. Azkeneko argizirrikitu bat geratzen zitzaien artean; hots, dena bateria arazoren bat besterik ez izatea. Autoari bultza eginez konpon zezaketen agian.

Probatzea erabaki zuten, beren buruei azken aukera bat eman nahi baitzioten. Gainera, aldapa behera apur bat zegoen, eta horrela errazagoa izango zela pentsatuz ekin zioten nahiko lasai probatzeari... aldameneko kaletik bat-batean agerturiko bi gizonezkoen eskaintza jaso zuten arte.

– Laguntzarik behar?

– Eskerrik asko. Konponduko gara bakarrik –Santik oso egoki ezkutatu zuen bere aztoramena.

«Ez ahal dira tematuko!» erregutu zuen autoa bultzatzeari eutsiz. Bikote eskuzabal harengandik lehenbailehen aldendu beharra zeukaten nola edo hala.

Etakide batzuei gertaturiko pasadizoaz oroitu zen: laguntza ematera hurbildu zitzaizkien herritarren arteko batek ezusteko galanta jaso zuen haien bonba-auto matxuratuak berearen matrikula berbera zuela ohartu zenean. Eta bestei esan zienean etakideek hanka egin behar izan zuten lehergaiez zamaturiko autoa bertan utzita.

Bikote eskuzabala begi-bistatik galdu orduko, gelditu egin ziren. Gero eta ikuskizun deigarriagoa antzezten ari ziren, eta deabruaren autoak ez zuen martxan jarri nahi.

– Hobe dugu uztea –zuzen bota zuen Inesek.

– Inoiz ez dut hainbeste arazo izan auto bat altxatzeko, redios!

Bigarrenarekin ere kale egiteak sekulako amorrua eragin zion Santiri. Kinkiek hain erraz ebasten omen zituztenez, lotsagarria iruditu zitzaion beraiek hainbeste zailtasunekin topo egin izana. Bera autoak pistola erabiliz lapurtzen ohitua zen. Eta metodo harekin ere behin baino gehiagotan istorio trakets askoak gertatu zitzaizkion arren, zeharo gustura erabiliko zukeen berriro.

Bazekien, ordea, han ez zegoela erabiltzerik, bestela poliziak taldearen usnaketan jarriko baitziren. Eta, gainera, bonba-autoa gaizki aparkatuta uztea berez arriskutsua izanik, egun batzuk lehenago pistola-muturraz ebatsia izan den modelo eta kolore jakin batekoa baldin bada...

– Saiatuko al gara berriro? –proposatu zion Inesi.

– Beranduegi egin zaigu. Hobe dugu gehiegi ez arriskatzea.

Bikote batek huts eginez gero, besteak saiatu beharko zuen, eta gogorra egin zitzaien arriskua Ane eta Anjelen eskuetan uztea. Erabaki mingarri hura hartzea beste erremediorik ez zuten ikusi, ordea. Ez baitzegoen ordu hartan kale gorrian luzaz hala ibiltzerik.

Huts egin ondoren nahiko ezgauza sentiturik, buru-makur itzuli ziren biak, hasierako segurtasuna lore zimeldua baitzen etxera orduko.

## - VII -

Hura bai ikaraldia! Konturatu gabe inguru arriskutsu batean zebiltzala, Anjel eta Aneri nortasun-agiria eskatu zieten. Baita biak goitik behera miatu ere aldean zerbait zeramatenetz ikusteko. Nonbait, drogaz arduratzen ziren polizia haiek, eta ezer susmagarririk topatu ez zutenez, kasu gehiagorik ez zieten egin. Izualdia, hori bai, bizitza guztirako gordetzen diren horietakoa izan zen.

Bezperan gertatu zitzaien hura, zinemara joateko asmoz irten zirenean. Ustekabe haren ostean filmaz gozatzeko gogo handirik ez zitzaien geratu, eta etxera itzultzea lasaigarriago izango zela erabaki zuten.

Zorionez, ez zieten galdeketa zehatzegirik egin. Zinemarako sarrera-txartelak erosiak zituztenez, egia hutsa esatearekin erraz irten ziren estualdi hartatik, koartadaren beharrik gabe.

Nortasun-agiri faltsuekin ere ez zuten inongo arazorik izan. Poliziek nortasunari buruzko galdera zehatzik ez zieten egin, baina egin izan baliete ere, datu sinesgarriak emateko gai ziren, dokumentazioarekin zerikusia zuen xehetasun oro ederki lotua baitzuten.

Bazkaria prestatzen ari ziren bitartean ekin zioten laurek bezperan gertaturikoa jorratu, eta handik atera zitezkeen ikasgaiak hausnartzeari:

– Eskerrak piparik gabe gindoazen!

Anek eta Anjelek ez zuten oso gogoko pistola aldean eramatea, eta are gutxiago izango zuten esperientzia hura bizi ondoren.

– Ba, nire iritziz, pipak arazo asko konpontzen ditu, eta atzokoa ez da inolaz ere adibiderik egokiena.

Santiri ez zitzaion inoiz antzekorik gertatu; guztiz alderantzizkoak bai, haatik, eta ez zen gertaera hura izango iritziz aldaraziko ziona.

Berriki etakide batzuei gertatua aipatu zien: isuna jartze asmoz udaltzainek geldiarazi zituztenean, pistola-muturraz haiei armak kendu eta hanka egin zuten.

Erantzun azkarrari eta zorteari, biei eskertu ahal zieten eskapada hura. Lapurturiko autoan joanez gero, ez baitzen batere erraza izaten onik irtetea zenbait isun eta istriputatik.

Halakoak nahiko maiz gertatzen zitzaizkien, gainera. Batetik, sasian oso urduri ibili ohi zirelako. Bestetik, gidatzeko ohitura eta trebezia nahiko galdua izaten zutelako, sasiak ez baitzien aukera handirik ematen autoan ibiltzeko.

– Lapurturiko auto batean joanez gero, jakina pipa eraman beharra dagoela! –erantzun zion berehala Anjelek.

Autoak ebasteko, nahiz beste zeregin arriskutsuetarako, denek eramaten zuten pistola aldean. Gainontzeko kasuetan, armarik gabe ibiltzen ziren laurak, Santik besteen esanetara makurtu behar izaten baitzuen.

Haien arrazoiak indartu egin ziren, gainera, bi etakideri frantziar Estatuko supermerkatu batean gertatuarekin: auskalo zer arrazoirengatik, kaxatik pasatu ostean alarma zalapartaka hasi zitzaien. Lagun batek ospa egitea lortu zuen. Besteari, ordea, pistola zorroan aurkitu, eta ez zioten halako aukerarik eman.

Ahal zen neurrian, beraz, beti saihesten zuten armekin supermerkatuetara sartzea. Oso argi baitzeukaten, batetik, halako lekuetan pistolak nekez egingo ziela mesederik; eta bestetik, miaketaren bat jasanez gero, gorriak ikusi beharko zituztela onik irteteko.

Bazkalondoan gai berberarekin ari ziren jo eta ke, egunero bezala piztuta zegoen irratiak berri garrantzitsu bat eman zuenean.

– Gregorio Ordoñez hil berri dute Donostiako Alde Zaharrean!

– Hori gurea da! –Ane ziztu bizian altxatu zen irratiaren ondora joateko–. Bazen ordua horrelako norbait botatzeko.

– Gaur badugu zer ospatu! –Ines eta Anjel ere irratira hurbildu ziren.

– Ez da izango lehen aldia bolanderak jaurti ondoren jairik gabe geratu garena. Beraz, lasai –ohartarazi zien Santik.

– Honezkero ez dute taldea harrapatuko, motel –gero eta animatuago zegoen Ane.

Bera, Ines eta Anjel azken bi urteetan Donostiako Alde Zaharrean izandako ekintzez hitz egiten hasi ziren:

– Aurrena Santamaria, gero Plomos eta orain Ordoñez. Gehiegi! Donostiako hauek mundialak dira.

Santiri, irratiko hots asaldatuaren azpitik eta berria ospatzen ari ziren taldekideen hitz alaien gainetik, burutazio bat erne zitzaion: «Gure jendeak ongi ulertuko ote du ekintza honen beharra?».

Ezker abertzaleko kide askorentzat nolabaiteko tabua zen politikariak ukitzea, eta berak debeku antzeko hura apurtu beharra ongi ulertu arren, ez zekien zein izan zitekeen haien erantzuna.

Beste galdera bat ere itxura hartzen hasia zen bere baitan: zein ondorio ekar zitzakeen ekintza hark?

Barne-kezka haiek mamitzen jardun ostean, Santik burkideei azaldu zizkien, eta denek ekin zioten gogoz gaia jorratzeari irratian ekintzaren gorabeherak etengabe entzuten zituzten bitartean.

– Azken hilabete hauetan maiz pentsatu dut Casasekin gertatuari buruz –Santi unetxo batez pentsakor geratu zen, hitzak neurtu nahi izango balitu bezala.

– Ni gazteegia nintzen orduan –argitu zuen Anek.

– Ba, nik hamasei urte nituen, baina saltsetan sartu gabea nintzen oraindik –Anjeli ere biziki ardura zion gaiak.

Santi orduko hartan gertaturikoa azaltzen saiatu zen: Autonomoen ekintza hauteskunde egun garrantzitsu baten bezperetan etorri zenez, HBkoei probokazio hutsa iruditu zitzaien, eta beste alderdiekin batera ekintza gaitzesteko greba orokorrerako deia zabaldu zuten.

Danboreneak berriki esandakoak entzun ondoren, Santik ateratako ondorioa izan zen Casas ere gerra zikinaren miserietan punta-puntan sartuta zebilela, eta horregatik uste izan zutela PSOEkoek hasiera batean ekintzaren atzean ETA egon zitekeela.

HBkoen jarrera aztertu ondoren, haatik, oso bestela pentsatuko zutela iruditu zitzaion. «Bidea libre dugu! Beldurra dute horiek galanta! Zernahi eginda ere, ez dira gu ukitzen ausartuko» hausnartuko zuten pozik, bere ustez.

– Ba, ederra hanka-sartzea greba orokorra babestearena, ez? –bota zuen Anek Santiren azalpenak arretaz entzun ondoren.

– Orain hori esatea erraza da, baina orduan nekez egin genezakeen besterik.

– Ziur al zaude?

Santi ez zegoen batere ziur, ez, GALi buruz jakiten ari zirenak nolabaiteko kontzientzia txarra sortarazi baitzioten. Isilik geratu zen, erantzunik gabe.

– Beno, oraingoan asmatu dugu behintzat, eta gaitz erdi –Santiren aztoramenaz oharturik, Anjel burkidea laguntzen saiatu zen.

– Bai, hori da garrantzitsuena.

Santiren baitan, dena den, zalantzak habia egiten ziharduen: «Beharbada arrisku handiegia hartu dugu» bezalakoak zetozkion behin eta berriro burura.

Behinolako hartan komenigarriena politikoak ez ukitzea zela uste izan zuten, eta han ziren ondorioak begi-bistan. Erabaki berria ausarta zen eta gustukoa zuen. Azken zalantza-arrazoi bat zebilkion, ordea, buruan bueltaka. «Ez ote zaigu beranduegi etorri ausardia?».

Gaiak gogoeta luze-sakona egiteko hizpidea ematen zuenez, nahiko luzaz jardun zuten ekintzaren balizko ondorio guztiak aztertzen, egun hartan biltzera bultzatu zituen gaiari heldu zioten arte. Astelehen buruzuri hark ez baitzituen apartamentuan elkartuta kasualitate hutsez harrapatu. Ekintza gauzatzeko prestaketa lanak oso aurreratuak ziren, eta azken xehetasunak lotzea besterik ez zitzaien falta.

Anek eta Anjelek lapurtua zuten jada autoa, eta hari egin beharreko aldaketa guztiak eginda zeuden. Etxekoek baino dezente zorte hobea izan zuten. Ustekabeko bakarra alarmaz hornituriko auto batek eman zien, bultzadatxoa nahikoa izan zuen zalapartaka hasteko.

Ingurutik poliki aldendu ostean, bigarren bati ekin, eta inongo arazorik gabe ebatsi zuten. Gainera, gasolina erruz zuen, eta matrikula aldatzen erraz moldatu ziren.

– Ziur al zaudete matrikula horrekin ez dugula arazorik izango? –Santi ez zegoen batere lasai, autoari ezin izan ziotelako ipini modelo bereko beste baten plakarik, eta hura arrisku-iturri zatekeen bere iritziz.

– Hori garaje batekin erraz konpon genezakeen. Bertan gorde eta kito –Anjelek azkar heldu zion aukerari, gai hura trabeska baitzuen.

– Inesek ez du oraindik ezer egokirik topatu –Santik zakar samar erantzun zuen, ez baitzitzaion batere gustatu gai hura berriro mahai gainera atera izana.

– Eta topatuko balu? –Anek ere interes handia zuen lokala aurkitzeko.

Garajearen aldeko argudioak sendotu asmoz gaia ederki baliatu bazuten ere, matrikularengatik sor zitekeen arriskua txikia zen. Komenigarriena modelo bereko beste auto bati zegozkion plaka faltsuak jartzea izanagatik, haien faltan ongi molda zitezkeen beste edozeinen matrikularekin.

Gauza bakarra ekidin behar zuten kosta ahala kosta, modelo hura saltzen hasi baino lehenagoko matrikularen bat jartzea. Huts egite horretaz poliziak ez ezik, beste edozein hiritar ere ohartzen ahal zen-eta.

Jabeak autoa topa zezakeen beldur izateko motibo handirik ere ez zegoen. Barruan utzita zituen gauza guztiak kendu, berriren batzuk ipini eta pegatina bat edo beste gehituz, nekez konturatuko zen, oso gertutik aztertu ezean behinik behin, auto itxuraldatu hura eta berea bat bakarra zirela.

Ez zuen merezi, beraz, matrikularen gai hari punta gehiagorik ateratzea, eta Anjeli garajearen gaia alde batera uztea iruditu zitzaion egokiena, besteei galdera zuzen bat luzatuz:

– Beste zalantzarik ba al duzue ekintzari buruz?

– Nik ez behintzat –erantzun zuen Inesek berehala.

– Beno, antena eskas samarra iruditu zait niri –une batez bota ez bota dudan izan ondoren agertu zien Santik bere kezka.

Ederki baitzekien, xehetasun oro ongi zaindu nahi hartan den-dena hainbesteraino estutuz, behin baino gehiagotan gauzak ongi lotu beharrean lagunak itotzea besterik ez zuela lortzen.

– Zenbat eta antena arruntagoa izan, hobe, motel.

Ahal izanez gero, gauza arruntekin moldatzea komeni zitzaien, bereziak gehienetan deigarriak izaten baitira. Horregatik, bereizkeriak saihestu eta arruntasuna aukeratzen zuten, baldin eta arau hura apurtzea ezinbesteko ez bazen bederen.

– Lasai, proba guztiak egin ditugu, eta primeran iristen da seinalea –Anjelek gustura eman zizkion azalpen guztiak.

Seinale-igorlea aktibatzeko hautatua zuten lekutik seinalea bonba-autoraino egoki iritsiko zela egiaztatu, eta dezente urrutiago kokatuta ere saiatu ziren, are ziurtasun handiagoa izateko. Berrogeita hamar metro urrunagotik seinalea autoraino garbi iristen zela ikusirik, erabateko ziurtasunarekin itzuli ziren etxera.

– Gaurko ekintzaren ondoren, aste berean gurea ateratzen bazaigu, sekulakoa izango da –Anjel biziki animotsu zegoen.

Lehergaiak Ane eta Anjelen azpiegituran zeudenez, bonba-autoa osatzeaz haiek ziren arduratzekoak, eta autoa zamatu ostean dena prest izango zen, bakoitzak burutu beharreko lana erabat zehaztua baitzuten: Ines arduratuko zen helburua bazetorrela ohartarazteaz,

bonba-autoa Anek gidatuko zuen ekintza tokiraino, haren alboan Santi joango zen eta hark konektatuko zion azken unean kargari detonagailua. Bonba-autoa eztanda eginarazteko ardura, berriz, Anjelen esku uztea erabaki zuten.

– Bihar autoa kargatu, etzi eta etzidamu entseguak egin... eta ostegunean gauzatu! –bota zuen Anek euforiaz gainezka.

# - VIII -

Ane eta Anjel lehen orduan azaltzekotan geratu ziren eta etxeko bikotea, artega, haiek aldez aurretik egin beharreko telefono deiaren zain zegoen.

Ines, salako sofan eserita, eskanerrekoak entzuten ari zen aurikularraren laguntzaz. Bitartean, Santi zutik zegoen arrainontziari so, pentsakor. Ez zuten elkarren artean apenas hitzik gurutzatzen, eta horrek ematen zuen giroaren neurria: astuna.

Telefonoaren txirrina behingoz lasaigarri egin zitzaion Santiri.

– Bai, esan? –Inesek berehala heldu zion aparatuari.

– Kaixo, Alberto naiz. Pasa al naiteke atzo aipatu nizun liburu horren bila? –Anjelen ahotsa zen.

– Arazorik gabe. Etxean egongo naiz goiz guztian.

Deiaren zioa dena artez zihoala ziurtatzea zen, eta aldi berean handik ordu laurdenera azalduko zirela adieraztea.

– Bazen ordua. Presta dezagun dena.

Zapia balkoian eskegia zegoela ziurtatu, eta leiho ondoan jarri ziren biak, beste bikotea agertu zain, haiek egin beharreko segurtasun-ibilbidea zaintzeko.

Euria ari zuen kanpoan, tantaz josiriko kristalaren kanpoaldeak erakusten zuenez, eta hori lagungarri gerta zekiekeen, giro harekin jende gutxiago ibiliko baitzen kaleetan.

Aldez aurretik finkaturiko orduan azaldu ziren biak Aneren aterkiaren babespean. Egun hartan, etxearen aldameneko okindegian sartuz, etxerako kruasan batzuk erosi zituzten, bide batez taldekideei edozein xehetasun bitxi atzemateko aukera paregabea eskainiz.

Dendan sartu ziren une berean, haien atzetik aterkirik gabe etorria zen gizonezko bat dendatik berrogei bat metrora zegoen arkupetxoan geratu zen, geldi.

– Ikusi al duzu tipo hori? –Santiren atzamarrak Inesi begiak nora zuzendu erakutsi zion.

– Euriagatik aterpetu da hor; besterik ez.

– Ba, okindegira begira dago.

Erosketa egin ondoren, segurtasun-ibilbidean aurrera eginez, Anek eta Anjelek ezkerretara hartu zuten, metro batzuk haratago etxekoen bistatik landa luzatzen zen karrikan sartzeko. Kasik berehala, kalearen bestaldean zegoen aterkirik gabeko emakume argal batek korrika igaro zuen errepidea, eta kale berean sartu zen.

– Tipoak seinale egin dio! –asaldatu zen Santi.

– Ba, nik ez dut deus ikusi.

– Baietz ba! Atzetik dituzte!

Santi zeharo urduritu zen. Ane eta Anjel laster etorriko ziren berriro, lehengo ibilbide berbera eginez. Bere susmoak baietsirik geratuz gero, zapia lehenbailehen kendu beharra zegoen.

– Atzetik balituzte gizona mugitu egingo zen hortik –Inesek ez zion ez hankarik ez bururik ikusten Santiren ikarari–. Eta gainera ez batak ez besteak dute aterkirik!

Arrazoi hura oso kontuan hartzeko modukoa zen: halako eguraldiarekin, nekez ibiliko ziren euritakorik gabe inoren atzetik zebiltzan poliziak. Dena den, gizon arrunta zein polizia, Santik bere iritziari eusten zionez, erabaki bat hartu beharra zuten.

– Bueltan datozenean atzetik norbait badute, zapia kendu egingo dugu, bai? –proposatu zuen Santik.

Berehala izan zuten erantzuna. Bikotearen atzetik, hogei bat metrora, norbait zetorren aterki azpian babesturik. Inesi gaztetxo bat zela iruditu zitzaion, baina euritakopean zegoenez, ez zeukan ezer ziurtasunez baieztatzerik. Beraz, aldez aurretik erabaki bezala, erretiratu egin zuten zapia balkoitik.

Hori egin bezain laster bikotearen atzetik zihoanak beste norabide bat hartu zuen, eta ez zen inor agertu haren ordez. Arkupeko gizonak bitartean bertan segitzen zuen, eta bikotea aurretik pasatu zitzaionean ez zen mugitu ere egin.

– Ikusten! –bota zion Inesek nahiko haserre–. Ziur naiz den-dena kasualitate hutsa izan dela.

– Ni ere ez nago batere ziur orain –Santiri azken orduko zalantzaren harra egin zitzaion.

Ordurako, ordea, berandu zen atzera egiteko. Burkideek nabarmendua zuten zapiaren falta, eta zeharo urduri aldendu ziren inguru hartatik.

Aldez aurretik erabakia zuten egin beharrekoa. Aurrera eta atzera luzaroan ibiliz, jazarpenik ez zegoela ongi baieztatu, eta soilik orduan deituko zioten Inesi, ohiko segurtasun-ibilbidea errepikatzeko helburuz. Halaxe egin zuten ordu eta erdi geroago.

– Bea naiz. Etxean zauden jakiteko deitzen dizut, hortik pasatzeko asmoa baitut –Aneren ahotsa zen.

– Lasai, neska, edozein ordutan etor zaitezke. Egun guztian hemen izango naiz.

Bigarren aldi hartan etxekoek ez zuten han kanpoan inongo xehetasun susmagarririk igarri. Zapia bere tokian utzi, eta bikotearen zain geratu ziren.

– Zer gertatu da lehen, ba? –atea itxi bezain laster jakin nahi izan zuen Anjelek ikaraldiaren zergatia.

– Zerbait arraroa ikusi, eta nahiago izan dugu arriskurik ez hartu –Santik azaldu zien gertatua.

Nahiz eta antzeko gorabeheretan eskarmentu handienekoa Santi bera zen, kideek gero eta zalantza handiagoa zuten haren irizpideei

buruzkoan. Anek eta Anjelek gehienbat. Neurriak neurri, emaitzen aldetik eskas suertatuak ziren Santirenak; gaizki ulertzeak eta arazoak, aldiz, han zeuden.

Segurtasun-neurrien kariaz beste arazo batzuk ere izan baitzituzten. Ez egun hartako adinakorik, baina bai haserreak eragiteko modukoak, eta horregatik ekin zioten, oso serio ekin ere, gertaturikoa goitik behera aztertzeari.

Azterketa hark ez zien, dena den, halakoak saihesteko erremedio mirakuluzkorik ekarri, eta gaiari bueltak emateaz aspertu zirenean zintzilik zuten beste gai korapilatsu bezain larri bati eutsi zioten:

– Oraindik ez al dute ezer aipatu autoari buruz? –harritu zen Ane.

– Eskanerra gelditu gabe ari gara entzuten, eta ezertxo ere ez.

Bi egun ziren jada aparatua gau eta egun piztuta zeukatela, zuzenean aditzerik ez zutenetan grabagailua jartzen baitzioten. Ane eta Anjel ere berdintsu egiten ari ziren haien etxean.

– Hori ere guri gertatu behar! –Anjel zeharo haserre zegoen.

Lehergaiez bete, bi ekintza saio egin, eta hirugarrena egiteko autoaren bila joan zirenenean, ezusteko galanta: autorik ez.

Edozein istripu saihesteari erabateko lehentasuna emanez, ez zuten sekula detonagailurik uzten bonba-auto barruan ekintza saioak egiteko ez bazen. Karga lehertzeko arriskua guztiz bazter zezaketen, beraz, detonagailurik gabe ezinezkoa baitzen halakorik gertatzea.

Gainera etorri zitzaien arazoa ez zen makala, dena den, eta ongi aztertu beharra zeukaten.

– Txakurrek behintzat ez dute eraman; hori ziur –Santik hasieratik baztertu zuen aukera hura.

Bazekien-eta, ederki jakin ere, haiek atzeman izan balute, eraman ordez bertan utziko zuketela, autoa berreskuratzera azalduko zena harrapatzeko. Hala jokatzen zuten beti.

Aukera hura zeharo baztertuz, bigarren hipotesi bati egin zioten lekua. Garabiak etakideek ebatsiriko autoren bat edo beste jada eramana zuenez, haiei ere gauza bera gertatu izana ez zen hain harritzekoa izango.

Garaje faltan, arriskuan jausi nahi ez bazuten, autoa etengabe mugitzera beharturik zeudenez, aldi oro hura uzteko toki egokiren bat aurkitzea ez baitzen batere erraza izaten: bateko debekuak, besteko leku desegokiak...

Karrika hartan, haatik, ezinezkoa zen garabiarena gertatu izana, aparkatzeko inongo debekurik ez zegoen-eta. Zalantzarako inongo zirrikiturik ez zuen uzten toki hark.

Hirugarren hipotesi bat aztertzeari ekin zioten orduan. Egunero auto mordoxka ebasten zituzten kinkiek. Beti lapurretaren kontrako barra jartzen ziotelako izan ez balitz, aho batez onartuko zuketen hipotesi haren gertagarritasuna oso kontuan hartzeko modukoa zela.

Barra hura ipintzeak lapurtze oro guztiz ezinezko egiten zuelakoan baitzeuden, baina aldi berean huraxe zen, izan, geratzen zitzaien

azken aukera. Horregatik, Anjelek atera zuen ondorioa izan zen Aneri ahaztu egin zitzaiola barra ipintzea.

– Seguru naiz jarri niola –defendatu zuen hark bere burua.

– Baita zera ere! –Anjelek zakar erantzun zion–. Denok dakigu barrarekin arriskurik ez dagoena!

– Beharbada kinkiek ezagutuko dute barra kentzeko metodoren bat –Ines Aneren alde agertu zen.

– Alferrik zabiltzate aitzakia bila. Barra ipintzea ahaztu zuen, eta kito!

– Ba, ez dut ulertzen –negarrari eman zion Anek.

– Lasai, laztana, horrelakoak edonori gertatu ahal zaizkio-eta –kontsolatu nahi izan zuen Inesek.

– Adibidez, hor duzue gaur niri gertatua –Santik ere laguntza luzatu zion.

– Bai, baina zureak ez du ondoriorik izan; begira, ordea, barra madarikatu bat ez ipintzeagatik egin digun aberia!

Anjelen zakarkeria mingarri zitzaion Aneri. Eta ez hari bakarrik. Etxeko bikotea ere gero eta haserreago zegoen.

– Pasatzen ari zara, Anjel –hitz-jario erasokor eta desegoki hura mozteko erabakia hartu zuen Santik.

– Honezkero ez du erremediorik eta, eztabaida antzuetan indarrak alferrik galdu beharrean, hobe dugu etorkizunari begiratzea –Inesentzat ere oso argi zegoen auzia.

– Barkatu, hainbeste istoriorekin urduri jarri naiz –Anjelen hitzen tonuak hark esandakoaren balioa nabarmendu zuen.

Laurak zeuden urduri lapurretagatik, handik aurrera askoz ere kontu handiagoz jardun beharko baitzuten. Poliziek bonba-autoa aurkitu eta hatz-markei esker norbaiten identitatea atzeman zezaketen. Ez zen hain harritzekoa izango, adibidez, Anerenak topatzea, berak gidatu eta aparkatu baitzuen.

Karga prestatu eta bonba-autoa osatzeko orduan kontu bereziz ekiten zioten hatz-markarik ez uzteko. Ekintza gauzatu aurretik ere autoa poliki txukuntzen zuten. Gainontzean, ez zieten horri jaramon handirik egiten, zeharo gogaikarria baitzitzaien une oro hartaz arduratzea.

Gertaturikoa ikusiz, ordea, erabaki zuten handik aurrera hatzen kontu hura arreta handiagoz zainduko zutela.

– Ahantz gaitezen behingoz horretaz –Inesek ez zuen inolaz ere zaurian hazkaka jarraitzerik nahi–. Beste auto bat eskuratzeak du orain lehentasuna.

– Lapurretan parte hartu nahi nuke –errua berea zelakoan, Anek bere burua eskaini zuen.

Txandatzekotan geratu zirenez, aldi hartan etxeko bikoteari zegokion lan hura. Haatik, aurrekoan besteak hobeto moldatu zirela kontuan hartuz, azkenean haiek errepikatzea erabaki zuten aho batez. Bazuten artean beste bonba-auto bat egiteko adina osagai, eta laster izango ziren berriro ekintza-saioei ekiteko prest.

## - IX -

Ane eta Anjel erraz moldatu ziren beste auto bat lapurtu, hura behar bezala egokitu eta proba guztiak burutzen, lan hura lehen egindakoaren errepikapena besterik ez baitzen izan. Lapurtu eta lau egunera osatua zuten jada bonba-autoa eta berehala ekin zioten berriro ekintza saioei.

Erabaki bezala, itxaron leku gisa taberna batez baliatuz ekin ere: Anjel, kafesnea dastatu bitartean egunkariko iragarki laburrei begira, libretatxo batean lan-eskaintzak eta haiei zegozkien telefono zenbakiak apuntatzen ziharduen. Ane eta Santik, beste bazterrean, bukatua zuten gosaria. Garrantzirik gabeko berriketa lasaian ziruditen arren, erne eta tentsiopean zeuden.

Aurreko bi egunetan helburua ekintza-lekutik pasatu ez zenez, hirugarren saio hura balekoa izatea espero zuten. Lau ibilbide ezberdin erabiltzen zituen eta noizbait egokitu beharko zitzaion hura egitea ere.

Ekintza saioetarako beraien eguneroko itxura aldatze asmoz, denek erabiltzeko moduko hiru betaurreko pare zituzten taldean. Santik jarrita zeramatzan haietako batzuk; Anjelen egunerokoak, hain zuzen. Azken hau zalantzan egon zen, beste batzuk jarri ez jarri, eta azkenean, poliziek eduki zezaketen bere edozein argazkitan begietan ezer gabe azalduko zena jakinik, ipini egin zituen.

Arroparen hautaketan ere arreta berezia jarri zuten. Ohikoak baztertuz, beste estilo batzuetako janzkiez baliatu ziren. Santik, adibidez, hain egoki geratzen zitzaizkion jaka eta gorbata kendu zituen, eta Anek galtzen ordez gona zuen soinean.

– Maizago jantzi beharko zenituzke horrelako gonak. Oso zango politak dituzu.

– Hitz goxoak Inesentzat gorde, txo! –ez zen zakarkeriarik Aneren ahotsean, denbora galdu alde edozertaz jardun behar hartan libre baitzen zernahi esatea.

– Ordua aurrera doa; gaur ere kale.

Helburua agertu ezean, entsegu haiek apenas arriskurik bazuten ere, mezua jaso ahala alarma gorri guztiak piztuko ziren, eta horrexegatik zeramaten hirurek pistola aldean.

– Badator! –Ane zeharo asaldatu zen.

– Bazen ordua! –nahiz eta lasaitasunari eutsi nahi izan, Santiri ere taupada ederretan ari zitzaion bihotza dantzan. Aldez aurretik erabakitako keinua egin zion Anjeli.

Ez ziren batera irten. Aurrena Anjel joan zen, eta ia berehala bikotea. Tabernatik hurbil zuten aparkaturik autoa, arazorik gabe alde egiteko eran kokatua, eta Anek berehala eutsi ahal izan zion bolanteari bideari ekiteko.

– Denboraz ongi gabiltza. Bi minutu eskas baizik ez dira igaro –Santi bere ordulariko kronometroari adi zegoen.

Erabakitakoaren arabera, autoa bost minutuko epearen barruan laga beharko zuten hautaturiko lekuan, eta edozein ustekabeko zela-eta, tarte horretan egiterik ez bazegoen, saioa bertan behera uztekotan lotu ziren.

Bidean zegoen semaforo bakarrean seko itsatsiak geratu ziren.

– Semaforo ostia hau gorri egokitu behar! –haserretu zen Santi.

– Lasai, epe barruan iritsiko gara-eta.

Semaforotik ihes egitea lortzerako, hiru minutuak joak zituen kronometroak. Nolanahi ere, geratzen zitzaien minutu pare hartan ederki molda zitezkeen. Hori, beste oztoporen batekin aurrez aurre jo ezean, jakina. Bestela dena errepikatzea beste biderik ez zuten izango.

– Prest? –Aneri, bost zentzumenak erne, adrenalina guztia batera ari zitzaion lanean.

Hautaturiko tokia bistan zuten, eta haren ustez hango inguru guztian enbarazu egin zezakeen ezer ez zegoen.

– Aurrera! –Santik ere, edozein xehetasun susmagarri bilatu nahian, begiratu sakona eman zien bazterrei; ez zuen kezkatzeko moduko ezer nabaritu. Han zegoen, gainera, Anjel bere lekuan prest.

Inguruko edonor, dena den, polizia izan zitekeen. Balizko horretan jarrita, uniformedun arruntek zaila zuten etakideen mugimenduetan ezer arrarorik usaintzea. Egoki prestaturiko poliziek, ordea, susmo txarra har zezaketen.

– Lasai konektatu –aholku egin zion Anek ibilgailua aparkatu bezain laster.

Lasaitasun eskaera hura lagunari adina bere buruari zuzendu zion, antzeko bere aurreneko ekintza izanik, urduri baitzegoen.

Azken orduko eragiketa haiek erraztu asmoz, kordoi detonatzailea Santiren eserlekuaren azpiraino luzatua zuten, hark dena aise egin zezan. Lan erraza zen, baina, kasu hartan, sekulako tentsiopean egin beharrekoa: seinale-hargailua abiarazi; froga-bonbillatxoak –elkarturiko bi erabiltzen zituzten– pizten ez zirela ziurtatu; detonagailuak konektatu –ekintzaren garrantzia kontuan hartuz, hiru badaezpada ere– eta, azkenik, kordoiaren muturraz egindako espiralean sartu, horrela kargari itsatsiak gera zitezen.

Hura guztia egiteko hamar segundo aski zituenez, Santik ziztu bizian amaitu zuen eta, Anerekin batera, bizkor irten zen autotik.

– Primeran atera zaigu dena.

– Orain Anjeli tokatzen zaio zailena.

Helburuak jarraitu ohi zuen bidean aurrera joan ziren. Lehenik, ehun bat metro aldendu bitartean, azkar samar; polikiago gero.

Leherketaren hotsa aditu ostean, ahalik eta lasterren ospa egitea besterik ez zitzaien geratuko. Anjelek bere kasa egingo zuen hanka, eta apartamentuan elkartuko ziren laurak.

Ekintzaren ondoren lehenbailehen elkartu beharra zuten, denak onik irten zirela ziurtatzeko. Gehienbat, Anjel, hura baitzen bereziki, arriskuan zegoena.

Dena den, oso era segurua zuten bonba-autoa eztanda eginarazteko: seinale-igorlea arropa azpian, gerrian, eraman, eta eskua poltsikoan sartuz pultsadoreari sakatu. Inork ezingo zuen nabaritu, beraz, Anjel leherketaren eragilea izan zenik.

Inguruetan poliziarik balego, ordea, susmagarritzat har zezakeen Anjelek bertatik alde egitea. Zauriak jasotzeko arriskua ere hor zegoen... Hara zergatik zitzaien hain ezinbesteko ekintza burutu bezain laster elkartzea.

– Helburua! –Ane zeharo asaldatu zen hura ikustean.

Han zihoan lasai asko leherketa gertatu beharreko tokitik pasatu ondoren. Ez zegoen tronpatzerik. Halako autotzarra erraz asko nabari zitekeen beste guztien artean.

– Zerbait gaizki atera da –Santirentzat ere kolpe latza izan zen; dena eginda zegoela uste izan, eta hara non egoera okerrera joana zitzaien.

Eztabaida sakona izan zuten autoa berreskuratzeari buruz. Ez ote zen arriskutsuegia? Ekintzarako ongi aparkaturik uztea lortuz gero, ez zuen zertan arriskutsua izan beharrik, baina gaizki lagata arriskua nabarmen biderkatzen zen.

Bonba-autoa gaizki aparkaturik uztea neurturiko arriskua zuten. Berreskuratzea beharbada gehiegizkoa. Arazoa sakon aztertu ondoren, haatik, autoa berreskuratzearena hartzeko moduko arriskutzat jo zuten.

Bi arrazoi nagusitu ziren eztabaidan. Batetik, kale egin eta autoa bertan utziz, ekintza betirako zapuztuko zitzaiela. Bestetik, eta hura zen garrantzitsuena, leku hartan gaizki aparkaturik lagatako autoak ez zirela deigarri egiten, jende dezentek uzten baitzuen hala denbora laburrerako.

Berreskuratu beharra zuten, bada, eta ekarritako bide berberari ekin zioten itzuleran. Bonba-autoa utziz geroztik bi minutu eskas igaro ziren, eta laster izango zuten berriro begi-bistan.

– Beti hipotesi okerrena gertatzea ere! –kexatu zen Santi.

– Lasai, dena ongi joango zaigu –berriro ere, Santiri adina, bere buruari luzatu zion mezua Anek.

Lehentxeago egindakoa baino askoz ere betebehar arriskutsuagoa izango zen egitekotan zirena. Bi arrisku motagatik izan ere. Okerrena, bitarte hartan, poliziek autoari susmo txarra hartu eta kontrolatua izatea. Eta kontuan hartzeko moduko beste hipotesi bat ere bazegoen: udaltzainak edota garabia azaltzea.

Balizko haiei aurre egiteko modua hitzartua zuten: arazoren bat sumatuz gero, Anjel seinale jakin bat egitekotan zen. Kalearen beste aldean ikusi zutenean, nahiz eta artega zegoela iritzi, hark galzorietan erabili beharreko keinua egin ez zuenez, autora hurbildu ziren.

Anjelek beste betebehar bat ere bazuen. Taldekideek bonba-autoa arazorik gabe berreskuratzen zutela ziurtatu ondoren, Inesi deitu behar zion hirurak onik zirela jakin zezan. Ekintzak kale egin zuela jabetzean, Ines larritu egingo baitzen hutsaren zergatia atxiloketaren batean egon zitekeelakoan.

Artean etxeratu gabea bazen, erantzungailuan utziko zion abisua: aldez aurretik adosturiko mezu arrunt bat.

– Goazen lehenbailehen –Anek barrura sartu bezain laster jarri nahi izan zuen martxan.

– Itxaron detonagailuak kendu arte behintzat! –haserretu zen Santi.

Lehenagoko pauso berberak egin beharko zituen atzekoz aurrera: detonagailuak espiraletik atera, seinale hargailutik deskonektatu, gurutzatu, korronte estatikoren baten erruz leher ez zitezen gurutzatu ere, ongi babestu eta gorde, azkenik aparatua itzaltzeko.

Biek hartu zuten lasaitu ederra handik irten zirenean, eta bidea inongo arazorik gabe egin ostean, autoa egoki aparkatu, lapurreten aurkako barra jarri, eta apartamenturako bidea hartu zuten.

Erabakia zuten elkarrekin ez etxeratzea, bakoitza bere aldetik baizik, eta Santi izan zen abiatzen lehena. Apartamentuko atea berriro itxi orduko luzatu zion galdera Anjeli.

– Zer gertatu da?

– Ez dudala karga aktibatu –erantzun zuen hark goibel.

Berehala eman zizkion Anjelek azalpen guztiak: helburua ikusitakoan, eskua poltsikoan sartu, seinale-igorlea piztu eta hatza pultsadorearen gainean jarri omen zuen. Hura bonba-autoaren parera iristera zihoala, ordea, hiru gazte agertu ziren. Hurbilegi bere ustez. Lipar batean erabaki behar izan zuen zer egin. Hatza, eta baita gorputz guztia ere, dardara batean izan ostean, ez zion sakatu.

Samindura sakona ageri zuen hitz eta keinu guztietan. Ez zen gutxiagorako, erabakia hartzeko momentuan ederki baitzekien autoa berreskuratzea burkideentzat oso arriskutsua izango zena.

Bada, haiek onik atera ziren arren, egindakoaz edo, hobe esan, egin gabekoaz zuen duda galanta ez zen, haatik, desagertu.

– Lasai, Anjel; egokiena egin duzu, ziur –Inesek bizkarrean jo zion lagunkoi.

– Guztiok egingo genukeen gauza bera, motel.

Halako batean, Ane agertu zen, jakin-minez agertu ere, eta Anjelen azalpenak entzun orduko, hark ere taldekidea animatzeari ekin zion, larrialdi gaizto hura lehenbailehen atzean utz zezan.

– Ez eman horri buelta gehiagorik. Hurrengo saioan garbi-garbi aterako zaigu; ziur!

Anjelek, ordea, buru makur jarraitu zuen. Lagunak arriskuan jartzeaz gain, den-dena errepikatu beharko zuten. Berriro ekin beharko zioten hainbat egunez tabernan itxaroteari, berriro bonba-autoa toki debekatuan utzi beharko, berriro... Zer ez ote zuen emango une haietan Oihana neska-laguna bere alboan izatearren!

# - X -

Lehen aldi hartan kale egin ostean, berehala hasi ziren berriro saioekin, eta helburuak haiei komeni zitzaien ibilbidea hartu zuenean, Anjel betiko lekuan jarri zen karga aktibatzeko prest.

Aurrekoan gertatua gogoan, berriro ere gorputz guztia dar-dar batean izan zuen, baina orduan ez bezala gogotik sakatu zion pultsadoreari. Alfer-alferrik sakatu ere, denen harridurarako lehen aldian gertaturiko gauza berbera gertatu baitzitzaien. Helburua bidean aurrera galdu zen.

Bigarren aldiz kale egin ostean, ezinbesteko ikusi zuten huts ulertezin haren arrazoia argitze asmoz biltzea, eta bildu ahala ekin zioten gaia jorratzeari.

– Ez dago zalantza izpirik seinalea iritsi, iristen dela –Anerentzat sekulako misterioa zen hura dena.

– Hau ulertuko duenik! –Anjelek ere hamaika buelta eman zizkion arazoari, eta ezin erantzun egokirik osatu.

– Orduan, zer kristo izan daiteke? –Santiri besteei bezain harrigarria egiten zitzaion hura dena.

– Ziur detonagailuen akatsa izan zela. Haiek aldatu, badaezpada gehiago jarri, eta astelehenean saioekin segi dezakegu –proposatu zuen Inesek.

– Ezta pentsatu ere! Bitan kale egin, eta arazorik gabe irtetea zorte handiegia izan da hirugarrenez besterik gabe arriskatzeko –aurre egin zion Anjelek.

Haren iritziz detonagailuena zeharo baztertzerik ez bazegoen ere, ekintza saioekin jarraitu aurretik misterio hura argitu beharra zegoen.

Ane ere uste berekoa zen, eta gaiari erabateko lehentasuna emanez hutsa argi zezakeen arrazoiren bat aurkitzeari ekin zioten. Motibo ezkutu hura topatu arte ez zuten bakerik izango.

Bazekiten misterioa argitzekotan imajinazioa erruz erabili beharko zutela. Isilpeko lan hartan sortzen ziren hamaika ustekaberi aurre egiteko orduan, irudimena erabakigarria baitzen. Prestakuntzak berak adinako garrantzia zuen.

– Eta helburua bera izango balitz seinalea pasatzen uzten ez duena? –proposatu zuen halako batean Santik.

Hipotesi hura lehenago ere bururatu zitzaion, baina absurdutzat jo eta bazterturik izan zuen ordura arte. Seinale guzti-guztiak neutralizatzen zituen aparatu bat? Horretaz ez zekiten ezertxo ere. Posible ote zen halakorik lortzea?

– Ez da batere ideia txarra –Anek oso zentzuzko iritzi zion hipotesiari.

Denei gustatu zitzaien. Aukera hura ezin zen besterik gabe baztertu. Nola egiaztatu, ordea? Buru-belarri sartu ziren hipotesian, eta denen

artean azkar aurkitu zioten irtenbide bat: aski zen helburuak egiten zuen ibilbideko edozein tokitan autoa ongi aparkaturik uztea. Ez zeukan inongo garrantzirik ekintzarako beharkizunak betetzea, eta horrek gauzak erabat erraztuko zituen.

Helburuaren lau ibilbide ezberdinek bazuten, hasieran, zati amankomun bat. Bertan saiatuko ziren proba egiten, auto barruan utziko zituzten hiru aparaturen laguntzaz: seinale-hargailua, pilaz zebilen edozein irrati eta, azkenik, grabagailua.

Irratiaren pila-elikatzeak soilik hargailuari seinalea iristean funtzionatuko zuen, eta helburua agertutakoan aski izango zen, inguruko edozein posiziotan egonda, pultsadoreari sakatu eta hala eustea.

– Helburua pasatzen den unean seinalea mozten bada, akabo gure buruhausteak!

Autoa berreskuratzean grabaketaren baitan etenik ez bazegoen, beste arrazoiren bat bilatu beharko zuten. Etena emanez gero, aldiz, ez zitzaien zalantza izpirik geratuko: helburuak seinale guztiak indargabetzen zituen aparaturen bat zuen.

– Astelehenean bertan egin dezakegu proba –animatu zen Ane.

– Ez al da hobe izango, dena ongi prestatzeko, egun gehiago itxarotea? –Santik xehetasun guztiak egoki lotu nahi izaten zituen beti.

– Garajerik bagenu ez genukeen batere arazorik izango itxaroteko –aukera suertatuz gero, Anjelek azkar asko heltzen zion lokalaren gaiari, azken batean bera eta Ane baitziren bonba-autoa osatu behar zutenak.

– Inesek ez du oraingoz ezer egokirik topatu.

– Eta horretaz denok arduratuko bagina? –galdetu zuen Anek.

Prestatu ondorengo egunak igaro ahala, kargak indarra galtzen duenez, ekintza egin ezinik segituz gero, eltzeak hustu, lehergaia xehatu eta berriro betetzera behartuak izango ziren. Garajerik gabe lan arriskutsu samarra zena.

Ongi etorriko zitzaien, beraz, lokal itxi bat, eta azkenean Santik ere bere onespena eman zuen, zerbait txukuna aurkituz gero, alokatzeko. Gogoz kontra eman ere, argi utzi baitzien taldekideei oso arriskutsua iruditzen zitzaiola.

Lapurtu zieten autoaren auzia ere aztertu zuten. Ezbeharra gertatu zenetik hiru aste pasatxo ziren igaroak, eta hasiera bateko bi hipotesi nagusiei helduz segitzen zuten; edo arrisku handia, edo sekulako zortea. Eta aukeran nahiago zuten bigarren hipotesiaren arabera lan egin; alegia, autoaren bila saiatu, nola edo hala.

Gai haren azken muturrak jorratzerako, bazkalordua gainera etorri zitzaien. Bezperan egindako porrusalda eta etxeko bikoteak ederki prestaturiko gibela izan zituzten mahai gainean. Postre gisa, berriz, laurek biziki maite zuten arroz-esnea.

Bazkalostean, egun haietan pil-pilean zebilen gai bat hartu zuten hizpide: Rafael Vera eta Danborenea egunkarietako lehen orrialdeetan zebiltzan.

– Nork esango zigun guri jendilaje hori kartzelan ikusiko genuenik! –bota zuen Santik, gaiak eragiten zion poza agertuz.

– Bai, motel, gero eta harrituago nago –Anjeli ere nabari zitzaion gozatzen ari zela.

–Ez dute, ez, barruan denbora luzerik egingo.

Gogoz jardun zuten GAL aferari buruz kalakan, haren atzean mugi zitezkeen askotariko interesak ulertu nahian, halako batean Anek askaltzeko berandu samar egiten ari zitzaiela aipatu zuen arte.

– Berehala prestatuko dut txokolatea –Ines mahaitik jaiki, eta sukalderantz abiatu zen.

– Lagunduko al dizut? –Anjel bere atzetik joan zen.

– Etxean ez da, ez, hain azkar mugitzen –Anek, ahotsa goraturik, Anjeli eztenkadatxo bat bota zion–. Nor engainatu nahi duzu?!

Ez ziren batere luzatu askaria prestatzeko orduan; bai ordea mahaian, sabela berdintzeaz batera eztabaidari eutsi baitzioten. Gaia agortu zutenean, solasa jolas edo joko bihurtzea otu zitzaion Inesi.

– Gustura egingo nuke partxisean.

– Musean galtzeaz aspertuta, ala? –Aneri ez zitzaion zirikatzeko gogoa inoiz ahitzen.

– Zorte txarra dugulako hartzen diguzue gaina kartetan –Santiren erantzuna.

– Tira, tira, zuek musean Plixti eta Plaxtaren kontra ere irabazteko gai ote zinateke, ba? –Anjelek ez zuen gogoko saltsatik kanpo geratzea.

Partxisean isuri zituzten nolabait atsegin-atsekabeak. Edo hesiak zirela, edo batek hari jan, eta besteari pasatzen utzi ziola, edo ez dakit nork bat gehiago kontatu ote zuen argi ez zegoela... Umeen pare eman zituzten orduak, eta lasaigarri egokiagorik nekez aurkituko zutelakoan, halako partidatxoak maizago errepikatzekotan geratu ziren laurak.

## - XI -

Pare bat aste lehenago erabakitako proba egin ahala argitu zitzaizkien duda-mudak: seinale guztiak ezabatzen zituen aparaturen bat zuen helburuak, ziur, auto barruan seinale-hargailuarekin batera utzitako grabagailua berreskuratzean, garbi ikusi baitzuten kasetean etenaldi nabarmena ageri zela.

Ekintza seinale-hargailua erabiliz egitea ezinezkoa zen beraz, ezkutu ikusezin hark sekulako babesa ematen baitzion.

Misterioa argitua zuten azkenean. Geroztik, ordea, beste buruhauste zailago bati egin behar zioten aurre. Nola gauzatu ekintza, nola egin? Egongelako sofan elkarren ondoan eserita, Ines eta Santik arazo hura zuten une hartan mintzagai.

– Hobe dugu ekintza bertan behera uztea –Santik beltz ikusten zuen egitasmo haren etorkizuna.

– Lasaiago pentsatuz zerbait bururatuko zaigu –Ines ere kezkati zegoen, baina irtenbideren bat aurkitzeko esperantza handia zuen.

– Baita zera ere! Kablea erabiltzea beste erremediorik ez dago, eta kito!

– Carrerorena horrela egin zuten, ez?

– Eta?!

Inesek aipamen hura eginez Santi susperrarazi nahi baldin bazuen ere, alferrik ari zen, hark ederki baitzekien ekintza hura gauzatu zenean poliziei ez zitzaiela burutik pasatu ere egiten erakundea antzeko ezer egiteko gai izan zitekeenik.

Hogeita bat urte igaro ostean, eta urte haietan jasotako kolpe latzen ondorioz, oso neurri zorrotzak hartzen zituzten; helburuaren ezkutu gaindiezin hura lekuko.

Dena den, berri txar haren ostean on askoak ere jasoak zituen taldeak: garaje txukuna topatu eta alokatzeaz gain, lapurturiko bonba-autoa ere aurkitua zuten.

Biak ala biak Ane eta Anjelek topatu zituzten, eta garajea haiek bakarrik ezagutzekotan geratu ziren, haien etxearekin egin zuten bezala. Autoa lehergaiez zamatzea bien ardura zenez, onena huraxe litzatekeela iritzi zioten laurek.

Lapurtua zieten autoari zegokienez, Ane eta Anjelek ezusteko ederra jasoa zuten bezperan, esperantza handirik gabe haren bila hirian zehar osteratxo bat egiten ari zirela. Ezin duda izpirik egin: kolore, matrikula eta modelo hartako autoa derrigorrez izan behar zuen beraiena.

Aldez aurretik erabaki legez, ez ziren inolaz ere haren alboan geratu eta poliziak atzetik ez zituztela ziurtatzeko txango luzea egin ondoren burkideengana jo zuten aurkikuntzaren berri ematera. Orduan, bakoitzak bere aldetik lekua ahalik eta zehatzen aztertu, eta Inesen apartamentuan biltzekotan geratu ziren laurak zer egin erabakitzeko.

Horren zain zeuden Ines eta Santi egongelan kalakan eta beste bikotea heldu bezain pronto ekin zioten laurek azterketari. Horretarako, mahai gainean hiriaren planoa jarri, autoa agerturiko auzoaren erdian zabaldua, eta hari begira hasi ziren eztabaida bizian.

– Ez da posible berrogei egunean txakurrek aurkitu ez izana –Anjel ez zen batere fidatzen.

– Ba, niri ez zait hain arraroa iruditzen.

Santik argitu zienez, auto ebatsiak erraz atzematen zituzten gaizki aparkatuta zeudenean edota lapurtuak zirela begi-bistakoa izanez gero. Poliziarentzat interes berezia zutenean ere, delituren bat egiteko erabilia izan zelako adibidez, azkar aurkitzeko modua izan zezaketen.

Bonba-auto lapurtuak, ordea, matrikula garbia zuen, inongo salaketarekin loturarik gabea, eta lapurrek ongi aparkatua utzi zutenez, normala zen poliziei deigarria iruditu ez izana.

– Eta ebasleek maletegia ez irekitzea ere logikoa al da? –Santiren argibideei zuzen iritzi arren, Anjelek bazuen artean zalantzarik; huraxe nabarmenena.

– Irekita ere, zer aurkituko zuten, ba, bertan? –berehala erantzun zion Santik.

Baita ederki arrazoitu ere bere ikuspuntua: auto-lapurrak, ohiki, maletegiaren edukiaz arduratzen baziren ere, zer zela-eta imajinatu beharko zuten ezer susmagarririk han barruan zegoena ikustean?

Lokarri antz nabarmeneko kordoi detonatzailea eta bi lapiko handi, auskalo zertaz ongi beteak. Lapikoen barruan zegoena lehergaia zenik ez zitzaien burutik pasatu ere egingo. Han barruan ez zegoen kinkien intereseko ezer. Gauzak bere hartan utziko zituzten seguruenik.

Denek eman zioten arrazoi eta ikusi zuten bazela han lehenbailehen erantzuna ematea eskatzen zuen galdera bat; alegia, autoa berreskuratzen saiatzea merezi zuen ala ez.

– Arriskutsuegia iruditzen zait –Anek argi eta garbi azaldu zuen bere iritzia.

– Tranpa izan daiteke –Inesek ere zorte on handiegitzat zuen autoa hain erraz berreskuratu ahal izatea.

– Egin dezagun egoeraren analisi logiko bat –Santiren hitz fetitxea *logika* zen eta, hura oinarri harturik, zehatz-mehatz azaldu zien bere ikuspegia.

Ez omen zuen inongo zentzurik segadaren hipotesiak. Autoa polizien eskuetan jausi eta zelatan egoteko toki egokiren bat aukeratu behar izan balute, ez zuketen inondik ere hura hautatuko. Denei iruditu zitzaien segadarako erabat desegokia.

Poliziaren ustezko tranpan eroriko baziren, gainera, lehenik eta behin autoa aurkitu beharra izango zutenez, ezin esan leku hura horretarako aproposena zenik. Autoa askoz ere errazago topatzea ahalbidetuko zukeen hamaika leku izanik hirian, polizien ikuspegitik haietako batean aparkatzea izango zen normalena.

– Eta autoari bip-bip horietako bat ezarri badiote? –Anjelek kezka ugari zituen oraindik.

– Hori litekeenagoa ikusten dut, baina hain leku bazterrekoan zelatan egotea ez –behingoz bederen Santi bat zetorren Anjelen zalantzekin.

Eztabaidak luze jo zien. Azkenean, denak ados jarri ziren; segadarenak ez zuen zentzurik. Taldeak autoa topatzeko posibilitate hain urria izanik, nekez egongo ziren berrogei egunean halako txoko baztertu batean zain. Bip-bip delakoarena, aldiz, beldurgarriagoa zen.

Zelatan luzaroan egoteak eskatzen zituen baldintzak betetzea korapilatsu samarra zenez, bazitekeen autoari halako detektagailu txiki bat ezarri izana, norbaitek hura hartuko balu erraz joateko haren atzetik. Santik berak ere aitortu behar izan zuen aukera hura ukaezina zela.

– Orduan ez du merezi arrisku hori hartzea –Anek ez zuen ikusten zer abantaila atera zezaketen bonba-autoa berreskuratuz.

– Lehergai faltan bagina, normala izango zen arriskatzea, baina ekintzarako adina edukita, zertarako? –Anjel ikuspegi berekoa zen.

– Gauzak gaizki joango balira galera handia izan dezakegu; eta ongi joanda, berriz, askorik ez dugu irabaziko –Ines ere beste biekin ados zetorren.

– Oker zaudete. Arrisku gutxirekin irabazi itzela atera dezakegu –Santik enfasi berezia eman zien azken hitzei, bere baieztapen hartaz erabat seguru baitzegoen.

Azkar asko bota zituen bere arrazoiak. Autoa berreskuratuz gauza garrantzitsu bat lortuko omen zuten: poliziaren atzaparretan eroriko ez zela ziurtatzea.

– Pentsa –Santik etenaldi bat egin zuen, hausnartzen ari zenak biziki kezkatzen zuenaren seinale–, autoan hatz-aztarnak aurkitzeko arriskua oso handia da, eta aurkitzen ez badituzte ere, segurtasun-neurriak estutu egingo dituzte; zeharo, gainera.

Ez zuen gehiago esan beharrik izan guztiek uler zezaten balizko hark taldearen etorkizuna kolokan jarriko zuela. Nabarmena zen, beraz, autoa berreskuratzeak zekarren onura.

– Nik bakarrik berreskura dezaket, nahi baduzue –proposatu zuen Santik.

– Kasu horretan ez zinateke zu bakarrik jarriko arriskuan, talde osoa baizik –Inesek ez zuen batere gogoko izan balentria hura.

Beste bi etakideek ere lekuz kanpokotzat jo zuten proposamena, eta denen arteko adostasuna erdietsi nahian, eztabaidari ekin zioten berriro. Ikuspegiak gero eta bateratuagoak ziren arren, denek aho batez hartzeko zailegia zen erabakia. Eta ezer egitekotan, hobe zuten, bai, denak bat etorrita egitea.

Anjelek aurkitu zuen modu aproposa:

– Eta Josuri laguntza eskatuko bagenio?

Ez zuen, ez, legala Eba gisa izendatu, ordurako laurek ezagutzen baitzuten benetako izena. Baita bere helbide eta telefono zenbakia ere.

Santiren hitz fetitxea *logika* izanagatik, ezin esan beti ongi erabiltzen zuenik logika famatu hura. Legalaren nortasunari zegokionez hartuak zituen gehiegizko segurtasun-neurriak lekuko, haien bidez eraginkortasuna beharrean aurkakoa lortu baitzuen.

Egokiena legalak ahalik eta taldekide gutxien ezagutzea izanik, bere kasa erabaki zuen Santik alderantziz ere berdin jokatzea litzatekeela aproposena. Denbora igaro ahala, ordea, bere baitan horri buruz zalantzak piztu ziren, eta Inesi iritzia eskatu ondoren beste bi burkideena ere beharrezkotzat jo zuen. Azkar asko erabaki zuten zer egin lauren artean. Ebaren istorioa aurrerantzean torturapean poliziei sinestarazten saiatuko liratekeen koartada besterik ez zen izango.

– Ez da batere ideia txarra; ez horixe! –Anjel berehala jabetu zen legalak joka zezakeen paperaz.

– Ziur naiz laguntzeko prest azalduko dena –Josu ezaguturik, Santik ez zuen horretaz duda izpirik.

– Baina baiezkoa ematen badu ere, ba al dugu bera arriskuan jartzeko eskubiderik? –galdetu zuen Anek.

Azkenean, laurak bat etorri ziren Josuren laguntza eskatzeari zegokionez. Bera atxilotuko balute, Santi eta Ines identifika zitzakeen, gehienez jota. Lauretako edozein eroriz gero, aldiz, akabo taldea. Eta beste gauza ugari ere bai, denek gauza askotxo baitzekiten.

Zehatz-mehatz finkatu zuten nola gauzatu berreskurapena. Lehenik eta behin, Josuk errepaso on bat eman beharko zion autoari: bertan sartu, martxan jarri, eta guztia prest utzi benetan berreskuratzera joango zenerako. Jarraian, segurtasun-ibilbide bat egin beharko zuen oinez, horrela taldeak ziurta ahal zezan poliziarik ez zuela atzetik.

Dena arazorik gabe joango balitz, Josu autora bueltatu, hura hartu, eta handik hurbil Ane eta Anjel izango lituzke zain, bi lapikoak haien autoan sartuta ospa egiteko prest.

Bikotea, lehen-lehenik, eltzeetan bip-bip aparaturik ez zegoela ziurtatzeaz arduratuko zen. Ondoren, eta orduan soilik, lokalera joango ziren.

Josuk, bitartean, bere aldetik aurrera segituz, hatz-marka oro ezabatu, eta bonba-auto ohia aldez aurretik aukeraturiko leku egokiren batean ongi aparkaturik utziko zuen.

Argi zegoen garajea oso une egokian hartua zutena. Dagoeneko ederki etorri zitzaien, lehergaiez beteriko bi lapikoak bertan lasai asko hustu zituztenean, kale gorrian lan arriskutsua izango baitzen hura. Lapurturiko bonba-autoa berreskuratzeko ere lokalak sekulako mesedea egingo zien.

Laster jakingo zuten, beraz, bonba-auto ebatsiaren azpian Poliziaren segadarik ba ote zegoen, Inesek berehala izango baitzuen legalarekin hitzordua.

Autoaren berreskuratzea ongi lotu ostean, burutu beharreko ekintza izan zuten hizpide. Gai hartaz hitz egiten hasi orduko, Santiri nabar-

men ilundu zitzaion begitartea. Nabarmena zen ekintza, egitekotan, kablea erabiliz egin beharko zutena, eta hori arriskutsuegia iruditzen zitzaion.

– Bihar bertan izango garenez bitartekariarekin, hobe erakundeari galdetzen badiogu, ez?

– Eta erantzuna jaso bitartean besoa besoaren gainean egon? –erantzun zion berehala Anek.

– Alferrik da ekintza honekin tematzea. Horren ordez, zergatik ez gara saiatzen beste bat egiten?

– Benetan merezi duen zerbait aurkituko bagenu, zergatik ez? –onartu zuen Anek–. Baina oraingoz behintzat erdipurdiko gauzak besterik ez ditugu topatu.

– Erakundeak helburu zehatz bat jarri digu, eta ahal dugun guztia egin behar dugu hori betetzeko –Anjel, eztabaida bere jatorrizko ildotik aldentzen ari zela iritzirik, gaia berriro bide egokira ekartzen saiatu zen.

– Arrazoi du Anjelek. Ekin diezaiogun gogoz egin beharrekoari, eta bidean beste zerbait sortzen bazaigu, orduan hitz egingo dugu aukera berriaz –Ines iritzi berekoa zen.

Amore eman zuen Santik, hitz haien ondoren ez baitzegoen ezer esaterik. Ekintza prestatzeko egin beharrekoak aztertzea zen une hartan premiazkoena.

– Orain arte aukeraturiko tokietan ez dago inolaz ere kablea erabiliz egiterik –Santik berak heldu zion arazoaren funtsari.

Leku aproposen bat topatzekotan, seguruenik ezinbestekotzat jotzen zuten baldintzaren bat baztertu beharrean izango ziren: helburua bonba-autotik hurbil pasatzea derrigorrezkoa zen; pultsadoreari sakatuko ziona handik urruntxo izatea ere bai...

Baldintza bakar bat iruditu zitzaien alboratzeko modukoa, karga aktibatuko zuenaren posizioa autoarekiko lerro perpendikularrean izatea. Helburua bonba-autoaren pare-parean noiz pasatuko zen ongi ikusteko baldintza hura beharrezko bazitzaien ere, ez zen besteak bezain garrantzitsua.

Azkenean, beharkizun harekin malguago jokatuz, lau ibilbideak berriro goitik behera aztertzekotan geratu ziren, kablea erabiltzeko modua eman zezakeen leku baten bila, eta ondoren biharamuneko hitzordua ekarri zuten hizpidera.

Bitartekariaren bidez bidali beharreko ia guztia idatzia zuten ordurako: lehen-lehenik, beste taldeak ahalik azkarren jakinaren gainean egon zitezen, ezkutuarena aipatu zuten. Ondoren, beraien dudamudak agertu zituzten. Ekintzak gauzatzeko orduan erabateko autonomia bazuten ere, ordura arte inoiz inori sortu zitzaionik uste ez zuten zailtasun baten aurrean zirelakoan, beharrezko iritzi zioten hari buruz kontsulta egiteari, azken batean arrisku oso handietan sartzekoak baitziren. Aurrera egin behar zuten ala ez, horixe izan zen erakundeari galdetu ziotena.

Ez ziren askorik luzatu falta zitzaiena idazten: lau gauzatxo, tartean lapurtu zieten bonba-autoarena, hura berreskuratzeko moduan zeudela aipatuz. Hori bai, xehetasun handirik eman gabe, badaezpada ere.

Martxoko larunbat hark ez zuen gehiagotarako eman, baina ondorengo egunetan izango zuten nahiko zeregin: biharamunean bitartekariarekin hitzordua, gero lapurturiko bonba-autoa berreskuratu, eta horrez gain, ekintza egiteko toki egoki bat aurkitu.

# - XII -

Bonba-autoa inongo arazorik gabe berreskuratu zuten, eta Josu agindutakoa betetzen oso ongi moldatu zenez, egun hartan Inesek denen izenean eskerrik beroenak eman behar zizkion. Hitzordua, betiko legez, arratsaldeko zazpi eta erdietan izango zen.

Askalostean, harantz abiatu aurretik, Santi eta Ines azken hiru egun haietan pil-pilean zebilen berriaz hitz egiten ari ziren egongelako sofan eserita.

Hamar urte lehenago Alacant inguruan kare bizitan ehortzita aurkitu eta geroztik bertako udal hilerriko depposituan gordeta zituzten bi gorpu Joxi Zabala eta Joxean Lasarenak ote ziren zabaldu zuten hedabideek. Hala omen zioen bederen euskal abokatu batek jasotako deiak; ia hamabi urte lehenago Iparraldean desagerturiko bi zoritxarreko iheslari haienak zirela.

– Uste al zenuen inoiz aurkituko zituztenik? –galdegin zion Inesek.

– Egia esan, ez –Santi hunkituta zegoen, biak ezagutu baitzituen.

Iheslariek esana zuten, hasiera-hasieratik, biak Baionan desagertu ziren egunean Intxaurrondoko guardia zibilak ikusi zituztela inguruan, eta horrenbestez ez zeukatela zalantza izpirik bahitzaileen nortasunaz. Eta biei gertatuko zitzaienaz ere ez: harik eta zekiketen guztia atera arte, tortura ikaragarriak jasan beharko zituzten. Gero, heriotza. Eta azkenik inork idoroko ez zuen zulo batean lurperatuko zituzten.

Bazekiten, ederki jakin ere, hura izango zela bien patu ikaragarria eta horregatik oso argi zeukaten mila aldiz hobea zela tiro edo lehergailuen ondorioz hiltzea lagun haiei gertatu zitzaiena baino.

Horretaz hitz egiten hasi ziren biak, baina laster aldatu zuen Inesek gaia, nabarmena egin baitzitzaion Santiren aztoramena. Bitartekariaren bidez erakundeak bidali zien ohar bat aipamenera ekarriz aldatu ere.

Hari esker erantzuntzat eman zezaketen igorri berri zuten galderari buruzko erantzuna, helburu berberarekin aurrera egin bai ala ez. Oharrak zera azpimarratzen baitzuen, finkaturiko ekintza hura gauzatzeak sekulako garrantzia zeukala.

Gai hari buruzko kezkak alboratzeko ezin hobeki etorri zitzaien. Ahalegin berezia eskatzen zien erakundeak, ekintza aurrera ateratzeko egin ahalak egiteko esanez, eta eskakizun hark haiek luzaturiko galderari oso erantzun garbia ematen ziolakoan zeuden denak... Santi izan ezik.

Dena den, berean tematzea desegokia izango zelakoan, erakundeak uhin-ezkutuarena ez zekiela azpimarratuz, adibidez, ez zituen bere duda-mudak berriro mahai gainean jarri.

Ekintzarekin aurrera egitea erabaki zuten, beraz, eta hura kablea erabiliz gauzatzeko leku apropos baten bila hasi ziren; alfer-alferrik, ordea, eta horrek areagotu baizik ez zuen egin Santiren jarrera ezkorra:

– Erakundearen eskaera zehatza eta garbia da, bai, baina ziur naiz ez dugula aurkituko toki egokirik –nahiz eta zalantzak baztertzen saiatu, Santik nekez begira zezakeen baikortasunez egitasmo hura.

– Oso denbora gutxi izan dugu orain arte.

– Alferrik eskatuko diogu denborari ezin eman dezakeena –Santi pentsakor geratu zen erlojuari begira–. Irtengo al gara? –proposatu zuen azkenean.

– Oraindik seiak besterik ez dira.

– Hobe badaezpada garaiz abiatzea.

Segurtasun-ibilbidea kontrolatzeko hautatua zeukaten kafetegian beti egoten zen beraiei egoki zetorkien lekuren bat. Santik, hala ere, bertara ordu erdiko aurrerapenarekin iristea maite zuen, ustekabekoei inongo zirrikiturik ez uzteko.

Zuhurtziaren ildo berean, Santik eskatuta jarriko zen beste bikotea eskanerrari adi hitzordua baino ordu erdi lehenago. Zazpietatik aurrera han izango ziren biak Poliziaren frekuentzien jarraipena egiten, eta kezkatzeko moduko zerbait entzunez gero kafetegira deituko zuten.

Zazpietan heldu ziren Ines eta Santi kafetegira. Ohiko lekua libre zegoen. Biak lasai eseri, eta garagardo bana eskatu zuten.

– Bere orduan etorriko ahal da!

– Lasai, Santi, aurreneko aldi hartan izan ezik, oso puntuala izan da beti.

– Bai, badirudi zurekin gusturago egoten dela –bota zion Santik txantxetan.

Ziriak ziri, pozik zegoen, zeregin hura Inesen eskuetan utzi zuenez geroztik ez baitzen inongo arazorik sortu. Argi zegoen, gainera, bien artean hobeto moldatzen zirena.

– Han dator! –Josu bistan egon bezain laster ikusi zuen Inesek.

– Zuk duzu, zuk, begi zorrotza!

– Ia-ia zuk neskekin duzunaren adinakoa.

Inesen blaustadarentzako erantzuna hantxe botatzekotan zegoela, tximista batek jo izan balu bezala asaldatu zen Santi.

– Ikusi al duzu tipo hori?!

– Txamarra berdexka daramana? –Inesek ez zuen azalpen handirik behar izan nori buruz ari zen igartzeko.

– Bai, bera!

Josu ohiko erakusleihoan begira geratu bezain laster, legala baino metro batzuk atzerago zetorren gizonezko hura seko geldi geratu zen beste denda baten parean. Atzetik emakumezko bat agertu zen, eta gizonaren alboan geldit:uz, hitz batzuk gurutzatu zituzten.

– Atzetik ditu! Oraingoan bai, ziur nago!

– Beharbada ez da ezer –Inesek nahiago zuen bikote arrunt bat besterik ez zela sinetsi.

Erakusleihoaren aurrean minutu batzuk igaro ostean, legalak betiko bideari ekin zionean, emakumezkoak azkar asko jarraitu zien haren pausoei.

– Eta orain zer diozu?

– Kasualitate handiegia da, bai –onartu zuen Inesek; Santi baino lasaiago egonagatik, bere baitan ere artegatasuna leku egiten hasia zen–. Baina seguruenik beste alarma faltsu bat besterik ez da izango.

Ezkerretan hasten zen ohiko kalean sartu zen Josu. Emakumeak ez zuen denbora luzerik behar izan karrika bera hartzeko. Hura izan zen, hain zuzen, gizonak aukeraturiko abagunea beste bien bidetik abiatzeko. Alboan inor ez zuela hitz batzuk egin ostean abiatu ere, eta zeharo nabarmena egin zitzaien soinean ezkutatua zeraman mikro bati zuzendu zizkiola hitzok.

– Izorra hadi! Atzetik eta atzetik ditu!

Segurtasun-neurrien artean hura zen hartzen zailena. Etxearen "garbiketak" edota soinean zituzten gauzenak, adibidez, nekez eman zezakeen arazorik, interpretazio okerren beldur izateko arrazoirik ez baitzen kasu haietan. Norbait segitua den aztertzea, ordea, zeharo zaila izaten da, eta hala izanik, ahal bezain ongi egiten saiatzen ziren.

– Badator berriro –oraingoan ere Ines izan zen legala ikusi zuen lehena.

Josuren urratsetan urrats eginez zahar bat zihoan. Legala geldi geratutakoan gauza bera egin zuen gizon aguretu itxurako hark.

– Badirudi txakur-aukera zabala dutela txakurtegian.

– Gero eta zabalagoa, zoritxarrez.

– Nola da posible txakurrak atzetik izatea? –Santi biziki kezkaturik zegoen.

– Ez ote du lapurtu ziguten bonba-autoarekin zerikusia?

Hipotesia baztertzeko modukoa iruditu arren, Santiri gogorra egin zitzaion aukera hura ere han zela onartzea. Berak emandako iritzia erabat garrantzitsua izan baitzen autoa berreskuratzea erabakitzeko orduan.

– Lagunek ez ote dute ezer arrarorik entzun eskanerrean?

– Ezetz dirudi.

Halaxe zen, bai: beste bikoteak, eskanerrari adi belarriak erne egonagatik, ez zuen ezer susmagarririk entzun.

– Goazen badaezpada, hemen ez dugu-eta ezer egiten –hordiari ardoa bezala, Santiri hipotesia burura igotzen ari zitzaion, eta pentsatu zuen haize freskoak ez ziola batere kalterik egingo.

– Bai, goazen –Ines pentsakor geratu zen une batez–, baina ez ahaztu eman beharreko abisuaz.

– Ene, bai! –Santik zeharo ahantzia zuen–. Nik esango diot zerbitzariari –berarengana hurbildu eta adosturikoa esan zion.

Taldekideek eskanerrean zerbait susmagarria entzun eta deitu izan balute, Santik utzitako enkargua emango zien zerbitzariak: «Etxera joan direla esateko eskatu didate». Beste edozein mezuk ere balio izango zuen, hitzordura agertu ez zirela jakinarazteko modu bat besterik ez baitzen.

– Arazo zaharrak konpondu ahala berriak sortzen zaizkigu –kexatu zen Santi kafetegitik atera bezain pronto.

– Gaur galanta konpondu dugu behintzat.

## - XIII -

Apirilaren lehen egun hartan *Apirileko arraina* izeneko eguna ospatzen zen Iparraldean, hots, Hegoaldean izaten den *Inuzente Eguna*ren antzekoa, eta etxeko bikotea irribarretsu zegoen, heltzear ziren burkideei ziri eder bat sartzeko prest.

– Ziur al zaude ez direla konturatuko?

– Zeharo! –Santik are gehiago alaitu zuen begia–. Niri ere itzela sartu zidaten errefuxiatu berritan.

Amua barru-barruraino nola irentsi zuen etorri zitzaion gogora. Iparraldera iritsi berria zela, goizaldeko ordu bata eta erdietan telebistan saio ezin interesgarriago bat zegoela esan zioten eta, hantxe egon zen, esnaturik, ordua iritsi arte.

Aparatua piztu zuenean, arrainontzi bat ikusi zuen pantailan. Ezohiko irudi hura zela-eta harritu egin zen, baina emisioa hasi bitartean jarritako betegarria zelakoan, ordu-erdi pasatxo eman zuen arraintxoei begira.

Iparraldean, arrainak ikusi bezain laster denek ulertzen zuten norbait harpa jotzen ari zitzaiela. Berak, aldiz, ez zuen *Apirileko arraina* delako hari buruzko inongo berririk. Pantailako arrainontzia ikusteak ez zion inolako bonbillatxorik piztu kaskoan. Aspertu zenean telebista itzali, eta tutik ere ulertu gabe oheratu zen. Biharamunean barre ederrak egin zituzten bere kontura.

Oroitzapenen harira, Plixti eta Plaxtarengana hurreratu zen Santi eta, janari apur batzuk ontzian bota bitartean, gozotasunez hitz egin zien.

– Telebistan ateratako haiek ez ziren zuek bezain politak; ez horixe!

– Azken egun hauetan Plaxta pattal samar ikusten dut –Ines ere arrainontzira hurbildu zen.

– Beharbada Plixtik aspertuta dauka –Santi lehenik Inesi zuzendu zitzaion; gero arrainari–. Ez zara, ba, ni bezain gogaikarria izango, ezta?

– Zu bezalakoa balitz, Plaxta munduko arrainik zoriontsuena litzateke.

Inesen ezpainek Santirenak bilatu zituzten; bere eskuek, berriz, haren ipurdia. Baita aurkitu ere. Nahiz eta halakoak, ohiki, biek gehien maite zuten jolaserako gonbite izaten ziren, taldekideen zain zeudenez, musu grinatsu hark ez zuen jarraipenik izan.

Lagunak apartamentuan sartu bezain laster ekin zioten prestaturiko ziria sartzeari.

– Jakin al duzue? –Inesek hitzei enfasi berezia emanez egin zien galdera.

– Zer? –harritu ziren iritsi berriak.

– Roldanek espetxetik ihes egin du. Oraintxe bertan entzun dugu irratian. Flash bat eman dute.

Ziria sartzeko berriki Laos-en atxilotu eta espainiaratu ondoren kartzelan zegoen Guardia Zibilaren buru ohia aukeratzea ideia ezin hobea iruditu zitzaien. Hari buruz ordura arte jakindakoak hain sinesgaitzak zirenez, beste edozein berri harrigarri guztiz sinesgarria zatekeen.

– Tipo honek marka guztiak apurtzen ditu. Hilabetea besterik ez kartzelan, eta ospa! –Santi ihesari buruzko xehetasunak irratian katetik katera bilatzen zebilenaren itxurak egiten ari zen.

– Helikopteroz alde egin du, ezta? –Anek galdera txantxa kutsuz egin zuen.

– Bai –Inesi harrituaren begitartea egin zitzaion–. Zuek ere aditu duzue, ala?

– Ez, baina apirilaren batean maiz gertatzen dira horren antzekoak.

Etxeko bikotea txundituta geratu zen, besteek zirikada nondik zetorren zein erraz igarri zieten ikusirik. Laster jakin zuten, haatik, zer zela-eta zeuden hain zorrotz.

Anek eta Anjelek beste adarkada dotore baten berri zuten. *Euskaldunon Egunkaria*k apirileko arrain irudimentsu bat tartekatu zuen bere orrialdeetan ia jende guztia jokoz kanpo harrapatuz.

Zenbait egun lehenago enkante batean hogeita hamahiru milioi pezeta ordaindu zituen ordura arte ezezaguna zen norbaitek, *Leizarragaren Biblia* eskuratzearren. *Egunkaria*k lehen orrialdean zekarrenaren arabera, eroslea Euskaltzainburua izan zen; hots, Haritxelhar jau-

na. Loto frantziarrean libera mordoxka irabazi, eta diruaren zati bat hartarako erabili omen zuen.

*Efe* berri agentziak, amua irentsiz, bere bezero guztiei helarazi zien ustezko berria, eta egia jakin bezain laster hura zuzendu beharrean aurkitu zen. Barre galantak egin zituzten Ane eta Anjelek irrati bidez jakin zutenean.

– Benetan barregarri utzi gaituzue –aitortu zuen Santik–. Behin pentsatuko ziria sartzea eta *Egunkaria*koek ez digute, ba, guztia saboteatu!

– Adarra jotzeko aukera hain urria uzten duten lagunek, merezi ote dute askaririk? –Inesek txokolatez bete zituen lau katilu eder.

– Berriro halakorik egiten badiguzue, hurrengoan txurrorik gabe geratuko zarete –Santik, txantxetan, txurro bat jarri zion ahoan Aneri.

Une hartan gauzak ongi zihoazen berriro taldean, ekintza arrakastaz gauzatzeko aukerek nabarmen egin baitzuten gora: saiatzearen saiatzez, ekintza burutzeko leku nahiko aproposa atzeman zuten halako batean. Ezin esan, inola ere, ezaugarri guzti-guztiak aldekoak zituenik, baina nahiko erabilgarria bazen bederen.

Helburuak bonba-autoaren hurbil-hurbilean zertan pasatu izango ez zuen arren, oso aldendurik ere ez zela ibiliko kalkulatu zuten, ezkutuak emandako konfiantza zela eta. Horri buruz leku berria eta antzinakoa berdintsuak zirela esan zitekeen. Aldiz, eta aldez aurretik igarri bezala, topatu berri zuten toki hartan ez zegoen kablea erabiliz perpendikulartasuna erdiesteko modurik. Ondorioz, helburua

autoaren parean doi-doi noiz igaroko zen zehatz-mehatz kalkulatzea zaila gerta zitekeen.

Helburuaren autoa blindatua zenez, erdi-erdian asmatzeak garrantzia handia zuen, eta bazekiten hala jokatuz zaila izaten dela halakorik lortzea. Aukeran beste modu hoberik ez zuten, haatik, eta zirt edo zart egiteko tenorea heldua zitzaien, leku egokiagorik ez baitzuten inon topatuko.

Bada, txurro-txokolate beroak dastatu ostean, gai hura jorratzeari ekin zioten:

– Lekua bera ez da txarra. Kablea hedatzearena, ordea... –hasi zen Santi.

– Asmatuko dugu modu errazen bat, motel –moztu zion Anek.

Hogeita bat urte lehenago, Carreroren aurkako ekintza gauzatzeko orduan, etakideek oso irudimentsu jokatu zuten elektrikariz jantzita susmo oro desbideratzeko, eta beraiek ere irudimenari astindu ederrak eman beharko zizkioten ekintza hura inorentzat deigarri izango ez zen moduren batean gauzatu ahal izateko.

Hasteko, aurrez aurre zeukaten arazo handi bat gainditzeko: bonba-autoa bigarren lerroan utzi beharra. Bada, nola konektatu kablea autoari? Hori egiteko moduren bat asmatzea ez zen lan erraza izango.

Mirarizko irtenbiderik ez zitzaien agertuko, ziur. Gero eta konbentzituago zeuden, ordea, hausnartzen segituz gero, zerbait bururatuko zitzaiela. Eta horretan zebiltzan buru-belarri.

– Ni neu kezkatuen naukana perpendikulartasun ezarena da –Inesek ekin zion guztien artean korapilatsuena zen gaiari.

– Aukeratu dugun posiziotik ongi ikusten da –lasaitu nahi izan zuen Anek–. Gainera, Carrerorena ere berdintsu egin zuten.

– Baita kale egindako makina bat ere –zuzendu zion Anjelek.

Arrazoi guztiarekin zuzendu ere. Bista oso engainagarria izaten baita. Nahiz eta erraz asma daitekeela pentsatu norberak, errealitateak erakusten zuen perpendikulartasun egokia lortu ezean maizegi huts egiten zela.

Carreroren aurkako ekintzan noiz sakatu jakiteko seinale moduan auto bat jarri zuten. Beraien kasuan, autoak bi funtzio bete beharko zituen batera; lehergailu eta erreferentzia izango zen aldi berean. Hori bai, oraingo honetan auto blindatua dezente azkarrago igaroko zen aukeraturiko gunean zehar, eta kale egiteko aukerak biderkatu egingo ziren.

Aukera hura besterik ez zuten, haatik, eta zalantzak alde batera utziz ekintza lantzeari ekin zioten. Baita ederki landu ere, eta hurrengo egunetako eginbeharra finkatu ondoren, aho batez adostu zituzten bakoitzaren lanak.

## - XIV -

Banan-banan gainditu zituzten egun batzuk lehenago gaindiezinak zirudien hainbat oztopo gaizto. Lehenik, bonba-autoa bigarren lerroan jarri behar izateak zekartzan eragozpenak menderatuz, kablea ahalik errazen konektatzearena.

Asmo horrekin, auto bat lapurtu eta toki egokian ongi aparkatua zuten jadanik. Estolda-aho baten ondoan, hain zuzen, isurbideaz baliatzea baitzen kablea espaloi azpitik, denen begi-bistatik at, pasatzeko era bakarra.

Horretarako erabili zuten sokatxoa estoldan barrena espaloiaren beste aldera pasarazteak nahiko lan eman zien. Azkenik, autoa garbitzearen aitzakiaz denbora luzez saiatu ostean, lortu zuten.

Soka fin hura erabiltzeko arrazoiak bi ziren. Lehena, kablea baino errazago pasa zitekeela. Bigarrena, eta garrantzitsuena, hark nekez piztuko zuela inoren susmoa estolda barruan utzi behar zuten denboran. Kablea hedatu ondoren, sokatxoari lotzea aski izango zen espaloi azpitik auto barruraino erraz asko eramateko.

Azken unean, bonba-autoa lehendik egoki aparkaturik zutenaren pare-parean jarri, ahalik eta elkartuen, eta kableen arteko azken konexioa azkar eta txukun egin ahalko zuten. Helburua iritsi artean nekez ikusiko zuen han inork ezer arrarorik bertatik bertara eta ongi begiratuta ez bazen.

Horrenbestez, ekintza egin, egin zezaketen, eta gainera leku berriak bazuen abantaila nabarmen bat: helburua beti pasatzen zen bertatik... bidaia hura egiten ez zuen aldi bakanetan izan ezik. Lehen ekintza saioa balekoa izango zenaren ia erabateko ziurtasuna zuten, beraz.

Desabantaila handi askoa ere bazuen, haatik. Tokia helburuaren etxetik gertu zegoenez, ez zien inongo aukerarik ematen bere etorreraren abisua jaso eta, lehen bezala, bonba-autoa azken unean aparkatzeko. Ondorioz, garaiz utzi beharko zuten aukeraturiko lekuan eta ondoren ahalik lasaien itxaron.

Hori lehen-lehenik kablea behar bezala hedatzea lortzen bazuten, jakina, eta hura ez zen batere lan erraza izango, alfer-alferrik jardun baitzuten kablea egunez hedatzeko aitzakien bila.

Toki hartan elektrikariz mozorrotuta egitea, Carrerroren aurkako ekintzan bezala, erokeria zatekeen. Azkenean, aho batez erabaki zuten egokiena goizaldera hedatzea izango zela. Eguna argitu eta langileak mugitzen hasi aurretik.

Lehenik, kablea zabaldu eta sokatxoaren bidez aldez aurretik aparkatua zuten autoraino igo. Gero, zortziak baino lehentxeago, bonba-autoa aparkatu, azken loturak egin eta bakoitza bere lekuan jarri. Horiek ziren segidan eta ia etenik gabe egin behar zituztenak eta horretarako, arratsaldean oheratuz, lo ahalik ongien eginda joan beharra zegoen.

Iratzargailuak goizeko hiruetan esnatu zituen, eta une hartan Santik eta Inesek gosaria bukatu berria zuten.

– Oso urduri nago, maitea –aitortu zion Santik eguneko lehen zigarretaren zuztarra hautsontzian itzaliz.

– Lasai, dena ongi aterako da-eta.

– Gehiegi arriskatu beharko dugu.

– Denok dakigu limitetik gertu ibiliko garena, baina egiteko modukoa da –animatu zuen Inesek.

Etxetik irteteko orduak jo arte bete beharreko lanei errepaso on bat eman, eta material guztia txukun sailkatzen jardun zuten biek. Isil-isilik irten ziren apartamentutik.

Autoa gertu aparkaturik zuten. Iheserako ebatsitako bat, hain zuzen, hautaturiko tokiagatik eta metodoagatik, ekintza gauzatu ostean oinez alde egiteko aukera ez baitzen batere fidagarria.

Hainbeste auto lapurtu behar izateak arrisku-maila igo zuen arren, lan hura zailtasun berezirik gabe bete izanak, are ausartago sentiarazi zituen azken arazoei aurre egiteko.

Esperientziaz zekiten, gainera, arrisku handienekoak ziruditen zereginen ondorioz gutxitan izaten zirela atxiloketak. Txikikeriaz harturiko hamaika xehetasun gaizki lotuen ondorioz, aldiz, urtea joan urtea etorri erorketa itzelak gertatu ohi ziren.

Beste bikotea zain zuten bidean. Biak autoan sartu eta elkar agurtu ahala hasi zen Santi bateratzaile lanetan.

– Eman diezaiogun errepaso orokor bat egin beharrekoari.

– Buruz dakigu den-dena eta! –kexatu zen Ane.

–Ba, hamaikagarren aldiz bada ere, errepikatzea hobe.

Santi beti bezain zorrotz zebilen isilpeko lanari zegokionez. Gainera, kablea hedatzen esperientzia pixka bat zuen bakarra bera zen, hamabost-hogei urte lehenago hala egiten baitziren antzeko ekintzak baliabide elektroniko egokien faltan.

Eskarmentu apur hura militantzia hasi berritako ekintza batera mugatzen zen. Bide estu samar batetik pasatu ohi ziren guardia zibilen land-rover pare baten aurkakoa, hain zuzen.

Lehergai eta metrailaz beteriko lapikoa bide ertzean jarri, berrehun metroko kablea haiek pasatzean karga leherrarazteko baldintza egokiak betetzen zituen toki bateraino zabaldu eta, dena ederki kamuflatu ostean, han igaro zituzten taldekoek txandaka hiru egun luze zain... sekulako euritea bota, eta karga zeharo hondatu zuen arte.

Eta ez bakarrik hondatu, baita ageri askoan utzi ere. Ez ziren ausartu dena kentzera eta, berria Guardia Zibilaren belarritaraino iristearekin batera, ekintza betirako zapuztu zitzaien.

Oraingoan ez zuten halako arriskurik. Orduan ez zuten oso handi bat bai, ordea. Alde galanta baitzegoen ia trafikorik igarotzen ez zen bide erdi galdu baten ertzean kablea hedatzetik halako hiri handi batean egitera. Toki oso egokia aukeratu bazuten ere, ezin saihestu etxe batzuen bistan lan egin behar izatea. Eta biztanleren batek ikusiko balitu...

Espainolak ez ziren, dena den, frantsesak bezain zaleak edozein tontakeriagatik poliziei deitzeko orduan. Hori zen bederen haien iritzia, eta lana onik burutzea espero zuten.

Ekintza-lekura iritsi bezain laster, aldez aurretik pausoz pauso antolaturikoa abian jartzeari ekin zioten:

– Beldurrik gabe piztu eta eten argiak, e! –Santik azken aipamen urduria luzatu zion Inesi. Honek auto barruan eskanerrari adi geratu behar zuen eta, alarmarik balego, besteei modu horretan ohartarazi.

– Argi guztiak itzalita daude. Primeran! –Ane beraien lana ikus zezaketen biztanleen etxe barnetako argiez ari zen oraingoan.

Anjelek, Inesen moduan, eskaner bat zeraman soinean, eta hari adina inguruei kasu berezia egiteaz gain, aldenduago aparkatuta utzi berria zuten autoaren argiei so egotea zen bere lana.

Anek eta Santik zuten, beraz, kablea hedatu eta kamuflatzearen ardura. Horretarako, lotu beharreko bi puntuen arteko ibilbidea zatiz zati aldez aurretik ederki aztertua zuten, kablea zeharo estaltzea ezinezko izanik, behinik behin ahalik eta arreta gutxien piztu zezan.

Kablea estoldaren irteeran utziriko sokatxo muturrarekin lotzearena azken unerako uztekotan geratu ziren. Gero, jadanik ongi aparkatua zuten autoraino isurbidean barrena igotzea erabat erraza izango zen.

– Ea ahalik azkarren egiten dugun –Santik beti zuen prest bere ohiko "aholku" haietako bat.

– Baietz ordu laurdenean! –baita Anek ere bere baikortasun alai hura.

Harturiko neurriekin nekez egingo zitzaien behintzat korapilorik, kablea txukun asko bildua baitzuten txirrika egoki batean, eta bertatik askatzea lan erraz eta segurua zen.

Gauaren estalpea taldekoen lagun, gertuko etxeetakoei ezinezko izango zitzaien zertan ziharduten zehaztea. Zerbait arraroan zebiltzala antzematea askoz ere errazagoa zen, eta hari zioten beldur.

Estoldan ipinitako sokatxoaren ondotik hasi zuten hedaketa. Kablea ongi ezkutatzeko ordubete luzea ere aski izango ez zenez, emaitza duina lortzearekin konformatzekotan geratu ziren, eta arazo berezirik gabe zatiz zati helmugarantz hurbilduz, hogei minutu eskasen buruan ia bukaturik zuten.

Bat-batean, Inesek auto barrutik piztu eta etendako argiak ikusi zituen Anjelek eta bere ahots urduriak gaua urratu zuen:

– Ospa! Ospa! Ospa!

–Ez da posible! –etsipenak koska egin zion Aneri.

– Dena jaso beharra dago!

Halakorik gertatzea aukera urruna baino gehiago zenez, ongi loturik zuten egin beharrekoa:

Ahal bazen, dena garbi uzteari garrantzi berezia eman zioten. Kablea eta beste edozer susmagarria utziz gero, hobe izango baitzuten ekin-

tzaz ahaztea, poliziek saioa igarri, eta segurtasun-neurriak izugarri zorroztuko baitzituzten. Arrastorik utzi ezean, aldiz, egitasmoarekin nahiko lasai jarraitzeko moduan izango zirelakoan zeuden.

Aspiradora eta antzekoek duten sistema erabiltzea iruditu zitzaien egokiena. Botoi bati sakatu, beraien kasuan bi seguru kendu –istripuz ken ez zedin jarri zioten ziurtasun bikoitza–, eta ziztu bizian etorri zen kable guztia hogei minutu lehenago txirrikan zegoen posizio berera.

Ines besteak zeuden tokirantz hurbildu zen autoarekin, eta berehala egon ziren denak alde egiteko prest. Laurak barruan izan ahala eman zituen argibideak:

– Jende susmagarria dagoela-eta, patruila bati hona etortzeko agindua eman diote.

– Ziur al zaude gutaz ari direla? –Anjelek ez zuen deus entzun bere eskanerrean eta, lana txukun asko egin zutela irizten zionez, sinesgaitza zitzaion inork deitu izana.

– Gugandik oso gertu beste jende susmagarririk ez badabil behintzat, bai.

Eskanerrean entzundakoak ez zion zalantzari inongo zirrikiturik uzten. Une hartan bertan patruila bat beraiengandik oso hurbil izan zitekeen, eta lauek zituzten armak prest.

Ederki zekiten ezusteko tiroketa batean katigatuak geratuz gero, nekez irtengo zirela guztiz onik. Eta beraien artean zauritu bakar bat egotea aski izan zitekeen dena pikutara joateko.

Auskalo zenbat adrenalina isuri zuten ondorengo minutu pare bukaezin haietan. Haien ahoetatik ez zen hitz bakar bat gehiago irten bertatik ongi urrundu arte. Orduan, lehen uneko tentsio ikaragarria baretzen joan zen, eta pixkanaka denak lasaitu egin ziren. Patruilak ez zuen han deus aurkituko eta lau etakideek laster gozatu ahalko zuten Inesek alokaturiko apartamentuaren babesaz.

– Bihar edo etzi saia gaitezke berriro –bota zuen Anjelek beraien buruak arriskutik guztiz at sentitu bezain laster.

– Ez al duzu gaurkoarekin nahikoa izan! –haserretu zitzaion Santi.

– Eztabaida antzuetan nahasi ordez, hobe eskanerrari adi egotea, ez?

Inesen aipamenak errotik moztu zuen liskar hasiera hura, berehala ohartu baitziren etxean izan arte zeharo lekuz kanpo zegoela eztabaida oro.

Ekintza saioa prestatzen ari ziren tokira bidalitako patruilak zentralarekin zein frekuentziatan ziharduen jakin arren, hobe zuten, badaezpada ere, bigarren eskanerrean beste frekuentzia guztiak ere zaintzea, eta hura Anjelen lana zen.

Ordu laurden baten buruan entzun zuen Inesek denek entzun nahi zutena. Jende susmagarri haren arrastorik ez zegoela-eta, handik alde egiteko patruilak luzatutako baimen-eskaera. Eta hura onartzearekin, patruilari alde egiteko onespena emateaz gain, taldekoei ekintzarekin jarraitzeko esperantza berria ere eman zien zentralak.

## - XV -

Asteburuetatik kanpo denak apartamentuan oso gutxitan elkartzen baziren ere, inork ez zuen zalantza izpirik egin ostegun buruzuri hartan laurak bertan izatearen egokitasunaz. Bezperako ekintzak hori eta gehiago merezi zuela iritzi zioten aho batez.

Ohi bezala, apartamentuan irratia piztua zegoen. Ez irratia soilik, ordea. Albistearen garrantzia zela-eta, telebista ere jarria zuten ahalik eta berri gehien entzun asmoz.

Gehienetan, irratiaren zarata besterik ez zen aditzen. Bezperako ekintzarekin zerikusirik ez zuenetan telebistari bolumena kentzen baitzioten, irudiek berriro haiei interesatzen zitzaien albisteari buruz ari zela erakutsi arte.

Bi aparatuetako batek ekintzari loturiko edozein gai ukitzen hasi ahala, bere alboan zituen laurak. Biak hari buruz batera ari zirenean, berriz, banatu egiten ziren biei adi egoteko.

Egunkari guzti-guztiak erosi zituzten, gainera, eta baita ederki miatu ere Aznarren kontrako atentatuaren inguruan emandako edozein xehetasunen bila. Han zeuden denak egongelan barreiaturik, sekulako anabasan, interesatzen zitzaizkien orrietan irekiak.

Laster espainiar gobernuburu izatera helduko zen PPko presidentea argazkietan irribarretsu agertzen bazen ere, bibote haren azpian nabari zitzaion sustoaren handia.

Eragindako lurrikara begi-bistakoa izanik, beraien baitan hasieran uzkur pizturiko poza pixkanaka handituz joan zen, eta azkenerako iruditu zitzaien Carreroren aurkako ekintzak espainiar agintarien eskema oro apurtzea lortu zuen gisara, bezperakoak ere ia baldintza guztiak bete zituela antzeko eragina izateko.

– Horren blindaje ona izan ez balu, jai zuen! –argazkiak eta telebistako irudiak behin eta berriro aztertu ostean, Anjelek blindajeari leporatu zion ekintzak huts egitearen errua.

Santik, bere aldetik, helburuarekiko perpendikulartasun ezari egotzi zion hutsegitea. Bere iritziz, ekintza burutu zuten etakideek beraien antzeko arazoak izan zituzten, seguruenik, eta karga aktibatzerakoan nahiko posizio makurrarekin konformatu behar izan zuten. Handik ez zitzaien batere erraza izan bete-betean asmatzea. Autoa azkar samar badoa, segundo batean hogei bat metroko bidea egiten baitu.

Beraiek arazo berbera zuten: perpendikulartasunaz ezin baliatuz, pare-parean noiz pasatuko zen kalkulatzeko zailtasuna. Nolanahi ere, aukera hobearen faltan, horrela saiatzekotan ziren, eta Santi ziur zen Aznarren aurkako ekintza burutu berri zutenek ere gauza bera egin zutena.

– Ez al da pasatu bonba-autotik urrunegi? –Anek horretan ikusten zuen hutsaren arrazoi nagusia: distantzian.

Ekintza burutu zutenei bonba-autoa bigarren lerroan uztea ezinezkoa egin zitzaielakoan zegoen. Arrisku handiegia zelako seguruenik.

– Bai, hala dirudi –nahiz eta argazkiak nahasgarriak izan zitezkeen, Santi bat zetorren karga lehertzerakoan helburua urrunegi egon zitekeenaren susmoan.

– Hori ere izan daiteke arrazoietako bat, bai –onartu zuen Anjelek.

Aurreko goizaldeko sustoaren ondoren, beraien artean eztabaida bizia izan zen egin beharrekoaz eta bezperako ekintzak hura baztertzera bultzatu bazituen ere, sakoneko arazoak bere horretan zirauenez, han agertu zen berriro gaia.

– Guk ere lortuko dugu eta hutsik gabe gainera! –Anek indar berezia eman zien bere hitzei.

– Sekulakoa izango zen une honetan egitea! –Anjel ere zeharo animaturik zegoen.

– Noski, baina are segurtasun-neurri zorrotzagoak har ditzakete orain –Ines neurriz kanpoko euforia hura baretzen saiatu zen.

– Gainera, lehengoan gertaturikoa orain ekintza saio batekin lotu dezakete –gehitu zuen Santik.

Bere ustez, antzeko ekintza bat gertatu izanak bi ondorio zekartzan beraientzat. Bata guztiz baikorra: beren buruengan konfiantza handia ematea. Bestea, ordea, ezkorra: praktikan zaildu egingo zuen ekintza onik burutzea. Eta bi faktore horien nahasketa esku artean lehertuko zitzaien beldur zen; alegia, gehiegizko konfiantzaz itsuturik arrisku-muga gaindituko zuten beldur.

Eskapadaren ondorengo egun haietan jarraipen zehatza egin zioten hedabide zein eskanerrak ziotenari. Aipamen ñimiñoena ere ez zen egon ekintza saioarekin lotzeko modukoa. Bazekiten, gainera, poliziek egunero jasotako ehunka deien artean segidarik gabeak hainbeste izanik, normalena deus ez gertatzea zela, baina… Santirengan bederen zalantzak bazuen ostatu.

– Lehengo eguneko patruila arrunt hark ezer aurkitu ez bazuen ere, orain txakur prestatuagoek...

– Baita zera ere! –moztu zion Anjelek–. Alde horretatik ez dago arriskurik.

– Baina neurri zorrotzagoen aldetik bai –Inesek arazo nagusirantz gidatu zuen eztabaida.

– Ba, hartzen badituzte ohartuko gara, eta ezin bada ezin da, e! –Anek oso keinu adierazkorra egin zuen Santiri begira.

Azkenean, denak bat etorri ziren. Gau hartan erabilitako autoa baztertu, badaezpada ere, eta bere ordez beste bat lapurtuko zuten. Horrez gain, ongi begiratu beharra zegoen segurtasun-neurrietan aldaketarik balego, ezustean harrapa ez zitzan, eta horren arabera erabaki.

Ondoko egunetan egin beharreko lanen banaketa bukatzerako afaltzeko ordua gainean zuten. Arrautza frijituak eta aldez aurretik atonduriko tomate-saltsa izan zituzten mahai gainean; baita gazta sorta ederra ere, frantziar Estatuko ohiturei jarraikiz.

Aste pare bat lehenago, Aberri Egunaren bezperetan, ELAk eta LABek batera plazaraturiko komunikatua zela-eta, pozteko arrazoiak ez ziren hutsaren hurrengoak eta horretaz hitz egin zuten afalostean:

– Berebiziko garrantzia du –nabarmendu zuen Santik.

– Garrantzia bai, baina ez hainbestekoa –zuzendu zion Anek.

– ELAkoak fidagarriagoak balira… –Anjelek ere, Santik ez bezala, nahiko mesfidati hartu zuen berria.

– Balira eta balitz elkarrekin dabiltz! –Inesen hitz-jokoa.

Bazuen, bai, garrantzia; eta handia. Halakorik ez zen aspaldian gertatu eta abertzaleen arteko batasunaren bidea ireki zezakeen. Betidanik amesturiko elkarlan horretaz hitz egiteko parada ezin hobea eskaini zien.

–Bien artean gehiengo sindikala dute. Gehiengo politikoa ere abertzalea da. Elkar hartuko bagenu… –Santiren begirada ameslaria oso adierazgarria izan zen.

–"Bagenu"rentzat ez al duzu hitz-jokorik ezagutzen, Ines?

– Ez.

– Ba, tori bat: bagenu eta bagina, alferreko ahalegina!

Ez ziren, ez, garairik onenak elkar hartzeari buruz baikor izateko, abertzaleen arteko zatiketa inoiz baino handiagoa baitzen. “Hiltzaile” alde batetik; “saldua” bestetik… elkarri botatzen zizkiotenak gero eta larriagoak izanik, bazirudien ez zuela atzera bueltarik.

Gaiari gogoz heldu zioten eta Santik argi eta garbi azaldu zuen bere kezka borroka armatuak abertzaleen arteko elkar hartzeari jartzen zizkion oztopoei buruz.

Horren harira, taldekideek galdera ugari jarri zituzten mahai gainean: borroka armaturik gabe, nola egin aurrera, ordea? Nola lortu espainiar zein frantziar Estatuek euskaldunok erabakitakoa onar zezaten? Desobedientzia zibilaren bidez? Zer egiteko eta arriskatzeko prest zeuden borroka armatua hain gogor gaitzesten zutenek aurrera egiteko?

Eta han jardun zuten gaia jorratzen Ane eta Anjeli alde egiteko ordua heldu zitzaien arte. Haiek joan orduko, intimitate-gosez zegoen Ines arrainontzira hurbildu zen.

– Zoriontsuak ote dira Plixti eta Plaxta? –galdegin zion Santiri.

– Alai ikusten ditut nik –bi arraintxoak kiribilak egiten ari ziren orduan ere.

– Hain leku txiki eta estuan? –Inesek gehiago zehaztu zuen bere galdera.

– Ez dute besterik ezagutu –are gehiago hurbildu ziren biak arrainontzira–. Gainera oso “guraso” jatorrak egokitu zaizkie. Ez al da egia, Plixti? –bere kutuna zuen arra, Inesen begikoa emea zen bitartean.

– Batzuetan gure seme-alabatxoak balira bezala sentitzen ditut, bai –aitortu zion Inesek.

# - XVI -

Aznarren kontrako ekintzak ederki astindu zituen bazterrak. Egunetan hitz egin zen hari buruz, eta laster hartu zuen ETA erakundeak bere gain, bide batez *Alternatiba Demokratikoa* plazaratuz.

Lau etakideak jakitun ziren erakundearen asmoaz KAS alternatiba gaurkotzeari buruz, mezulariaren bidez jaso berria baitzuten gaia jorratzen zuen lan bat. Franco hil berri zela plazaraturiko alternatiba taktiko hura behin bakarrik egokitu baitzen, bi urte geroago, 1978ko urtarrilean. Geroztik, hamazazpi urte luzez, ukitu ere ez zen egin, eta hura gaurkotzea premiazkoa iritziz, oso garrantzitsutzat zeukaten pauso hura zuzen eta tentuz ematea. Nola, ordea?

Pozik hartu zuten, horregatik, halako proposamen zehatz eta irekia zabaldu izana: bi negoziazio-marko. Bata ETA erakundea eta espainiar Estatuaren artekoa, Autodeterminazio eskubidea ezagutua izan zedin. Bestea euskal herritar guztiei zegokiena, mugarik gabeko prozesu demokratikoari ekiteko.

Goiz hartan Ines eta Santik luzaz jardun zuten *Alternatiba Demokratiko* hari buruz, eta egongelako sofan eserita beste bien zain jarri zirenean, Josu legalaren gaiari heldu zioten. Poliziek legalari egindako jarraipenaz ohartu zirenetik hilabete luzea joana zen, eta berririk gabe jarraitzen zuten hari buruz.

– Ohartu ote da atzetik dituela? –Inesek hala espero zuen.

– Ez dut uste.

– Zerbait oker doala ohartu behar du behintzat.

Jarraipenaz jabetu zirenean, biek oso iritzi ezberdina eman zuten haren atzean egon zitekeen arrazoiaz. Inesen aburuz Josu ezker abertzaleko kidea zelako zelatatu zuten, badaezpada. Alokaturiko estudio batean bizi zen estudiante tunantea izanik are arrazoi handiagoarekin. Santik, ordea, oso bestelako iritzia zuen hasieran. Haren ustez ez baitzegoen arrazoirik legala susmopean izateko.

– Ziur al zaude txakurren begietara Josu euskaldun ikasle arrunta besterik ez dela? –galdegin zion Inesek orduko hartan.

– Ezker abertzaleko antolakundetan militatu gabea dela ziurtatu zidan.

– Eta inoiz ez al dio preso bati bisita egin, edo idatzi, edo...

– Kontxo! Horrela hasiz gero, milaka laguni egin beharko zioten jarraipena.

Euskal Herritik kanpo, espainiar Estatuan zehar zebiltzanak ez ziren, ordea, hainbeste. Haiek noizik eta behin zelatatzea ez zen horrenbesteko lana. Aldian behin ezusteko on bat jasotzekotan merezi zielakoan zegoen Ines.

– Bere etxea erabili ez badugu, oso garbi ez dagoenaren seinale, ez? –bota zion Santiri azken argudio gisa.

Erakundeari ez baitzitzaion iruditu Josu horretarako behar adina garbi zegoenik. Bere etxean taldeko lagunak edukitzeko oso garbi

behar zuen, eta ez zen hura kasua. Laguntza emateko adina bai, baina ez gehiago, unibertsitatean ikasle izatea ez baitzen estalki egokia.

Azkenean Santik onartu behar izan zuen Inesek emandakoak zirela arrazoi sendoenak, eta itxura guztien arabera orduko hura badaezpadako zelatatzea izan zitekeela.

Hilabete luzez makina bat buelta eman zioten gaiari, eta egun hartan ere hipotesiekin gora eta behera jarraitzen zuten:

– Txakurrak beharbada ez ziren ohartu isilpeko hitzordu bat zela –argudiatu zuen Inesek.

– Zerbait arrarotan zebilela antzemango zioten behintzat, eta zelatatzearekin segitzeko nahikoa motibo bazegoela. Ziur telefono entzuketak zorroztu dituztela.

– Seguruenik ondorengo hitzorduetara ere jarraitu diote, bai.

Hitzordu batek kale eginez gero, beste bat izaten zuten aldez aurretik finkatua astebete geroago, eta bigarren hark ere huts egiten zuen aldietarako hiru astean behin errepikatzekotan geratu ziren.

Horrez gain, telefonoa ere erabil zezaketen hariari berriro eusteko. Hori bai, erabiltzekotan oso tentuz egiten zuten. Adibidez, egunean bertan presazko hitzordu bat finkatzeko modua hitzartua zeukaten: telefono kabina batetik deitu eta, era zehatz batean, “Damaso” izeneko norbaitekin hitz egin nahia adierazi. Josuk aski zuen han “Damaso”rik ez zela bizi erantzutearekin.

Halako deiak edozeinek jaso ahal zituen, eta telefonoa kontrolpean izanda ere, poliziek nekez hartuko zioten susmo txarrik. Nahikoa zen “Damaso” bezalako izen arraro samarra aukeratzea, antzeko benetako dei batekin nahasketarik gerta ez zedin.

Jarraipenaren balizkoari ez zioten aldez aurretik behar adina kontu egin, eta ez zeukaten Josu ohartarazteko modu segururik. Maldizio ederrak bota zituzten horren kontura, berehala ohartu baitziren erremedio erraza zuela balizko hark: horretarako beste izen arraro samar bat aukeratu izan balute, poliziak ez ziren ezertaz jabetuko, eta Josuk ospa egiteko arazorik ez zukeen izango normalean.

– Eta deituko bagenio? –proposatu zuen bat-batean Inesek.

– Ezta pentsatu ere! –Santiri ez zitzaion proposamena batere gustatu.

– Ba, horrela uztea ere.... Josu erabiltzen ari garela iruditzen zait. “Erabiltze” horri nahi adina kakotx jarri, baina erabili azken batean.

– Ez pentsa nik ere batzuetan sentsazio gaizto hori ez dudanik. Soluzio onena hori da, ordea.

– Josuk ihes egitea lortuko balu, hori bai primerako soluzioa.

Poliziak atzetik zituela konturatu ahala Josuri telefonoz deitu ez deitu zalantzan izan ostean, baztertu egin zuten aukera hura arriskutsuegia iruditu, baina hilabete luze haren buruan halako dei batek zekarren arriskua baretu zelakoan, Inesek arrazoi sendoak jarri zituen mahai

gainean deitzearen alde, haren ustez oso garrantzitsua baitzen legalak arriskuaz jabetu eta hanka egin zezan.

Santik are sendoagotzat zituen, ordea, deitzearen kontrako bere arrazoiak, zeharo seguru baitzegoen poliziek taldea harrapatzeko amu gisa erabili nahi zutela legala. Taldekoek legalarekin harremanetan jarri zain zeudela hura ongi baino hobeto kontrolatuz; eta haren telefonoa are hobekiago.

Horrenbestez, deituko baliote hanka egitea lortuko zuenik batere segurua ez izateaz gain, poliziek berehala jakingo zuketen nondik egina izan zen deia. Eta hiritik bertatik egindakoa izateak oso informazio baliotsua emango zien: taldea bertan zen.

Inesek ontzat eman zuen argudio hura, nabarmena baitzen balizko hitzordu haietara inor agertzeke eta deirik gabe poliziek ez zutela inolaz ere taldea jada bertan zegoenaren susmorik hartuko, eta hori izugarri komeni zitzaiela. Hala ere, iruditu zitzaion bazegoela beste aukerarik:

– Eta zeharka abisatuko bagenio? –proposatu zion Santiri.

– Nola zeharka?

–Txakurrak ez ohartzeko moduan –zehaztu zuen Inesek bere proposamena.

Eta baita hura lortzeko mahai gainean zenbait aukera jarri ere. Haren iritziz poliziei ziria sartzeko modukoak omen ziren formula haietatik bat berak ez zuen, ordea, Santiren onespenik jaso.

Tentagarrien egin zitzaionari ere berehala egotzi zion akats nabarmena: poliziak lehen unean ohartu ez, eta Josuk ospa egitea lortzen bazuen, dei guztiak zehatz-mehatz aztertuko zituzten, eta halabeharrez ohartu.

Santik bereari eutsi zion, beraz: hobe zuten deitu gabe jarraitzea. Poliziak alfer-alferrik ibiliko ziren legala zelatatzen, eta bitartean beraiek lasaiago burutu zezaketen ekintza.

Ines ez zegoen batere konbentzituta hala jokatzearen egokitasunaz, eta Santik halako batean amore emango zuelakoan, han jarraitu zuen tematurik zeharka abisatzeko formula berriak proposatuz.

Eta beharbada azkenean lortuko zukeen, telefonoaren txirrinak eztabaida eten ez balu. Erabat eten ere, Anjelen deia inoiz ahazten ez diren horietakoa izan baitzen: poliziak atzetik zituzten.

Zur eta lur geratu zen Ines burkidearen azalpen urduriak entzutean. Anjelek zioenez, ez zuten zalantza izpirik jarraipenaz. Momentuz iskin egin zietelakoan zeuden arren, oso argi zeukaten ospa egin beharra zegoela. Berak eta Anek bai bederen.

Beraiei ere lehenbailehen hanka egitea gomendatu zien, eta Josuri deitzea, horretarako bera baino egokiagoak zirelakoan. Azalpen gehiago ematea alferrikakoa zela esanez, "zorte on!" hunkitu batez agurtu zen.

Halakorik ez zuten espero. Han zebiltzan legala gora eta legala behera... eta beste bikotea izan ataka larrian aurkitzen zena. Zer esanik ez poliziak haien atzetik bazebiltzan arrisku itzela zegoena. Zirt edo zart erabaki beharra zuten.

– Ziur ditxosozko garaje horregatik dela. Esan nizuen! –bota zuen Santik haserre.

Inesi ez zitzaion batere gustatu purrustada hura, baina une hartan egin zezaketen azkena ika-mikan hastea zelakoan, beste gai batera jo zuen.

– Alde egin aurretik, etxea hatz markez garbitu beharko dugu, ez?

– Ez daukagu minutu bat bera galtzerik. Armak eta paperak hartu, eta ospa!

Santik bazekien, esperientziak eman ohi duen eskarmentuari esker jakin ere, halakoetan segundo bakoitza erabakigarria izaten dela, eta ez zion utzi inongo zirrikiturik zorte txarrari. Berehala hartu zuten kalerako bidea.

Lau pareta itogarri haiek atzean utziaz, hirian murgiltzearekin, lasaiago sentitu ziren. Nahiz eta arriskua hor zebilen oraindik, putreak bezala haien buru gainean bueltaka, kalean askoz ere aukera zabalagoa zuten bederen onik irteteko.

Ez zioten eztabaidatzeari ekin Josuri deitu edo ez. Azken orduko berri latzak zirela-eta, zeharo argi zeukaten biak: burkidea jakinaren gainean jarri beharra zegoen ospa egin zezan.

– Leku seguruan izan ahala deituko diogu –proposatu zuen Santik.

– Zenbat eta azkarrago, hobe –ohartarazi zion Inesek.

Eztabaida labur baten buruan, Josuk lehenbailehen hanka egitea oso garrantzitsua zela onartu eta hiritik bertatik deitzea erabaki zuten. Hori bai, zeharka abisatzeko Inesek proposatu berri zituen formula haietako bat erabiltzeaz gain, segurtasun neurri ahalik eta zorrotzenak hartuz.

Ez baitzuten ahazteko moduan zazpi urte eta erdi lehenago etakide bati gertatua. Guardia zibilek bazekiten eguerdiko ordu batean laguntzaile bati deitu behar ziona, eta eskualde bateko telefono-kabina guztiak kontrolpean izan zituzten.

Ordu inguru hartan kabinetatik deitu zutenek sekula ahazten ez diren horietako sustoa jaso zuten bat-batean pistoladun mordoa gainera etorri zitzaizkienean. Eta etakideak sustoaren ostean tortura latzak ere bai.

Telefono-kabinak saihestekotan, haatik, tabernaren batetik deitu beharko zioten, eta hura ere ez zen batere aukera ona. Zer egin, beraz? Etxetik aldendu bitartean, azkenik, kabinaren aukera hobetsi zuten. Baita deia nork egingo zion ere: Santik.

Xehetasun guztiak lotu bitartean, halako deiak egiteko egokitzat zeukaten telefono-kabina baten gertutik pasatu ziren ingurua zorrotz aztertuz. Ezer susmagarririk ez zuten sumatu. Santi, orduan, bakarrik bueltatu eta kabinara sartu zen.

Hariaren beste aldean emakume baten ahotsa entzun zuen bere deiari erantzunez. Urduri ipini zen.

– Josurekin hitz egin nahi dut.

– Dutxan dago –erantzun zion hark–. Noren partez dela esan behar diot?

Deia ahalik eta gutxien luzatzea erabakia zuten, eta egoera hura oso susmagarria egin zitzaion. Ederki zekien zein izaten zen polizien jokaera halakoetan: deia ahalik eta gehien luzatu, eta aukera izanez gero, atxilotuari torturapean telefonoz erantzun arazi haren taldekideak harrapatzeko. Eta baita harrapatu ere behin baino gehiagotan.

Segurtasun neurri egokiei esker ihes egindakoak zituen gehienbat gogoan. Hala nola, bizpahiru urte lehenago atxiloturiko etakide baten kasua. Torturapean muga-pasoa trenez egin zuela aitortu behar izan zuena, hain zuzen. Hura erauzi zioten bezala, taldekide baten telefono deiari erantzun araztea ere lortu baitzuten poliziek. Alferalferrik, ordea, aldez aurretik ados jarriak baitziren eman beharreko erantzun zehatz bati buruz, eta hariaren beste aldekoa erraz jabetu zen egoeraz.

Beraiek ez zuten adostua antzeko trikimailurik, eta gainera "dutxan" omen zegoen. Nor ote zen emakume hura? Zer esan behar zion? Ondorio bakarra atera zuen argi: "dutxatik" irten zain egotea erokeria zatekeela.

– Pako naiz. Har dezala dutxa lasai, geroxeago pasako naiz etxetiketa –nahiz eta hankak dardarka izan, Santiri ez zitzaion urduritasunik nabari ahotsean.

– Baina...

Pako zela esatea aldez aurretik pentsatua zuen, izen hura eman baitzion Josuri bere kontaktua zenean. Gainerakoa inprobisazio hutsean

joan zitzaion. Deia berehala moztearena ere bai, emakumearen «baina...» harritua airean geratu baitzen.

Hortik aurrerakoan Santik gidoiari jarraitu zion, eta Inesengana itzuli zen bertatik lehenbailehen ospa egiteko. Santiren azalpen urduriak entzun orduko eman zuen hark bere iritzia.

– Ez ote zen hobe Josuri esan beharrekoa emakumeari esatea?

– Eta txakurra bada?

– Eta ez bada?

Ez zegoen, ez, batere garbi Santik hala jokatuz asmatu ote zuen edo ez. Hariaren bestaldekoa polizia bazen, ezingo zuen ondorio argirik atera dei hartatik, eta hori primeran zetorkien. Bazitekeen, haatik, polizia ez izatea, eta orduan Josu izango zen kaltea nozituko zuena: dei haren zioak zeharo ihes egingo zionez, nekez jabetuko zen egoeraren larriaz.

– Deituko al diogu berriro? –proposatu zuen Inesek.

– Ezta pentsatu ere! Leku seguruan izan arte, hobe dugu gehiago ez arriskatzea.

– Ba, Euskal Herrira iritsi bezain pronto orduan.

Bazuten, bai, arrazoirik hiritik lehenbailehen ospa egiteko. Gaua seguru non igaro ez zeukaten, eta hotelen batera joatea ez zitzaien batere irtenbide ona iruditu. Egoera hartan poliziek kontrolpean izango zituzten den-denak.

Nola ihes egin, ordea? Autoz ezta pentsatu ere, zeren eta, kontrolen batean erortzeko beldurra zela eta, halako eskapadetarako autoek ez baitzieten behar adina konfiantza ematen.

Trenaren aukera ere alboratzeko modukoa iruditu zitzaien. Bai behintzat bidearen lehen zatia egiteko, tren-geltoki handiak poliziez josiak egoten baitziren, eta une hartan bidaia luzeak zeharo kontrolpean irudikatzen zituzten.

Euskal Herrira arteko ihesaldia zatika egitea erabaki zuten, beraz, eta lehen zati arriskutsu hartarako autobusaz baliatzea. Hurrengo zatia trenez burutu zezaketen, eta gero gerokoak.

Bide bazterreko geltoki txiki batean igo ziren autobusera. Ederki beteta zihoan, eta horrek are konfiantza handiagoa eman zien. Kontrolen bat pasatu behar baldin bazuten, seguruenik ez ziren jarriko hainbeste jende banan-banan miatzen.

Esperantza horri eutsiz ekin zieten ondorengo kilometro labur bezain arriskutsuei, burkideak etengabe gogoan: non izango ote ziren Ane eta Anjel? Beraiek bezala ospa egiteko zorian, edo polizien atzaparretan ordurako? Eta Josu?

Harturiko segurtasun-neurri zorrotzei esker bazitekeen denak onik irtetea. Torturen ondorioz atxiloketa-kate luzea jadanik martxan izatea ere bai, ordea.

## - Epilogoa -

Ines eta Josuk hamar urte luze zeramaten elkarrekin izan gabe isilpeko hitzordu hartan elkartu zirenean eta jakin-minez gainezka zeuden biak.

– Zer moduz zabiltzate? –Josu izan zen hitz egiten lehena, elkarri emaniko besarkada berotik askatu ahala.

– Ni oso ondo, eta alaba zer esanik ez –alai erantzun zion Inesek. Alde ederra baitzegoen zortzi urteko Argi alabarentzat ama espetxean izan, edota bere alboan.

Inesek lau urte eta erdi eginak zituen frantziar Estatuan kartzelan, eta, estraditatu ondoren, beste sei hilabete espainiarrean. Berriki, baldintzapeko askatasunean utzia zuten frantziarren eta espainiarren akusazioak berberak izan zitezkeelakoan.

– Eta Santi?

– Beno –zer erantzun asmatu ezinik geratu zen–, lehen baino hobeto.

Alaiago zebilen, bai. Azkenaldi hartako berriak oso lagungarri izan zitzaizkion, eta bisitetan zein gutunetan bizi poza zerion.

Hamar urte lehenago, korrika eta presaka ihes egitea lortu ondoren, frantziar Estatura heldu zirenean bezainbesteko bizi pozik ez, hala ere. Ordukoak, eta ondoren sasian emandakoak, bizitzako unerik bete eta zoriontsuentzat baitzituzten biek.

Lehenik, Anerekin elkartu ziren, eta hark esan zien Anjel bere neskalagunarekin zela aspaldiko partez. Gero, Oihana bera ere ezagutu zuten eta bi bikoteek hamabost egun zoragarri eman ahal izan zituzten itsas bazterrean horretarako propio alokaturiko etxetxo batean.

Handik aurrerakoak ere ezer gutxi izan zuen ikustekorik espainiar Estatuan pasatutako estutasunekin, eta sasia berez beti gogorra bada ere, ederki moldatu ziren biak isilpeko lanean... harik eta gutxien espero zutenean frantziar polizia gainera etorri zitzaien arte.

Geroztik, Santik itzalpea besterik ez zuen ezagutu, eta Lizarra-Garaziko hitzarmenaren harira sekulako euforian murgildu ostean zeharo lur jota geratu zen amets eder hura zapuztu zitzaionean. Hori bai, kartzelari duintasun handiz jarraitu zion aurre egiten.

– Anoetako proposamenarekin animatuko zen, ez?

– Izugarri. Oso gutun baikorra idatzi zidan berehala.

– Hankak lurrean izanen ahal ditu behintzat!

Beharko zituen, bai, Batasuna-k sei hilabete lehenago Anoetako belodromoan egindako proposamena aurrera atera ezean, “Orain Herria, orain bakea”, etorkizun gogorra baitzuen zain: lehenik frantziar espetxeak, ondoren estradizioa, eta gero gerokoak, espainiar Estatuan irekiak zituen hamaika sumarioengatik.

Garai batean taldekide izandako Anjel ere antzeko egoeran zegoen, frantziar poliziek Ines eta Santi baino are lehenago atxilotu zutenetik. Espainiarrek luzaturiko estradizio eskaerak onartuak zituzten

frantziar epaileek eta ederki zekien haiengatik ezarriko zizkioten espetxe zigorrak oso gogorrak izango zirela.

– Eta zu, zer moduz moldatzen zara? –Inesek ere lehenbailehen ase nahi izan zuen bere jakin-min hura.

– Primeran!

– Itxura ezin hobea duzu, bai. Eta kristoren kolorea!

– Oso maiz joaten naiz mendira. Ahal dudan guztietan, egia esan. Orain aprobetxatu beharko, itzalpeak koloreari mesede gutxi egiten dio eta.

Nahiz eta berriro espetxeratua izateko aukera zabala izan, oso umoretsu bota zuen Josuk, balizko hura erabat bereganatua baitzeukan.

Askatasuna antolakundean zebilen bezala ibiliaz, preso, iheslari eta deportatuen alde buru belarri lanean, bazekien, ederki jakin ere, edozein egunetan atxilo hartu ahal zutena. Albait gehien irautea zen bere asmoa. Eta ahal zuen guztia ematea.

Kartzelatik atera eta berehala ekin zion lan hari, barruan utzitako lagun guztiek hura eta gehiago merezi zutelakoan. Baldintzarik gogorrenetan, barruan presoek borrokan tinko jarraitzen bazuten, nola ez zuen bada berak beste horrenbeste egingo kanpoan.

Hitzordu hura, hain zuzen, Askatasuna-ren lanarekin estu lotua zegoen. Inesi proposamen zehatz bat egin asmoz elkartu baitzen berarekin. Hura luzatu aurretik, dena den, Josuk bere erorketarena argitu

nahi izan zuen, oraindik ez baitzekien zergatik ez zen agertu inor hamar urte lehenagoko hitzordu haietara.

Berehala azaldu zizkion Inesek orduan gertaturikoak: poliziak atzetik zituela ohartu zirenekoa; ospa egin aurretik Santik egin zion deia; emakume haren erantzuna dutxan zegoela esanez...

– Ba, egia da dutxan nengoela –argitu zion Josuk.

Bere lagun bat izan zen deia hartu zuena eta hark esan zionean Pakok deitu zuela, eta geroxeago etxetik pasatuko zela, harridurak gaina hartu zion kezkari bere baitan. Nor ote zen bisitari hura?

Eta harrituta jarraitu zuen polizien galderek misterioa argitu zioten arte. Atxilotu ahala izugarri interesatu baitziren Pako famatu hartaz. Orduan bai kezkatu zela. Atxilo edukiko zuten bost egun ikaragarriengatik ez ezik, baita buruan etengabe izan zuen dudarengatik ere: «ez ahal da benetan etxera agertuko!».

– A zer zorte txarra!! –jalgi zuen Inesek burkidearen azalpenak penaz entzun ondoren.

– Lasai. Nabarmena da gain-gainean nituela, eta bestela ere ez dut uste ospa egiteko aukerarik emanen zidatenik.

Hala zirudien, bai, zeren eta Santik bigarren aldiz deitu zuenerako, Euskal Herritik jada, Josu polizien atzaparretan baitzen.

Orduko hartan deiari erantzun zionak aurpegi gogorregia izan zuen ea Pako zen galdegitean. Santiri hain egin zitzaion nabaria hariaren

bestaldean zegoenaren nortasuna, berehala moztu zuela komunikazioa.

Gero, egunkarien bidez Josu zehazki noiz atxilotu zuten jakitean, amorrazioak gainezka egin zion dei hartan huts ikaragarria egin zuelakoan. Esan beharrekoa emakume hari esan balio...

Josuren azalpenek garbi utzi zuten, ordea, ez zuela inondik ere hutsik egin, haren ustez erdi-erdian asmatu baitzuen lehen dei hartan, poliziak zeharo despistatuz.

–Atxilotu nindutenean amorratuta zeuden. Pako etxean agertu zain egon ziren, eta argi dago atera zuten ondorioa: deiarekin ziri galanta sartu zenietela.

Inesi sekulako poza eman zion hura entzuteak, jakin ederki baitzekien azalpen hark Santirengan izango zuen eragin ezin hobea. Aukera izan ahala aipatuko zion Josuk esandakoa, aspaldiko kontua izanagatik, oso lagungarri egingo baitzitzaion burkidearen iritzia.

– Zuek ospa egitea lortu zenuten, eta hori zen garrantzitsuena –animatu zen Josu.

– Zu sakrifikatu beharra izan genuen horretarako, ordea.

Inesek zehatz-mehatz azaldu zizkion gai hari buruz hamar urte lehenago izandako eztabaida eta burutazioak, eta Josuk ez zuen inongo zailtasunik izan erabaki hura ulertzeko.

Ez zen, gainera, aspaldiko kontua talde bat berregituratzera joandako etakide ilegal batzuen erorketarena, nonbait poliziak legal bati luzaz egindako jarraipenaren haritik: behin eta berriro zelatatu omen zuten ilegalak harrapatu arte.

Poliziek ederki baitzekiten, tortura latzenak erabilita ere, legalei gehienetan ezer gutxi ateratzen ahal zietela. Ilegal batek eduki zezakeen informazioa askoz ere garrantzitsuagoa zen haientzat. Horregatik eusten zieten hain luzaz legalen hariei ilegalak harrapatu asmoz.

Josu oso gustura geratu zen hizketaldi hartaz, eta une aproposa iruditu zitzaion Inesi proposamena luzatzeko. Gaia aldatu zuen, beraz, eta zuzenean joan zen harira:

– Errepresioaren kontrako arloan ziharduten lagun dezente espetxeratu dituzte azkenaldian, eta horietako batek utzitako hutsunea betetzeko oso egokia zara –hasi zen Josu.

Hasi, eta bukatu, ez baitzuen jarraitzerik izan. Inesek bazeukan halako proposamenen bat luzatuko ote zionaren susmoa, eta ondo mamitua eta hausnartua zuen erantzuna:

– Lan handiegia litzateke hori niretzat. Bestela ere maiz sentitzen dut egoerak gainditzen nauela, eta horrelako arduraren bat hartuko banu...

Inesen aurpegian nabarmen islatu zen erantzun hura eman beharraren gogorra.

– Ezezkoa emateagatik ez zaitez behintzat gaizki sentitu.

Nahikoa lan zuen, bai, alabarekin. Espetxean izan zen bitartean, gurasoak arduratu ziren Argiz, eta ezin zion huts egin zortzi urteko neskato hari, bere behar handia baitzuen.

Santiz arduratzea ere ez zen lan makala izango. Oraindik ez zioten baimenik eman hura bisitatzeko, baina onartu bezain azkar ahalik eta maizenen joateko asmoa zuen, eta horretan emango zituen asteburu asko eta asko.

Hura dena gutxi balitz, gainera, bizitza aurrera atera beharra zeukan. Ogibiderik ez zuen oraindik, eta bai Santiren senideek bai berarenak laguntza paregabea ematen bazioten ere, ez zuen inongo gogorik luzaz hala jarraitzeko.

– Ahal dudana egingo dut, e!

– Horretaz ez dut zalantza izpirik, eta biziki eskertzen dizut zure prestutasuna.

Besarkada bero batekin agurtu zuten elkar.

– Beno, badakizu, edozer gauza gertatuta ere, manifa batean ezagutu dugu elkar, bai? –gogorarazi zion Josuk.

– Ea laster ikusten garen. Eta zorte on, beharko duzu eta.

– Baita zuk ere, txikita.

## **atara**miñe formatu txikian

---

**El silencio del infierno**
Fernando Alonso
2003

---

**Gosea lagun, laguna**
Segapoto kolektiboa
2004

---

**Lunaren Goiztiri**
Juan Luis Mugertza
2005

---

**Claude Gueux**
Victor Hugo (itzulpena: Zorion Zamakola)
2007

---

**Kartzelako neurriak**
Urtzi Zubizarreta
2008

---

**Bakarmortuko kronikak**
Mikel Antza
2011

---

**Ametsen txokoan bizi baiz**
Ibon Muñoa
2011

---

**Fakin Xokona**
Oier Goitia Abadia
2012

---

**Sasian Barna**
Xabier Makazaga
2012

**Santi, Ines, Ane eta Anjel dira baina Saioa, Zigor edo Miren izan zitezkeen. Trepetak motxilan bildu eta poltsikoak ametsez lepo mugaren bestaldera joandakoak, "mugaren bestaldera joatea"k berun zaporea zuen garaiean.**

**Zapore mikatz bezain gozoko kontakizuna dastatuko du irakurleak, orriak pasa ahala. Mitifikatzeko helbururik gabe, urte luzez hamaika euskal gizon-emakumek parte hartu zuten borroka klandestinoaren zertzeladak. Izan zirelako baikara eta garelako izango baitira. Gu eta haiek.**



**Xabier Makazaga**
1958
Zarautz

1981ean Iparraldean errefuxiatu ondoren, hogei urte eman zituen frantziar Estatuan sasian eta bi espetxealditan. Gero, bi urte Zarautzen, eta 2003an alde egitea erabaki behar izan zuen, berriro ere torturaren ikaraz. Bruselara joan eta han bizi da geroztik.

Torturaren gaia jorratu du gehienbat bertan, tartean hiru liburu idatziz: "*Torturadores & CIA*", "*La red: el tormento en la España constitucional*" eta "*Manual del torturador español*". Lehena eta azkena sarean daude eskuragarri, dohain.



**atara**miñe
**www.literaturakoadernoak.org**